


# Gure memoria, gure historia

IBON MUÑOA ARIZMENDIARRIETA



EGILEA:
**Ibon Muñoa Arizmendiarrieta**

Centro Penitenciario Córdoba
14015 Córdoba

Ibon Muñoa 2000ko urrian atxilotu zuten. Harrez gero preso daukate: Valdermoro, Kordoba, Burgos, Langraitz, Puerto I eta, 2014ko martxotik hona, Kordoban.

AZALEKO IRUDIA:
**Mikel Zarrabe Elkoroiribe**

**www.literaturakoadernoak.org**

---





LEGE GORDAILUA. DEPÓSITO LEGAL. DÉPOT LÉGAL:

*Iñigo eta Mariani.*

*Paul eta Marisoli.*

*Emi Aiastui eta Julen Ereñagari... eta Juanita Goikoetxeari.*

*Amaia eta Matile Isasi-Isasmendi eta Marisa Guillermori.*

*Presoak bisitatzen dituztenei.*

*Presoei idazten dizkietenei.*

*Gure aldeko manifetara joaten direnei.*

Espetxean idazten duen presoa, kaiolan kantari ari den txoriarekin parekatu izan du batek baino gehiagok. Arrazonamendu horri jarraituz gero, paretsuago litzateke preso dagoenak idazten duena bertsoa edo poesia denean, bai bata eta bai bestea direlako kantura molda daitezkeenak. Bertsoa kantatuz errezitatzen delako eta asmo horretarako egiten delako. Kantuz egiten den narrazioa da, nolabait esateko. Eta kaiolako txoriak zergatik kantatzen ote duen ez digu berak esango, baina haren balizko interpreteek esango dute txoria tristurak daramala kantura... Eta presoa, zerk eramaten du idaztera, doinu baten neurrirako idatziak egitera?



Batzuek, ez dakit erdi txantxetan edo benetan, esango dute espetxean artista, idazle... bihurtzen direla euskal presoak. Beste batzuek esan dezakete aurretik zirela artista edo idazle eta kartzelan dohain hori garatu baizik ez dutela egin. Korapilo nahasi samarra iruditzen zait eta ez naiz ausartuko hori askatzen hastera. Esperientziaz dakidana da presoak espetxeko hormetatik harago begiratu nahi duela beti, irudimenarekin eta itxaropenarekin; egon nahi ez duen lekuan dago

presoa, eta ez dagoen lekuan egon nahi du. Irudimenarekin soilik lor dezake nahi duen lekuan egotea, nahi duen lekuan atsedena bilatzea, bere espiritua sendatzea eta sendotzea.

Espetxean asko idatzi izan da, bertsotan eta prosan. Hau ez da espetxeko literaturaren tradizioa eta ibili osoa aztertzeko lekua, jakina. Baina, Ibon Muñoaren jarduna espetxeko literaturaren tradizioan tradizionala izan den generoan kokatzen da, bertsogintzan alegia, eta poesian. Horretan erreparatzea merezi duela iruditzen zait.

Espetxeko literatura Bernart Etxepareren bertso eta poesiarekin hasten da, duela ia bostehun urte, 1545ean, eta bide batez esan behar da euskal literatura bera ere hortxe hasten dela, bere *Linguae Vasconum Primitiae* liburuarekin. Nork ez ditu entzun haren "Kontrapas" eta "Sautrela"? Euskararen aldarria egiten zuen Etxeparek.

Eta maitasunarena egiten zuen Iztuetak. Zenbaiten ustez euskarazko maitasun bertso ederrenak omen direnak Logroñoko espetxean idatzi zituen Juan Inazio Iztuetak 1806an. *"Kontxesirenak"*

izenburuarekin idatzi zizkion bertso horiek bere maiteari, eta *"Ogeita lau leguaz nago aparte, Bitartean ba dauzkat milloi bat ate"*, zioen bertso batean. *"Esperantzetan bizi, maite gozoa, noizbait kunplituko da gure plazoa"* idazten zuen hurrengoan. Urruntasuna, herrimina, itxaropena eta maitearekiko ametsa... ez dira gaurko kontuak.

1936-39ko gerrako preso batzuek ere bertsoak idatzi zituzten espetxetik, El Duesotik, Puerto de Santa Mariatik... Ezinezkoa da guztien aipamena egitea, baina garai honetako Luis Rezola Tximela tolosarra aipatu nahi nuke. Duesoko espetxearen aipamenak, eta Puerto de Santa Mariarenak, ugariak, xehetasunetan aberatsak eta benetan ederrak dira haren bertsoetan:



*Astera nua kantuan*
*Santa Mariko Puertuan,*
*onela ditut penak aztutzen*
*etxe giltzatuan.*
*Gordetzen badet buruan,*
*ezta jakingo munduan*
*ogei ta iru urte ederrekin*
*gaur nola naguan.*

Garai haietako espetxeak nolakoak ziren, presoak nola bizi ziren, zer sentipen, beldur eta lazeria zituzten erakusten digute bertso hauek. Kronika bikaina dira alde horretatik.

Kartzelak sormen leku izan dira eta dira, lehen eta orain, eta presoek, euskal preso politikoek, sormen lan oparoa egin dute. 1970ko hamarkadan Zamorako konkordatu espetxean Xabier Amurizak bertsogintzan eta bertsogintzaren teorizazioan egindako lana egundokoa izan zen. Ordutik gaur arterakoan espetxean egon izan garen askok eta askok eskuliburu gisa erabili izan dugu momentu batean edo bestean Amurizaren *"Zu ere bertsolari"* liburua, eta espetxean ez ezik kalean ere bertso eskoletako ikasleentzat oinarri izan dira haren lanak.

Euskal presoak talde handi samarretan egon diren espetxeetan, 1980ko hamarkadan batez ere, hainbat preso beren artean bertso paperak eginez eta trukatuz, elkarri erakutsiz eta ikasiz, praktikatuz... aritu izan dira. Bertso paper lehiaketetan sariak lortu ere bai batzuek, Jon Tapiak esaterako. Bertsolari aldizkariak atera zuen zen-

baki bat duela urte mordoxka bertsolari eta bertsozale presoen lanekin; bertsoz osatutako banakako liburuak atera dituzte preso batzuek... Bertsogintza oparoa eman du espetxeak, eta gaietan ere oparoa da espetxeko bertsogintza.

Kartzela, dena dela, ez da leku ona inorentzat; sufrimendu lekua da, eta ez dut uste sufrimendua ona denik ezertarako, are gutxiago sormenerako. Espetxeak bakardadea dakar, zeure gizartearekiko urruntasuna, eta zeure etxe, herri eta komunitatearekiko oroimina, haiei maitasuna adierazi nahia, haiekin elkartuko zaren momentuarekiko ametsa, gero hobe baten itxaropena... Sentipen horiek konstanteak dira espetxean, horiekin bizi zara eta horiek bizi zaituzte, eta, galtzen badituzu, bizitzeko motiboak dira galtzen dituzunak.



Espetxetik edo erbestetik etxekoei eskutitz bat idatzi beharrean suertatzen zarenean, bertsoa izan da euskal herritar askoren komunikatzeko formatua, ez garelako izan prosa idatzian etxekoekin komunikatzeko joerakoak. Paper zuriaren aurrean mutu geratzen gara eta errazagoa-edo

izan zaigu, eskutitza idazten hasita, bertso batzuk egitea.

Eskutitz arrunt bateko prosan ez bezala, bertso idatzietan komunikazioaz gain edertasuna ere bilatzen du egileak. Bertsoak ematen du "teatralizaziorako" aukera ere, gauzak ironiaz esateko, garratza denari gozotasuna emateko, prosan edo aurrez aurreko elkarrizketa batean esango ez genituzkeen gauzak esateko, esateko moduan zenbait lizentzia erabiltzeko...

Hau guztia ongi ikusten da Ibon Muñoaren bertso eta poesiagintzan, eta ongi ikusten da ***"Gure historia, gure memoria"*** liburuan. Ama-Lurra sarritan du aipagai Ibonek, eta Ama Lur horretako leku zehatzak, memoriako mapan zehatz kokatzen dituenak, Kalamua, Eibar, Arrate... izendatzen ditu, eta "Kalamua, desiren eremua..." ateratzen zaio hasperen bat bezala. Asaben kabiari kantatzen dio, utopiari... "Negu gorriaren gau luzeetan udaberria ametsa da" dio. Baina badaki non dagoen, eta Kordoba edo beste edozein espetxetako ziegan agertzen diren labezomorroei kantatzen die ironiaz.

19 urteko espetxealdiak zernahitarako denbora ematen du; ez da herrimina soilik, ez da etxemina soilik. Borroka ere bada, kide hilen oroimena, espetxean hil direnekiko urradura. Gogoan ditu adinean aurrera, zahartzaroan sartuta, espetxean jarraitzen duten kideak... Eta presente ditu gai sozial eta politikoak, hurbilekoak eta urrunekoak dirudienak, oraingoak eta etorkizunekoak. Lekuz kanpo bizi baita presoa, baina ez garaiz kanpo, eta bere garaiko kezkek kezkatzen dute, bere garaiagatik eta etorkizunagatik borrokatzen du presoak. Bere garaiak bizi du Ibon, eta etorkizuna du amets.



Espetxeko bertsogintza, espetxeko kronika ere bada, gizartetik ezkutatzen saiatzen diren mundu baten kronika. Kronikagintza ahalik eta laburrena opa diot, dena dela, Iboni, eta ahalik bizkorren itzul dadila bere lurretara, bere bidezidor zaharretara, Kalamuara, Arratera, Eibarrera... berarekin batera itzuliko delako hor zehar sakabanatua dabilen gure espirituaren zatitxo bat ere.

***Jokin Urain Larrañaga***

***Gure memoria, gure historia*** Ibon Muñoaren seigarren liburua dugu. Aurretik argitaratuak ditu:
*Ametsen txokoan bizi naiz* (2011),
*Ainarak herrira itzuliko dira* (2014),
*Bidean gaude, aurrera goaz, joan zirenekin* (2016),
*Udaberrian biziko gara* (2017) *eta*
*Hamaika desio utopiarako* (2018).
Haien ildoari eta orden kronologikoari jarraitzen diete liburu honetako bertsoek ere.

Hartara, lehen bertsoak 722. zenbakia darama; azkenak, 862.a. Guztira, 141 bertso berri, 2018ko apirilaren 1etik 2019ko ekainaren 23ra artean Kordobako espetxean idatziak.

*722*

**Egia iraultzailea delako**

1

Sorbaldan tink bermatu dut
aizkoraren kirtena,
gezurraren totemari
mozteko ahalmena,
arbola hori delako
munduan ustelena,
halaber, boterearen
haberik zaharrena.

2

Kemenez erabili dut
egiaren aizkora,
kolpe-kolpez iritsi naiz
gezurraren lepora,
harro zegoen begira
beldurrik gabe gora,
intzirika erori da
basoaren hondora.

3
Gezurraren adar motzak
zolan ditut txikitu,
sustrai ankerrak ondoren
erauzita ezgaitu,
Historiaren eskerra
ariman dut sentitu,
ekintzarekin delako
utopia lilitu.

4
Otarrean banan-banan
ezpalak ditut bildu,
egiak zorrozki ditzan
ahanzturan maspildu,
bakea egunsentian
ez dadila kikildu,
hantusteen arrabotsa
diezagula isildu.

5
Jaunek, beltzak esklabotu
zituzten gezurrekin,
indiarrak menderatu
amarru itzelekin,
beharginak ohi dituzte
lokartzen promesekin,
bozak erraz eskuratzen
ustezko asmorekin.



6
Gezurrekin hedatzen da
bizkor arrazismoa,
sarri ziplo hasten dira
gerrak ta gorrotoa,
Gaztelak horrela zuen
zanpatu Nafarroa,
Hitler, Franco lez, egin zen
Balberen borreroa.

7
Plazetan laga ditugu
biluztuta gezurrak,
eurekin dirutu ziren
inperio lapurrak,
orain klarki dakigunez
zeinek diren makurrak,
itzul diezazkigutela,
etikaren gailurrak.

8
Gezur barik jendartea
zuzen dugu onduko,
elkartasunaz erabat
pobrezia gainduko
egia noizbait dugunez
batera errotuko,
asaben bazterrak dira
ederki ñirñirtuko.

*2018ko apirilaren 1ean*

*723*

**(2018.03.06)**

**Gurekin biziko den Xabier Rey Urmenetari**

1

Antxo, enarekin abiatu zinen
atseden hartzeko Euskal Herrira,
iskin egiteko kinka bortitzari,
hormatzarrak berriz ez ikusteko,
Donibanen zaude aspaldiko partez
auzoan zutunik zurekin gaude.
Espetxeak zizun bizitza estutu
estresak gogoa atsekabetu,
“bengantzak hil zaitu, sakabanaketak”,
zeure gorpuari beha diogu,
tortura hitz latza ahoskatu dugu
baita urruntasun krudela ere.
Arnasa zitzaigun bat batean eten
albistea entzun genuenean,
irriak negarra ordezka dezala
tristura kemena bihur dadila,
sentierak dira gozoro hunkitu
oroituta zure samurtasuna.

2

Iruñean gaua hedatzen ari da
zeru oskorriak agurtu zaitu,
geure pilpiretan biziko zarenez
sentituko duzu udaberria,
hego haizearen une sorginetan
Orhin hegatuko gara zurekin.
Dantzari adina langile prestua
militante eta ikasle fina,
oraina delako dir-dir ostadarra
ereingo ditugu zure desirak,
krabelin gorrien hostoak laztanduz
maitez diotsugu, gu zu garela.
Antxo, ametsetan dantzatuko zara
ñir-ñir direnean izarrak hasten,
goiztiriak dira ederrak izango
berde, zuri, gorri eta moreak,
joan ziren minekin dastatuko duzu
askatasunaren lurrin freskoa.

*2018ko apirilaren1ean*

*724*
**Azeri bati**

1
Azeriak darama
kulunka buztana,
gustatzen zaiolako
haritzen oihana,
belarriak tente, du
gaitzesten porlana,
natura suntsitzeko
daukagun afana.



2
Buru-zabala du ta
zorrotza muturra,
baserrietan deitzen
diote lapurra,
ehizatzeko unean
omen da zuhurra,
bildots ta oiloekin
goserik makurra.

3
Haragijalea da
azeri deslaia,
zoritxarrez guretzat
edonon etsaia,
irrikaz hobesten du
bizitza salbaia,
liluraz begiratzen
ilargi arraia.

4
Ilaje gorria du
azeri lotiak
truku guztiak ondo
dakizki aztiak,
gauean erraz ditu
gainditzen hesiak,
oiloak diezazkion
ken aharrausiak.

5
Oinazez intzirika
dantzut azeria,
arte batek baitio
egin aberia,
horregatik erabat
dago eroria,
bertan nagoelako
izan du zoria.

6
Azeria tentuz dut
artetik libratu,
izaki hau behar den
bezala tratatu,
zauria gero diot
poliki osatu
esker onez eskuak
dizkit mihizkatu.

7
Azeria badoa
herrenka zulora,
onik ailegatu da
kumeen albora,
jaten emango diot
ez dadin hondora,
izan dezan lehengo
sasoia gerora.

8
Azeri dotorea
omen da suspertu,
hanka mindua diot
gaur berriz aztertu,
nahiz ezin dudan bere
sen basa ulertu,
zelaian bare gaude
lagunak lez gertu.

*2018ko apirilaren 8an*

*725*

**Pederastak eta pedofiloak**

1

Pederastek beste pedofiloek,
haurren bizinahia hondatzen dute,
irritsaren mende dagoelako
ankerrak biktimak larrutzen ditu,
irribarre asko itzali dira
harrapari lizun horien hobenez
gure inguruan hamaika dago
kalean, elizan....mozorrotuta.
Pederasten lera mutilak dira,
pedofiloena neska-mutilak,
interneten ziren aspaldi sartu
edonongo haurrak gutiziatzeko,
oporrak eratzen omen dituzte
merke jarduteko sexu zingiran,
arrangura barik ehizatzen dute
babesik ez duen haur behartsua.

2

Pederasten kontra mintzatzen gara
deitoratzen dugu pedofilia,
elizak bereak estaltzen ditu,
edozein epailek espetxeratzen,
atakak gordinki darrai, ordea,
zigorrak ezin du gai hau konpondu,
agian gaixoak izango dira,
psikiatrikoak euren auziak.
Mamutzarrak dira gizonezkoak,
matxismoak dauzka estolda franko,
sexuaren lurra zikintzen dute
haurrei diete xarma lurruntzen,
jendartean dugu sarri galdetzen,
nola dezakegu bortxa hau gaindu?
Feminismoa da ihardespena
haur xaloak libre bizi daitezen.

*2018ko apirilaren 8an*

*726*

**Heriotza zigorrari, “EZ” esan diezaiogun**

1
Heriotza zigorrari
“Ez!!”, diotso zentzuak,
mina hazten duelako
Hamurabi arauak,
maiz ezartzen dute Txinak
ta Estatu Batuak,
ez dezala mana barru
ilunetan izuak.

2
Zigor bidegabekoak
gatibua du hiltzen,
baina kriminala ez da
horregatik kikiltzen,
gorrotoa ez dutenez
jendartean isiltzen,
tinko dituzte heriotz
esparruan amiltzen.

3
Borreroa itxuraz da
psikopata samarra,
boterearentzat sorgor
dagi betebeharra,
patriarkatzari lehor
diezaiogun zuztarra,
desager dadin munduan
ofizio takarra.

4
Jujeek ez dezatela
heriotza agindu,
berdin senide minduek
malezia astindu,
elkartasunaz dezagun
txarkeria erkindu
monarken oinordekotza
etikaz zuzen gaindu.

5
Aldarrikatzen dabiltza
heriotza zigorra,
krimen bat izan delako
zinez arras gogorra,
jendea masa denean
bihurtzen da elkorra,
mendekuak indartzen du
eskuindarren malkorra.

6
Haur baten hilketak ohi du
haserrea hedatzen,
amorruak herritarren
sentiera xaxatzen,
urkamendiak ordea
ez gaitu kontsolatzen,
soilik digu basatiak
garela gogoratzen.

7
Heriotza eskatzea
delako faxismoa,
gizatasunaz dezagun
elikatu gogoa,
ez dadila muga izan
zapalkuntza eroa,
baizik giza eskubide
denen protokoloa.

8
Demokrazia ez dadin
zigor gaitzaz zatartu,
justizia ez dezagun
Balberekin uztartu,
iritzia dezatela
estatuek hitzartu
gatibuari dakion
ontasuna atzartu.

*2018ko apirilaren 15ean*

*727*

**Euskara jalgi hadi dantzara**

1

On Etxepare erretorea
kantari askok ondratu dute,
bere desira sarri dantzugu
doinu ederrez txukun jantzita,
"euskara jalgi hadi plazara"
behenafarrak idatzi zuen,
geroztik ia pasatu dira
bostehun urte gozo-garratzak,

ez dugulako xedea bete
hainbat herritan galdu delako.
Bi estatuek bortizki zuten
txantxangorria kaiolan sartu,
historiak du drama islatzen,
monarken herra garbi salatzen,
forurik gabe hondoratu zen,
gero iraultza frantsesaz mutu,
Franco ankerrak lurpetu zuen,
jakobinoak hankaperatu,
nekez diogu eutsi goiari
geure hizkuntza ontzen darraigu.

2

Ikastolan zen gorpuzten hasi,
herri askotan berriz suspertzen,
euskaltzaleek aupatzen dute
Korrikan helduz lekuko mina,
kulturak maitez laguntzen dio
ez dadin amil ezerezean,
nahiz zinez garen ahalegintzen
lege batzuek zigortzen dute,
hola ezin da mardulik bizi
erdarek ura kentzen diote.
Bere itxura eskasa denez
bihotzak naro erein ditugu,
mihiak oro lora daitezen
lurrinak goza ditzan karrikak,
legeak alde zuzen jarrita
edonon dugu berba egingo,
esan dezagun, "euskara gara
denon etxea lur hau delako",
Etxepareren nahia zer dadin
plazetan haurrek ospa dezaten.

*2018ko apirilaren 15ean*

*728*

**(2017.04.08 - 2018.05.04)**

**Aizkora eta Arbola**

1

Barruan nekez duzu
izaten patxada,
sentitzeko ariman
pozaren taupada,
eskerrak daukagula
aldiro parada,
entzuteko herriko
hurkoen hegada.

2

Zenbat gorabehera
nire animoan,
etsitzen naizenean
hotzaren aroan,
babesa topatzen dut
kideen alboan,
gure herriak zuzen
daraman ildoan.

3
Kinkak darraien arren,
izaten gogorra,
esperantza ez dago
sekula lehorra,
oldozten dudanean
ni ohi naiz baikorra,
auzolana delako
gurean altxorra.

4
Lur jota egon baino
hobe bizinahia,
musua horrela dut
izango alaia,
dir-dir irits dadila
behingoz ostargia,
gure hazkurria den
gutarren egia.

5
Nahiz sarri dagitzagun
bidean akatsak,
guk kemenez darraigu
ematen urratsak,
herra berriz ari da
borratzen oinatzak,
baina ezin dizkigu
ebaki behatzak.

6
Lotu duzuelako
nahieza motzean,
karriketatik kanpo
zoko laiotzean,
esnatzen naizenean
goizik leotzean,
ilusioa dabil
pil-pil bihotzean.

7
Udan dena dakusat
barruan urdina,
neguan zait ordea
gailentzen samina,
herrian dagoenez
ametsen erpina,
hara begira nago
uzteko osina.

8
Egun luzeak dira
duda barik ditxa,
dena dirudi aldiz
laburretan gaitza,
Baionan dutelako
landatu Zuhaitza,
Aizkorak oro digu
onduko bizitza.

*2018ko apirilaren 22an*

*729*

**Maiatzaren Lehenean solidaritatea bakea da**

1
Maiatzaren Lehenean sentierak taupaka
Untzagako giroan pil-pil bihotz gorriak,
ukabilak jasota hasi gara kantuan
“Gudarien” himnoa Internazionalagaz,
“pobrezia gainditu”, kontzientziak diosku,
“langabeen ataka borrokatuz eztitu”.
Zinez gura dugunez konpartitu onura
“Solidaritateaz genezake gauzatu”
Euskal Herri berrian libre bizi gaitezen
bankarien mozkinak sozializa ditzagun,
hazkundea ez dadin izan denon kaltean
prozedurak Ama-Lur zentzuz hobets dezala.

2

Untzagatik manifa jendetsua irten da
jendartea nahi dugu klase barik eraiki,
ikurrinak xedeak gerizatzen dizkigu
krabelinen lurrinak airea du gozatzen,
beharginok natural hitz dagigu euskaraz
samurtasunarena darabilgu munduan.
Kaleetan desirak ari gara ereiten
feminismo morea mardul dadin lilitu,
oligarken zingira oro lehor dezagun
ez gaitezen burgesen gerretan hil muturka,
Maiatzaren Lehena utopia hel dadin
nonahi sustrai dezagun bakearen iraultza.

*2018ko apirilaren 22an*

*730*

**Abauntzagan umeak eta zapaburuak**

1

Abauntzaga partean ezuste bitxia
errekatxo garbian hainbat zapaburu,
ume batzuk han daude eurei begira
jakin barik ze diren izaki zapalak,
igo dira bertara Eibarko kaskotik,
Milaflores auzotik Arrajolan barna.
Jada mende erdi da ordutik pasatu
gu aisian mendira sarri joaten ginen,
igarrita geneukan jakin-min sanoa,
gurasoek atseginez ase ziguten.

2

Anfibio anuru hauen larbak dira
seinalatu ziguten entziklopedian,
sortzez hanka bakoak eta isatsdunak
ziur aski izango dira aporena,
brankiekin arnasa hartzen dutelako
arren, zuek bakean laga itzazue.
Hurrengoan begira miraz egon ginen
ez genuen aporik ikusi, ordea,
aholkua ederki bete genuenez
harrezkero Ama-Lur maitez zaindu dugu.

*2018ko apirilaren 22an*

*731*

## Harrerak eta agurrak ez direlako hobenak

1

E.A.J.et(a) Ahal Dugunen
praktika delako motza,
“epelkeriak diogu”, dakar
“errepresio zorrotza”,
PPren mantra ostera ohi da
bengantzaren harrabotsa,
gure kideen harreren kontra
bota dutenez gorotza,
isil dezagun bortxaren alde
ari direnen ostotsa.

2

Oro gaituzte guardia zibil
harroxkoek asaldatu,
borrokalari maitagarriak
dituztelako hertsatu,
hobena izan da Belen zena
genuela ohoratu,
hola dabiltza gura dutenek
konponketa izorratu,
Euskal Herriak ez ditzan inoiz
bere xedeak gauzatu.

3
PPk ilundu zuen Antxori
egin genion agurra,
Urkulluk eta Barkosek dute
babestu jardun makurra,
ezin diogu eman, ordea,
sentimenduari lurra,
elkarbizitza bilaka dadin
baketzearen gailurra,
ken diezaiogun gorrotoari
sua pizteko egurra.



4
Ahaleginak zakar egiten
ari dira arraioak,
itzul daitezen berriz eurentzat
ziren garai erosoak,
ez dezan irits asmo krudela
pentsamendu sadikoak,
izan gaitezen bakea landuz
artisau igeltseroak,
ez dakizkigun eror altxatzen
ari garen desioak.

5
Kaltetu asko daude geurean
ez dira eurak bakarrak,
Francoren erruz etorri ziren
ekaitzak ta kazkabarrak,
batera tinko itzal ditzagun
samintzen gaituzten garrak,
egiak suntsi ditzan erabat
gezurrontzien piltzarrak,
begiruneaz susper daitezen
geure sentimen iharrak.

6
Eskuindar gaitzen hipokresiak
dakarkigunez tamala,
bakoitzak behar duen moduan
biktimak oroit ditzala,
demokraziak horretarako
bidea eman dezala,
gudazaleek laga dezaten
behingoz lubaki zitala,
zabaldu dadin hesirik gabe
ongiaren lurrazala.

*2018ko apirilaren 29an*

*732*

**(2001.09.08)**

**Iñaki Saez eta Asier Herizen 17. urteurrenean**

1

Kaixo Asier eta Iñaki zintzoak
sua ez da inoiz amatatuko,
zerua ilun zein oskarbi esnatu
zuekin pozarren elkartzen gara,
senti ezazue adore sanoa,
oraingo gazteen samurtasuna.
Irailak zortzi hunkitzeko data
zuen ereduak gogoan dirau,
bihotza musu-truk eskaini zenuten
barrura joateko irribarretsu,
Ama-Lurren baitan ernai zaudetenez
hegoak zaituzte maiz ferekatzen.
Iretargia lez gau argitsuetan
izarrak zuekin mintzatzen dira,
gure sentieran bizi zaretenez
goiztiriak zinez maite ditugu,
zuek bildutako fruitu mardulekin
zertzen ari gara elkarbizitza.

2
Hamazazpi urte joan dira ordutik
Tamalez, ataka ez dugu gaindu,
sakabanaketa maltzurraren erruz
gure bizinahia izoztu baitzen,
tink diotsuegu hautsiko dugula
loratuta giza eskubideak.
Herra ta bengantza urtuko ditugu
ospa dezazuen garai zuzena,
zuentzat zirraraz kantatuko dute
erbestean dauden kideko minak,
dena ari gara jatorki ematen
plazetan libre pausa daitezen.
Oi, gure Iñaki eta Asier duinak
Karakaten gaude zuen aurrean,
atseginez eta grinaz esateko
biziko garela udaberrian,
laster datorrela egun dirdaitsua
merezi duzuen gorazarrea.

*2018ko apirilaren 29an*

*733*
**Plazak hartu**

1
Gogoak esan dit ametsetan,
“plazan zaitezte batzartu”,
eguzkiaren printzekin gero
hunkituta naiz itzartu,
arren, xedeak erdiesteko
behingoz gaitezen ausartu,
preso gaixoen askatasunaz
soak daitezen izartu.



2
Presoak eta iheslariak
itzul daitezen geurera,
aldarazten has gaitezen tinko
bi estatuen jarrera,
zentzuz erabil ditzagun plazak
iraultzeko egoera,
horrela behar diezaiekegu
mendekua baztertzera.

3
Kaleak hartu bizkortu dadin
demokrazia herrena,
euskaldunoi irits dakigun
aukeratzeko orena,
boterearen morroi harroek
senti dezaten eztena,
txoko xumean hur dagoela
zapalkuntzaren azkena.

4
Abaguneak dioskulako
plazetan gara batuko,
auzolanean ez-demokratak
txit ditugu bezatuko,
zuk polizia ez duzu inoiz
ekimena geratuko,
egiarekin Arbolak dizu
sen bortitza sendatuko.

5
Ongizatea lor dezakegu
plazan zintzo mintzatuta,
guztiona den eskubidea
eserita eskatuta,
baitan ditugun bihotz taupadak
batera baliatuta,
gure desira zuzenak ikus
ditzakegu gauzatuta.

6
Plazetan ari gara denontzat
berdintasuna eratzen,
halaber gogoz elkartasuna
ederkiro elikatzen,
inposaketa Euskal Herrian
zinez gabiltza higatzen,
gaur hemen legez segi dezagun
etxe anitza altxatzen.

7
Gaur plazan gara pozarren bildu
dastatzeko goiztiria,
gazte batek du geuri begira
deklamatu agiria,
“topa dezagun ideiak landuz
utopiaren haria,
bake morea egonkortzea
izan dadin emaria”

8
Atzoko plazak borroka ziren,
amnistiaren habeak,
berdin erabat injustiziak
grinaz urtzeko labeak,
laster mardulik haziko dira
atseginaren loreak,
lurrin freskoaz goza ditzaten
joan zirenek ohoreak.

*2018ko maiatzaren 6an*

*734*

**Muńoa Zabaleta eraikinari**

1

“Maite zaitut”, diotsut asaben habia,
zenbat egun zoritsu zure barrenean,
jaiotetxe gogoan maiz agertzen zara
sentiera hegatzen hasten zaidanean,
harremana kartzelak moztu zigun arte
izan zinen atseden eta beharleku.
Heriotza zurekin ezagutu nuen,
bizitzaren azkena negarrez ulertu,
ohean hil zenean amama Tomasa,
berdin gero aitxitxa Roman gizajoa,
harrezkero Gabon gau zoragarrietan
poza eta tristura sentitu nituen.

2

Gurasoak gaixotu ziren denboratik
hiru aldiz ikusi zintudan zaharra,
hamar urte beteko dira joan zirela
horregatik ez gara berriro elkartu,
telefonoz astero deitzen nienean
zu zin-zinez hizpide izaten ohi zinen.
Nik ez dakit zaitudan noizbait ikusiko
zu ahuldu zarela anaiek dioste,
nahiz ni legez ez zaren betiko izango
ametsetan ederki aterpetzen nauzu,
oi, aitxitxa Julian, amama Mariaz
hasi zinen bihurtzen gure ondarea.

*2018ko maiatzaren 6an*

*735*

**Esperantzarekin aurrera darraigu**

1

Esperantza iluntzen zaidanean diot,
“azkenean dena pikutara joan da”,
nahiz ez garen oraindik heldu helmugara
atzo lez aurrera darraigu kantari,
Herri sena gurekin ez da bukatuko
hori joan zirenek ederki zekiten,
horregatik ziguten oinordetzan laga
lurra lilitzeko hamaika balio,
“borroka da bidea”, zintzo zioskuten,
“udaberriak du herria onduko”.

2
Etengabe bizitza borroka delako
geurean plazetan usu egin dugu,
hola gara aritu gu eusten goiari
lur honen arnasak luze iraun dezan.
Taktika bat eskatzen du garai bakoitzak
gaurkoa garbi da eraikuntzarena,
horregatik batera zirraraz diogu,
"konbentzituz dugu ataka gainduko",
gazteei mezua idatzi diegu
zer ditzagun izar gorrien ametsak.

*2018ko maiatzaren 6an*

*736*
**Mola eta Sanjurjo Franco bezain hiltzaileak**

1
Sanjurjo eta Mola
bikote ankerra,
agintzen lortu zuten
hiltzaile masterra,
kamustuta estatu
kolpearen zerra,
ziplo piztu baitzuten
Francorekin gerra.



2
Mola eta Sanjurjo
gizon kriminalak,
Rifen bortxaz eragin
zituzten tamalak,
errepublikan izan
ziren desleialak,
faxismoaren alde
militar petralak.

3
Molaren leloa zen
“gorriak zanpatu”,
eskuindarrekin zuen
ehiza antolatu,
nafar asko zituzten
harro tirokatu,
duintasun barik nonahi
zakar lurperatu.

4
Eurentzat gerra oso
azkar zen amaitu,
patuak zielako
bizitza bahitu,
hegazkinak jausita
ziren net gaizkitu,
gorputzak zitzaizkien
erabat txikitu.

5
Sanjurjo eta Mola
dituzte epaitu,
euren erruz zituzten
asabak kalitu,
udalak herriari
dio obeditu,
zeutzan kriptatik legez
kanporatu ditu.

6
Iruñean udalak
zintzo du jokatu,
demokrazia baita
garbiro mintzatu,
nahiz gogor diren aurre
egiten saiatu,
gaur faxistei die
kripta zigilatu.

7

“Conde Rodezno” plaza
zen iluntasuna,
orain oro iritsi
zaio klartasuna,
izen berriarekin
da askatasuna,
udalak eman dio
biktimen tasuna.

8

Mola eta Sanjurjo
ziren galzoria,
herraren sinboloa
gorri ta horia,
euren biktimak berriz
dira memoria,
dastatzen dute gure
maitasun joria.

*2018ko maiatzaren 13an*

*737*

**Asabak gurekin bizi dira**

1

Joan ziren senide maitagarriak,
asabak dira bilakatu,
eskaini ziguten samurtasuna,
zorionaren esentzia,
nortasuna zertzen joango zitzaigun
arnastuz euren atsegina.
Gurasoek eta hurko xaloek
gozoro hezi gintuzten,
oroitzen ditugu aholku onak,
ibil gintezen jausi barik,
trebe jos genitzan hartu-emanak
sorlekuaren ibarrean.
Sukaldean jakin genuen zer den
herriko xarma sentitzea,
ordutik bihotzez zaindu ditugu
euskara eta izadia,
euskaldun eleak geroan mardul
jarraitu dezan jendartean.

2

Etxean zintzoki ohi zizkiguten
kontatu euren iraganak,
bizipen ederrak eta eskasak,
barreak eta etsipenak,
ezagutu zuten gerra makurra,
elkartasuna diktaduran.
Zirriekin ziren maiteki batu,
haurrekin gero liluratu,
izan zirelako gaur egun dira,
gurekin bizi direlako,
arren, garunean ez daitezela
euren aztarnak ezereztu.
Gu bihar lez, dautza Ama-Lurrean,
ihintzak ditu iratzartzen,
amets gardenetan kulunka dute
gurekin bare hitz egiten,
asabek digute sentimendua
zuzen gidatzen pilpiraka.

*2018ko maiatzaren 13an*

*738*

**(2018.04.25)**

**Ebakuntza I**

1

Gizakiak zein ahulak
garen dut baieztatu,
ebakuntza egiteko
nautenean prestatu,
une horretan kinkak dit
gogoa ezeztatu,
komisaldegian lez nau
izuak deuseztatu.

2

Ebakuntza bukatu da
gora anestesia!!
Bi zirujauei esker
gainditu dut hesia,
guretzat helduko denez
askatzeko garaia,
sasoia ontzeko izan
dezadala kuraia.

3
Ospitalean ohi legez,
bikain naute tratatu,
ebakuntzan ez zitzaidan
txingarra amatatu,
zirujauek dutelako
lanbidea ondratu,
enarekin habiara
ahalko dut migratu.

4
Izterrondoko etenak
ez dirudi larria,
ebakuntzaren ajea
aldiz da mingarria,
ondoeza sentitzen dut
gorputzean nagia,
saminez ari delako
kexatzen haragia.

5
Arimak nabaritzen du
oro sufrimendua,
horregatik mintzatu da
nire sentimendua,
minaz diost, “lant dezagun
munduaren ortua”,
“oasi bilaka dadin
haur txiroen mortua”

6

Minez dagoenak gura
du zoriontasuna,
egoismoaren ordez
naro elkartasuna,
gerrak deseginda lora
dadila maitasuna,
feministek nonahi duten
ereiten ontasuna.

7
Nahiz ebakuntzan zitzaidan
bizigura izurtu,
animoa poliki zait
berriz ere hezurtu,
gogapen txarrak nahi ditut
barruan ziegan lurtu,
gizatasunak diezadan
nortasuna elurtu.

8
Gorputzak irmoki diost,
"zu zara suspertuko",
"lasaitu zaitez ez baita
patua okertuko",
"hurkoek eta laztanak
dituzte eskertuko,
Arraten eurekin zaizu
bizitza edertuko"

*2018ko maiatzaren 20an*

*739*
**(2018.04.25) Ebakuntza II**

1
Mina duzunean biziki sentitzen
bizigura zaizu ilunki estaltzen,
hola nago ziegan isolamenduan
ebakuntza egin eta orduz gero,
aste bat daramat txarto lo egiten
iztartean dudan zauria sufritzen.
Tamalez erraia noizbait atera zen
umetan lez eskuin aldean berriro,
nahiz ahuldu naizen traumaren ondoren
gure herriaren berriak darraizkit,
Erakundearen erabakiak dit
min sorra tarteka egoki gozatzen.
Gazte sentimental duinek sortu zuten
diktadura eta Franco haizatzeko,
gaurko belaunaldi jantziak diosku
desegingo dela herrian urtzeko,
ziklo berri baten atarian gaude
grinaz sar gaitezen libre bizitzeko.

2
Erakundearen azken agiria
Genevan ta Kanbon goraipatu dute,
Urkullu ta Barkos zintzo daitezela
aldapa batera gainditu dezagun,
bihar Euskal Herri anitz ederrean
asaben ametsak lorezta daitezen.
Arnagan usaindu dute atsegina
Aizkora bikainki sustraitu delako,
Arbola egia eta bakea da
bere gerizpean batzartuko gara,
fruituak naroro emango dizkigu
elkarbizitza txit elika dezagun.
Zorionez grapak kendu dizkidate
kinka ondu dela nabari dezaket,
ez delako gure borroka idortu,
esperik gabeko data hur dakusat,
gaur deklaratu dut nire sentiera
osasunez batu gaitezen laztana.

*2018ko maiatzaren 20an*

*740*
## “Abian” hasi ginelako

1
Paper batean edozer gauza
dezakezu inprimatu,
hola idea aurrerakoiak
ditzakezu plazaratu,
baina herrenak izango dira
ezin badira gauzatu,
une horretan beharko duzu
eztabaida abiatu.



2
“Akatsekin dut arima hezten”,
esan zuen adituak,
praktika ari gara biluzten
ezagutzeko erruak,
arren, apalak izan gaitezen
lagun diezagun zentzuak,
auzolanean blaitu ditzagun
eskubideen zoruak.

3
Podemos eta Katalunia
omen dira ereduak,
gai nazionalek eta sozialek
eman ditzaten fruituak,
gogotsu ari gara ikasten
ez garelako kaikuak,
herrietatik ta ezkerretik
janzten ditugu buruak.

4
Kendu ziguten askatasuna
gabiltza egituratzen,
ongizatea berriz aldiro
kemenez aldarrikatzen,
gaur bertan bizi garenok
herria dugu osatzen,
ondo biziko gara badugu
guk eremua goldatzen.

5

Bizilagunak baloreekin
nahi ditugu konbentzitu,
eurenak entzun eta aztertuz
hartu-emanak joritu,
gizatasunaz elkarbizitza
dezakegu ongarritu,
berdin biktima, mermoria ta
egiarekin eztitu.

6

Borrokan gara luze aritu
eusten musu-truk goiari,
gogoak, “ekin”, diosku, “beste
era batean borrokari”,
lehen bezala begira gaude
nahi dugun helburuari,
orain gabiltza ordea dena
ematen eraikuntzari.

7
Gure ametsen etorkizunaz
ginen jatorki mintzatu,
jendartea on dadin genuen
ekimena sukaldatu,
zintzo ditugu geure aldaxka
askatzaileak hedatu,
herritarrekin ditzagun gero
Euskal Herrian landatu.

8
“Abian” zutik esan genuen
noizbait bildu ginenean,
ezin delako denbora galdu
lur jota etsipenean,
kinka ondu da Erakundea
gugan sustraitu denean,
laster taupaka sartuko gara
harreren plazen barnean.

*2018ko maiatzaren 27an*

*741*

**Kordoban nago**

1

Kordoba zoritik urruti dago
zortziehunen bat kilometrora,
nahiz tamalez kinka mingarria den
sentierak xarma hurreratzen dit,
lurraldera maiz naiz letrekin joaten
gerora jin dadin elkartasuna.
Amesten dakusat lili xaloa,
atseginez dantzut ahots polita,
maitasunak gaitu sendoki batzen
sugarra arduraz mantentzen dugu.

2

Zortzirehun zero bilakatzen da
esperantzak blaitzen zaituenean,
ziegan duzunean arras sumatzen
zuzen hasi dela ziklo berria,
hur dagoelako askatasuna
udaberriaren aro mardula.
Nahiz noizbehinka naizen atsekabetzen
musua aspaldi piztu zitzaidan,
laket zaidalako jaioterria
berdin bizigura den zitoria.

*2018ko maiatzaren 27an*

*742*

## Terapia damuak uxatzeko

1

Nik azken hatsa dut noizbait emango
lehena hartu nuelako,
bien bitartean jarraituko dut
oroitzan batzen bizipenak,
iragana ezin dudanez ondu
oraina ari naiz zuzentzen,
gero atsegina senti dezadan
zauri saminak orbainduta.
Ez dut nahi munduan etsita bizi
sarri sufritzen kontzientzia,
tinko jardungo naiz bizkortu dadin
osasuna den bizinahia,
terapia gisa hoberena da
zintzo lantzea enpatia,
etikaz eroso irits naiteke
samurtasuna laztantzera.

2
Zentzu onak diost garbi aldiro,
“sasidi gaitzak motz itzazu”,
ez daitezen gerta berriz erruak
ohiturak ditut aldatuko,
egoismoak dit bihotza mintzen
sakon tristatzen sentiera,
arima gaixoa senda dezaket
joera txarra uxatuta.
Matxismoa behingoz zokoratuta
dastatuko dut zoriona,
feminismoaren zeru morean
gizatasunak jantziko nau,
orain hel naiteke damurik gabe
heriotzaren atarira,
gure Ama-Lur lez udaberrian
adoretuta esnatu naiz.

*2018ko maiatzaren 27an*

*743*

**(2018.05.03)**

**Erakundeak azken urratsa eman du**

1

Aietetik iritsi
gara Arnagara,
gatazka konpon dadin
erdiko mugara,
gogoak hegan doaz
erbesteetara,
berdin hurkoak dautzan
izadietara.



2

Maiatzean desegin
da Erakundea,
Kanbon egiaztatu
dute albistea,
erabiliko dugu
kemenez elea,
geurea izan dadin
herri lokabea.

3
Maiatzaren hiruan
entzun zen urratsa,
kide askok musu-truk
eman dute hatsa,
Erakundea joan da
hustuta laratza,
euskal memoriak du
gordeko oinatza.

4
Erakundea baita
historian sartu,
eragindako mina
zinez du onartu,
minduta daudenekin
gaitezen batzartu,
halaber begirunez
zauriez ohartu.

5
Ia sei hamarkada
zutela zeratu,
gazte arduratsuek
beharrez eratu,
herrian sortuta zen
erraz aireratu,
orain berriz da bere
baitan barneratu.

6
Ataka aztertuta
eman du pausoa,
denok laga dezagun
saminen zokoa,
kideek hartu dute
ebatzi zintzoa,
deseginda zuzenki
bukatu zikloa.

7
Elkarbizitza oso
nahi dugu ongitu,
harremanak plazetan
daitezen eztitu,
enpatiaz ditzagun
hesiak gainditu,
joan zirenak ondratuz
arimak arraitu.

8
Arnaga, Aiete lez
dugu oroituko,
ortzadarrak, ekaitza
baitu garaituko,
oinez darraigulako
gara hunkituko,
oro ditugulako
nahiak mamituko.

*2018ko ekainaren 3an*

*744*

**(1930.05.14 - 2018.05.08)**

**Giraukiko Felix zenari**

1

Ordua zelako gugandik joan zara
arimak gehiegi jasan duelako,
gaixorik luzaro egon zarelako,
arras zaizulako hauspoa erkindu.
Azken hatsa duzu maitasunez eman
bizitza delako opari bikain bat,

hurkoek horixe pentsa dezagula
negarra, barrea bilaka dakigun.
Elgeta sanoan munduratu zinen
Eguarbitsa eta Intxorta artean,
Francok gerra zizun ekarri herrira
beste umeak lez goibeldu bazinen.
Lanari beharrez ekingo zenion
atakari aurre tinko egiteko,
zizak izan ziren aisian irrika
multzoka non zeuden ikasi zenuen.

2

Atseginez zinen maiteaz ezkondu
osatzeko gero ederki sendia,
alaba zuretzat altxorra izan zen
algara artean sorgintzen zintuen.
Goitik Eibarrera jaitsiko zineten
habiaren alde lan egin zenuten,
ohi den lez, musua zimurtu zitzaizun
bizinahiak iraun baitzuen ordea.
Ama-Lurren baitan biziko zarenez
asaben arbola mardul haziko da,
eguzkiak beste zainduko zaitugu
zure abaroan eseri gaitezen.
Maiatzetan gara zirraraz batuko,
hostoak ditugu leun laztanduko,
txoriek zaituzte txor-txor omenduko
loreek dizute zola apainduko.

*2018ko ekainaren 3an*

*745*

**(1985.11.26)**

## Mikel Zabaltza Garate zenari

1

Zabaltza ez baitzen Bidasoan ito,
tortura salbaien eraginez baizik,
nahiz gorpua zuten Endarlatsan jaso
baitan zuen ura kasernakoa zen,
garbiro genuen karriketan esan,
"ez du salto egin Mikelek ibaira",
geroztik joan dira hiru hamarkada
ez baitu hilketa zuzentzak argitu.
Intxaurrondo zinez beldurgarria da
hamaika pairamen itzelen zokoa,
inpunitateak agintzen duenez
bortxa horrek gaitu gogor azpiratu,
guardia zibilak hitz egingo balu
senak lirateke dar-dar izutuko,
orduko ta gaurko autoritateen
musu zinikoak bor-bor gorrituko.

2

Rodriguez Galindo buruzagia zen,
ozen genituen torturak salatu,
Zabaltza orduan atxilotu zuten,
baineran murgildu kupidarik gabe,
hor nonbait denbora ez zutenez zaindu
psikopata hutsen erruz zendu baitzen,
bengantzak zituen gidatzen ankerrak
krimena saiatu ziren ezkutatzen.
Mikel, nahiz zintuzten desagertarazi
asmoa irmoki desegin genien,
Aezkoan zaude sorleku maitean,
Orbaitzetan, Ana Lurraren altzoan,
Maiatzak liliak eskaintzen dizkizu,
gure sentierak aire politenak,
ekiak, ihintzak lez laztantzen zaitu,
denon oroimenak zirraraz ondratzen.

*2018ko ekainaren 10ean*

*746*

## Madarikatuen zergaren kontra

1

"Zerga" izena baitu
azken mendekuak,
zera berdeak dira
madarikatuak,
juje batek dizkie
eman aginduak,
izan daitezen espe
ohiak behartsuak



2

Zerga izan dadila
zertzeko onura,
eta ez xaxatzeko
zoroki malura,
gaizkia ohi delako
bortxaren natura,
ongiaz jos dezagun
bakearen gura.

3
“Zerga” umeak ari
baitira ordaintzen,
nahitaezko bidaiek
dituzte mirrintzen,
zorionez ez zaie
desira erkintzen,
maitasuna musu-truk
digute eskaintzen.

4
Sakabanaketak du
sendia zimurtzen,
hurko minei die
dirua lapurtzen,
geuri ostera, gaitu
estresak egurtzen,
deserrietan zaigu
bihotza uzkurtzen.

5
Guda zaleak dio
dela garailea,
herria baita ordea,
beti galtzailea,
denontzat eskubide
denak da alea,
herrian galdegiten
dugun zekalea.

6
Kideak ari dira
isuna pairatzen,
dizkiete kotxeak,
etxeak... altxatzen
ea torturen zorra
dieten kitatzen,
isolamenduaren
nekea pagatzen.

7
Espe ohien atakak
dirudi simaurra,
“zerga”z jango baitute
beharrez ezkurra,
elkartasunez eman
diezaiegun hurra,
eurentzat izan dadin
bizitza samurra,

8
“Zerga”ren kontra plazan
tink gaitezen batu,
auzolana dezagun
zintzo praktikatu,
preso ohiak kemenez
ditzagun aupatu,
Euskal Herria dadin
oskarbi esnatu.

*2018ko ekainaren 10ean*

*747*

## Lauhazka goaz basamortutik oasira

1

Espetxealdia bizitza legez
lauhazka doa pausu barik,
goiz gardenetan dut filosofatzen
galeriaren etxartean,
lehen Kalamuan aritzen nintzen
dastatzen lasai ikusmira,
orain hur dauzkadan hormak dakuskit
zeru motzaren lau hegiak.
Isolamenduan nagoen arren
gogoa dago hemendik at,
hegazka joaten da Ama-Lurrera,
sentieraren iturrira,
pairatutakoa ahaztu barik
irudikatzen dut geroa,
musuan daramat ilusio bat
irria non-nahi sustatzeko.

2
“Ibili ondoren basamortuan
gertu daukagu oasia”,
lainoki diotset kide minei
ziklo berrian gaudelako,
bizkortuko dugu elkartasuna
ongizatea hobe dadin,
ezagut dezagun berpizkundea,
askatasuna lurraldean.
Esparrua leku lehor bat denez
asetzen gaitu maitasunak,
poza dakarkigu hurkoen martxak
Arnagan zintzo batu ziren,
bedatseak digu oparituko
ostu ziguten bizinahia,
zirraraz blaituta ikus ditzagun
horma bako gau izartsuak.

*2018ko ekainaren 17an*

*748*

## Ongia krudelkeria uxatzeko

1

Utopiak noizbait oneratu gaitzan
indartu dezagun samurtasuna,
ez dezan kalean inork lorik egin,
ez ditzan gaizkiak irain txiroak.
Hainbat bihozgabe noizbehinka biltzen da
aterpe gabeak izorratzeko,
ezberdina dena umiliatzeko
ergelki hauspotuz krudelkeria,
jokaera denez ikaragarria
arrazista hutsak beza ditzagun.

2

Giza izaera arras susper dadin
zergekin txiroak babes ditzagun,
ez daitezen ibil dirua eskatzen
zereginak eskain diezazkiegun.
Gure giltza izan dadila zuzentza
askatzeko giza eskubideak,
herra gera dadin eremurik gabe
birzikla dezagun pentsamendua,
utopia dugu naroro ereingo
ongiaren uztak elika gaitzan.

*2018ko ekainaren 17an*

*749*

**Aurpegi muzinak alai daitezen**

1
Hoberena izango da
bertso bat idaztea,
sentiera sorgorrari
enpatia piztea,
kemenez, esperantzari
ekintzekin eustea,
bortxaren zauri sakonak
begirunez jostea.



2
Lehen adina dugunez
aurpegia muzina,
gatazka lurtzea zaigu
iruditzen ezina,
isiltzen ari garenez
bengantzaren bozina,
herra barik elkartzeko
egingo dugu zina.

3
Zintzoki gain dezakegu
egoera eskasa,
urrun jarrai ez dezagun
bakoitzak bere kasa,
galtzaile-garaile barik
izango da erraza,
gizatasuna ez dugu
ikusiko narrasa.

4
Estatuen jokaerak
dakarrelako gaitza,
geurean hobesten dugu
elearen haritza,
joan dadila hemendik at
faxismoaren sitsa,
biktimen oroitzapena
ez dadin gera hitsa.

5
Biktimen oroitarria
zertuko dugulako,
batera gaur baino hobe
biziko garelako,
giza eskubideak nahi
ditugu denontzako,
batik bat etorkizuna
diren umeentzako.

6
Ez diegu nahi izana
biktimei ugertu,
baizik duintasunez euren
irudia edertu,
elkarbizitza zitzaigun
baitezpada lehertu,
konponketa marraztuta
ia dugu suspertu.

7
Presoak, iheslariak...
ditugu artatuko,
borrokak eragin dien
kaltea gozatuko,
askatasun hitzaz dugu
herria sendatuko,
krabelinen zelaia da
dotore loratuko.

8
Egiaz omen ditzagun
lurraldean biktimak,
bil gaitezen egiteko
bakearen errimak,
behingoz erabat daitezen
oneratu arimak,
bihotzetik senti ditzaten
joan zirenen kilimak.

*2018ko ekainaren 17an*

*750*
**Egia ezagut dezagun**

1
Ez zetozenez bat gure ideiak
pipertu ginen harainegun,
hitz egin genuen Euskal Herriaz,
askatasunaz, ele minaz....
orain dela mende erdi adina
gatazka ohi da mintzagaia,
ez-demokratekin talka dagigu
erabaki nahi dugulako,
ez dezagun ikus abagunea
jakobinoen begiekin.

2
Txabik, Argalak lez garbi zioen,
“Gu, Euskal Herri langilea”,
sorlekua bertan zein urrun egon
denona dela gure lurra,
abertzaleak ta ezkertiarrak
ginela esan zuten ere,
gu izango gara zalantza barik,
dena duguna hautatuko,
gidatu gaitzala izar gorriak
izan gaitezen lokabeak.

3
Gure Esku Dagok zintzoki dio,
anitza dela eremua,
hamaika kolorez giza katea
zertzea dela helburua,
horixe diotsut modu onean
uler dezazun deialdia,
bestalde gaizkia jasan duenak
ez du nahi inor zokoratu,
baizik zola landu auzolanean
ongiak gaitzan ferekatu.

4
Euskara dugunez denok jakingo
nongura dugu hitz egingo,
geure belaunaldi gazte prestuak
izango dira poliglotak,
gizatasunaren xarma sustraituz
biziko gara muga barik,
herria garenez samurtasunak
elkartasuna onduko du,
laztana egia maitez diotsut
dasta dezagun zoriona.

*2018ko ekainaren 24an*

*751*

**60. urtebetetze eguna**

1
Maiatzak lau, joan naiz
Arnaga etxera,
hirurogei urteko
zilkloa ixtera,
laster nik beteko dut
kopuru berbera,
hurko duinei diet
egingo harrera.



2
Maiatzak hemezortzi
ohi lez dut ospatu,
kideekin eguna
nolabait gozatu,
egunsentian naute
txoriek esnatu,
Eibarrekin pozik naiz
gero akordatu.

3
Berrogeitik iritsi
naiz hirurogeira,
gaztarotik adindun
baikorren sasoira,
ziegan ez zaidalako
agortu desira,
musuan islatu zait
herriko distira.

4
Udaberrian jaio
nintzen liliekin,
maiatzean hain zuzen
egun argiekin,
sarritan oroitzen naiz
atsegin haiekin,
jasotako fereka
gustagarriekin.

5
Ja hirurogei urte
bidea urratzen,
ametsak eta nahiak
grinaz elikatzen,
aritzen naizenean
euskaraz mintzatzen,
sentiera polito
baitzait oneratzen.

6

Sei hamarkada ditut
munduan dastatu,
une txarrak ta onak
gogoan ziztatu,
kartzelak bizigura
zidan deuseztatu,
maitasunak berriz dit
bihotza sustatu.

7
Fotoa behatuz zait
arnasa bizitu,
askatasunak oro
sorginduko gaitu,
maiatzean urteak
ditugu konplitu,
zurekin gura nuke
bizitza ongitu.

8
Hirurogei zirrara
horrenbeste gezi,
denboran zehar nik dut
nortasuna hezi,
zin-zinez dugulako
zoria merezi,
batera jango dugu
hamaika gerezi.

*2018ko ekainaren 24an*

*752*
**Kongoko Errepublika Demokratikoan**

1
Kongo ibaiaren hegietatik at
gizaki txiroak lur aberatsetan,
nahiz aspaldian den kolonia ohi bat
Bruselak zuzentzen du ekonomia,
lehen Leopoldo II.a zenak
Zairen lehengaiak ustiatu zituen,
hizkuntza frantsesa inposatu zuen
bere mende bizi zitezen jendeak.
Gu txolintzen gara segapotoekin
berriena zoro desiratzen dugu,
koltan minerala tresnen bihotza da
Kongok zolan mehatz hoberenak dauzka,
beharrean haurrak aritzen direnez
bizitza erabat izorratzen zaie,
berekoikeria sufritzen dutenez
geure zoria da euren miseria.

2

Etnien arteko bortxa piztu zuten,
multinazionalek izua eragin,
bortitzenak dira koltanaz jabetu
ongizatea da eremuan galdu,
bortxaketak ziren gerrarekin hazi,
ankerrek neskatxak zanpatzen dituzte,
Afrikaz zekenki ahaztu garenez
lehengo Zaire da odolez gorritu.
Bonoboak legez jardungo bagina,
nonahi ginateke biziko bakean,
behingoz litzateke mundua onduko
dramak saihestuta, penak iraungita...,
Kongo ederrari lagun diezaiogun
andrazkoak, haurrak... erail ez ditzaten,
koltana onura soilik izan dadin
oasi naroa konparti dezaten.

*2018ko uztailaren 1ean*

*753*

**(2018.06.02)**

**Iruñean bihozgabeen manifa**

1
Esparza, Beltran… zuek
zarete maltzurrak,
Sanz ta Barcina beste
erabat makurrak,
saldu dituzuenez
urtetan gezurrak,
euskarak nekez ditu
ferekatzen haurrak.



2
Zergatik nahi duzue
lurpetu euskara?
Zentzuak zuekin du
sentitu ikara,
harrotuta zarete
irten karrikara,
gaur manifan duzue
etnoziden kara.

3
Euskara diozue
dela diktadura,
elebakarra mintzen
duen hanpadura,
diglosiaz handi ez
dakigun herstura,
zertuko dugu zuen
herraren haustura.

4
Euskara mespretxatzen
du zuen fobiak,
net ez-demokrata den
ideologiak,
dirudi zaretela
Francoren bikiak,
eskola frankistaren
maisu basatiak.

5
UPN, euskara
zen denon izarra,
Nafarroa izenak
bertan du zuztarra,
zure portaera da
ordea oldarra,
bilakatu nahi duzu
altxorra zakarra.

6

Lingua Navarrorum
ohi zioten deitu,
euskara lur hauetan
noizbait zen sustraitu,
nahiz zuk zehatz dakizun
zutela eritu,
ez duzu ele mina
inoiz defenditu.

7
Zuretzat euskara da
barrika ustela,
zuk maite duzu beste
hizkuntzen upela,
bere kontra jardunda
zu zara ergela,
patrika duzulako
hobesten krudela.

8
Kanpion, Iturralde....
balira piztuko,
UPN zuketen
madarikatuko,
auzolanean denez
fruitua helduko,
euskarak oso ditu
haurrak sorginduko.

*2018ko uztailaren 1ean*

*754*

**(1973.09.11 - 1973.09.15) Victor Jarari. Aitzol zena gogoan**

1
“Eskubide osoa bizitzeko bakean”,
Victor Jara zintzoak esan zuen kantatzen,
estatubatuarrak sartu ziren Vietnamen,
ja joan dira ia sei hamarkada geroztik,
Indotxina napalmaz arras zuten kiskali,
komunistak hiltzeko, oligarkak zaintzeko,

txiletarrak tink zuen suntsiketa salatu
zin-zinetan bizitza handiena delako.
Zentzu onez mundua oneratu nahi zuen
musikatuz gitarraz gogoaren mezuak,
boterea berbekin gaztigatzen zuenez,
bankariek, faxistek... azpiratu nahi zuten,
beharginen aldeko, patroi txarren kontrako,
“aberatsen fortunak denontzako” zioen,
berarekin Txileko herria bat zetorren
jendarteko sakana itxi behar zelako.

2

Berrogeita bost urte aurten dira beteko
Pinochetek arimak zituela izutu,
Allenderen iraultza demokrata zelako
Washingtonek net zuen diktadura sustatu,
Victor Jara ei zuten Santiagon atzeman,
“Chile” kirol zelaian preso sartu amorruz,
Barrientosen aginduz brigada joan zitzaion
ez zezan jo berriro hatzak hautsi zizkion.
Faxistek ez dutenez menderatzen kultura
artistak jo puntuan izaten ohi dituzte,
soldaduek tiroka zuten duina erailgo
ez genitzan oroitzan gorde bere doinuak,
Aitzol zeuri frankistek Hernanin hil aurretik
Ondarretan erauzi zizkizuten begiak,
Victorrekin bertsotan irudika zaitzaket
herri denak bakean libre bizi gaitezen.

*2018ko uztailaren 8an*

*755*
**Elkarbizitza ostadarra da**

1
Txarto egon zen Francok
bultzatu zuena,
gerraz hasi zelako
jasan dugun dena,
hel dadila gizaki
zintzoen orena,
bizikidetzak izan
dezan ahalmena



2
Bortxak gogor dizkigu
estutzen bihotzak,
oroitzan mardul daude
biktimen hostotzak,
gogoak bemazkigu
aholku zorrotzak,
ekiak bero ditzan
sukalde laiotzak.

3
Eskuindarrak dabiltza
gatazka luzatzen,
herra erabilita
desirak trabatzen,
gu, ebazteko ari
gara borrokatzen,
helburu dirdaitsuak
plazetan islatzen.

4
Gatazkaren txingarrak
daitezen ahitu,
ez dezala inortxok
bengantza bizitu,
enpatiaz ditzagun
zauriak garbitu,
nork dezan bere minen
txokoa beztitu.

5
Margotzen ari gara
nonahi ostadarrak,
halaber ezabatzen
tximista kaskarrak,
kaltetuak dituzte
gainduko negarrak,
joan zirenek piztuko
ortzian izarrak.

6

Kaltetuek ditzaten
goza goiztiriak,
geure mihian agin
dezala egiak,
sentimenduan gorde
ditzagun izpiak,
ez daitezen inoiz gal
biktimen irriak.

7
Erakundeak zuen
borroka finitu,
armak laga zizkigun
genitzan ezgaitu,
orain berriz herrian
urtuz da sustraitu,
esperantzak geurean
daitezen lilitu.

8
Bakea ari gara
zinez eraikitzen,
ezlekuetan zentzuz
aldiro mugitzen,
eragindako minaz
garenez hunkitzen,
kaltetu duinen soa
hasi da argitzen.

*2018ko uztailaren 8an*

*756*

**Enarak askatasuna direlako**

1

Enarak ehizatzen trebe dabiltza
jiraka zeru oskarbian,
otsailean berriz itzuli ziren
udaberria sumatuta,
isolamenduan hormen barnetik
begira gaude sorginduta.
Habiak dauzkate iaz bezala
txukun landuta erruteko,
bizitzaren alde arrautza txikiak
luze dituzte txitatuko,
kumeak kartzelan izaten dira
bizinahiaren irudia.

2

Kartzelak hor nonbait gura duenez
enarak bizkor uxatzea,
liezazkiekete suntsi habiak
zirin orbanak saihesteko,
xedea oraingoz ez dute bete,
eltxoak luke sinatuko.
Aro joriaren hegalariak
bakean laga ditzatela,
hemen direlako askatasuna
maitasunaren oihartzuna,
gure Ama-Lurren mezulariak
iragartzeko zoriona.

*2018ko uztailaren 15ean*

*757*

**(1969.08.15 - 18)**

**Woodstoock-en hondatu zena**

1

“Woodstook” jaialdian lorea ikurra,
maitasuna eta bakea xedeak,
nahiz hippyak ziren erabat lohitu
ez zituzten euri tantanak sentitu,
LSD-a naroro zeukaten
zelaian adina oholtza gainean.
Haluzinatuta azidoarekin
paradisuaren bila joan ei ziren,
ahaztuko zuten iraultza, ordea,
kapitalismoak lasai jarrai zezan,
erorita drogaz blai kontsumismoan
makina bat sendun pasota egin zen.

2

Alkoholaren zein drogaren mendean
jendartea nekez hobetuko dugu,
ia korde barik oheratzen dena
ez da esnatuko libre bedatsean,
Janes Joplin, Jimi Hendrix, Jin Morrison...
gaztaroan hemen asko lez hil ziren,
Woodstoock-en ez zuten gerra gerarazi
vietnamdarrei esker gertatu zen,
hippyen iraultza sustatzeko asmoz
guk elkartasuna irentsiko dugu,
maitasuna izan dadin feminista,
bakeak mundua lorez jantz diezagun.

*2018ko uztailaren 15ean*

*758*

## Herriok gura dugun Europa

1
Estatu bako mundua
irten zaitez argira
herriak mugi gaitezen
urdinetik gorrira,
utopia iezaguzu
opa zure pilpira,
zuzentzak ekar diezagun
ostadarra ortzira.



2
Estatuek lurra laga
dutelako gazia,
herriok zutik eskatzen
dugu demokrazia,
Europan naro ereinda
ongiaren hazia,
bihur genezake pinu
iharra akazia.

3
Faxistak aniztasuna
dauka mehatxatuta,
estatu-arrazoi gaitzaz
bizitza kutsatuta,
herriok, aldiz, diogu
eskutik oratuta,
“Hizkuntzak eta kulturak
Europan ondratuta”.

4
Europak ez dezan jasan
faxismoaren mina,
bakea ez dadin izan
lehen legez ezina,
guk diogu, “gerrarik ez!!”,
zuzentzeko oraina,
ondasunak konpartituz
ontzeko atsegina.

5
Estatu bortitzen ordez
herrien auzolana,
gure xedea delako
indartu harremana,
botereari daukagu
karriketan esana,
egoisten aldekoa
dela bere afana.

6

Herrien nahia da mezu
moreak landatzea,
nornahik senti dezan dela
denona baratzea,
mundua nahi dute ere
maitez elikatzea,
eta ez ankerki osten
jardunda xurgatzea.

7
Europatik at uzteko
estatuen lobbya,
hets dezagun herrientzat
egin zuten hobia,
euren arau ilegalak
ditzagun irabia,
nork denon basoan txukun
dezan bere habia.

8
Gu gara zure izarrak
zarelako zerua,
halaber guk iruteko
behar dugun gorua,
Europa jatorki izan
zaitez iturburua,
elkartasunaz dezagun
berda mundu larua.

*2018ko uztailaren 15ean*

*759*
## (2018.06.26) Altsasuko guraso duinei

1
Erasoa gordinki ailegatu zenean
etxekoek izua sakon zuten sentitu,
zoritxarrez, Altsasun herritarrek dakite
justizia ez dela denontzako zuzena,
gu guardia zibilen mende bizi garenez
gaztediak larrutik pagatzen du ardura.
Euskaldunok oro har aspalditik dakigu
etsai-lege ankerra digutela ezartzen,
konpromiso mardulak zimeltzeko asmotan
botereak bortxa du faxistaki astintzen,
tabernako ustezko gertaera eskasak
baliatu zituzten zigortzeko gazteak.
Gurasoek arima opa dute ordutik
preso dauden bihotzak libre laga ditzaten,
adoretsu dituzte kontzientziak goldatu
lurraldean egiak garai dezan gezurra,
mendekuaz ez dadin leher euren bizitza
elkartasun samurra emendatzen dabiltza.

2

“Ia une berean epaileak gaiztoki”,
guk garbiro diogu adituta epaiak,
nahiz neskatxa harroki Iruñean bortxatu
“manada” den samalda trostan dabil Sevillan,
Altsasuko gazteak, aldiz, daude barruan
ametsetan dirdaitsu dakusate etxea.
Gatazkaren basatza hobesten ohi duenez
estatuak lehen lez ez du gura bakerik,
zorionez ez daude soilik gazte maiteak
oro dute arnasten herritarren epela,
etxartean dituzte esperantzak aletzen
iruditzuz kartzela barik Euskal Herria.
Iruñea gainezka, karriketan desira,
“Sakanako haizeak laztanduko zaituzte”,
zentzudunek diote, “gazteak gaur gu gara
zeru beltza geurean egingo da oskorri”,
Altsasuko sendiak duintasuna zarete,
ederkiro duzue abaroa ehundu.

*2018ko uztailaren 22an*

*760*
**Kordobako ortu ñimiñoa**

1
Murrua eta zolaren
artean zirrikitua,
bitarte ñimiñoa da
liluraren itua,
nork bertan hobetzat dauka
beraren aburua,
bihiek dute, ordea,
edertzen ingurua.



2
Ortuan darabilzkigu
maitasuna ta ura,
landareak mardul hazten
eskertzen du ardura,
kideak aisian gaude
oasian gustura
ziegetatik ateratzen
gara paradisura.

3
Landareak ikusita
bertsotan hasten gara,
mukuru betetzen dugu
desioen otzara,
nahiz ortua estua den
guretzat da zirrara,
zu izaten zaren beste
bedatsean enara.

4
Espezain motzak duenez
ortua gorrotatzen,
behin batean landareak
hasi zen izorratzen,
kemenak dituelako
gizatxarrak bezatzen,
aurten fruitu bereziak
ari gara dastatzen.

5
Aldiro diogu dela
Ama-Lur oparoa,
ortuan egin duena
delako magikoa
eguzkiak burutu du
betebehar sanoa,
kerizpeak oparitu
giro gozo freskoa.

6

Landareak naro ditu
loratu piperminak,
oso biziak direla
dio nire mingainak,
ortugintzan direlako
gaituak ortuzainak,
etxartean dizkigute
ekoizten atseginak.

7
Ortua txikia denez
ez da hazi meloia,
erromeroak, aldiz, du
erdietsi sasoia,
hau hobetsiz gaitzesten dut
isolamendu lohia,
piperminarekin dugu
gaindituko maratoia.

8
Ortu xumea, kideok
zaitugu ondratuko,
askamena dugunean
bazkaltzen ospatuko,
baba gorriak jateko
garenean batuko,
zure piperminak dira
gogoan islatuko.

*2018ko uztailaren 22an*

*761*
## Lokabe hegatuko naiz

1
Ekaineko gaurik laburrenean
ilargi betea poza denean,
musua erabat ilundu baitzait
herra agintean dagoelako,
luze gauzkalako lurraldetik at
hurkoek sufritzen jarrai dezaten.
Ziegan irentsita azken berriak
bizitza garratza dela uste dut,
ametsetan, aldiz, ez naiz hondatzen
atsekabeari aurre degiot,
goiztirian gogoz altxatuko naiz
esperantza gozo elikatuta.
Gogoak, ez zaude bakarrik diost,
maite zaituenak zure zain dago,
beregaz lorian egongo zara,
Ama-Lurrekin lez paradisuan,
hori etxekoek maiz diotsute
halaber kideek eta lagunek.

2

Kideak bi gutun igorri dizkit
bere bizinahia oparitzeko,
txit polita dago herria diost,
ikusiko duzu zatozenean,
urratsak ematen ari bakara
kateak batera moztu ditzagun.
Pentsamendu zinez egingarriz
kemena errazki oneratzen zait,
indar metaketa sendotu denez
elkarbizitza da loreztatuko,
barrutik lokabe hegatuko naiz
eskatzeko giza eskubideak.
Gaur kide, idazten ari natzaizu
bihotza suspertu didazulako,
gure balioak plazaratzeko
aktibo izan nahi dut zurekin,
irudi dezaket askatasuna:
Feminista eta euskaltzalea.

*2018ko uztailaren 29an*

*762*
**Naizenaz akordatu naiz**

1
Aizu, ze azkar doan
denbora barruan,
zurekin hitz dagidan
une zoritsuan,
hori diotsut lehen
niotsun moduan,
etzanda geundenean
fereken zoruan.



2
Horma grisek dioste
preso nagoela,
bizitza bilakatu
zaidala ustela,
baina nik ondo dakit
adituko dela,
libre itzul gaitezen
zuen xaramela.

3
Soilik dakusadanez
ziegatik zerua,
maiz akordura dakart
geure sorlekua,
nahiz kinkak dirudien
gaur egun antzua,
zuen irrintziak dit
alaitzen musua.

4
Nahiz kartzelan nagoen
arras mugatuta,
burua beti hegan
dago askatuta
bihotza lurraldean
grinaz pausatuta,
mahaian egoten naiz
luze xarmatuta.

5
Kideon desioak
antzekoak dira,
Euskal Herrira gaude
aldiro begira,
gogoz abiatzen naiz
ideien tokira,
esperantzaz blaituta
dagoen zelaira.

6
Naizen gizakiaz dut
sakonki pentsatzen,
zigorrak hausnartzera
erraz nau bultzatzen,
iragana dudanez
zehatz gogoratzen
gogoa sarritan zait
gogor aztoratzen.

7
Zentzuak diost, “izan
zaitez bihozbera”,
“horixe da zintzoa
Izateko era”,
aholku onarekin
nago alegera,
maitasuna delako
horren hurrenkera.

8
Ekiaren dirdirak
bikain lagunduta,
zeure ahotsak uzten
nau atseginduta,
oroit naiz geundenean
maitez ostenduta,
gizaki lez irteten
nintzela onduta.

*2018ko uztailaren 29an*

*763*

**Uztailean tiroka hil duten jirafari**

1

Alkandoran koipe orbanari lez,
begiratu diot argazkiari,
Yanki-a jirafa hil eta gero
barrez agertzen da hilotzarekin,
irudi zikinak erakusten du
ustezko gizaki horren etika,
egoa puzteko zauritu zuen
jakinarazteko ausarta dela,
bisarekin egin dezakeela
Afrikan edonoiz gura duena.
Eliteak eta ezkutukoek
kalitzen dituzte basapiztiak,
monarkak bortitzak ohi direlako,
aberats berriak aldiz harroak,
famak debekua gaintzen duenez
edonon aukera omen daukate,
tamalez galtzeko zorian daude
jirafak, gorilak, elefanteak...
nahiz guk hauxe dena ondo dakigun
hipokritak legez isil darraigu.

2

Okela noiztenka jaten dudanez
ezin dut begano naizela esan,
industria denez elikadura
euren borrokaz bat dagit ordea,
kaiolan hil arte dauzkatelako
oilo haztegiak krudelak dira,
natura direnez animaliak
erabil ditzagun modu onean,
izakiak eurak legez garenez
ez dezagun ito gizatasuna.
Espezie denek geureak legez
saihets dezatela desagerpena,
fauna adoretsu babes dezagun
Ama-Lur ez dadin atsekabetu,
andrazko dirudun bihozgabea
Afrikan bizitza maita ezazu,
zure garaikurra izan dadila
sabanan jirafak hur ikustea,
haurren garaikide izan daitezen,
munduan guk beste iraun dezaten.

*2018ko abuztuaren 5ean*

*764*

**Txoritxoak lez nahi duenak etor dadila**

1

Txoria onik heldu
baita habiara,
aspaldi laga egin
zuen arbolara,
itzuli baino lehen
bere naturara,
bidaian sentitu du
hamaika zirrara.

2

Nahita joan ei dena
bizi da gustura,
jin daitekeelako
noiznahi sorlekura,
senti dezakeenez
noizbait nekadura,
ebatzi beharko du
non hil duen gura.

3
Itzultzea da joan
denaren desira,
lurralde minari zor
diolako mira,
udazkenean dago
zerura begira,
hegan doazelako
enarak herrira.

4
Maiz datozenak ezin
ei dira bueltatu,
herrak dizkielako
ateak zarratu,
samina behar dute
nahitaez pairatu,
gogoan galdutako
lurra ferekatu.

5
Penaz dago herritik
urrun dagoena,
indarrez kartzelara
eraman dutena,
“itzuliko naiz”, ohi da
pentsatzen duena,
han esnatzea dela
ametsik onena.

6

Iheslariak dagi
ariman negarra,
herrimina bihurtzen
zaio baitan harra,
berea oso izan
denez zoritxarra,
“itzal dadila” dio
“gatazkaren garra”.

7
Egoismoaz txartzen
denez biziera,
txirotasunak dakar
jendea geurera,
auzolanaz eukiko
balute aukera,
pozarren lihoazke
berriro etxera.

8
Txoriak libre diren
hegatzen moduan,
mugarik gabe ibil
gaitezen munduan,
ez delako zilegi
uztea mortuan,
lan egin nahi duena
gurekin ortuan.

*2018ko abuztuaren 5ean*

*765*
**Giza-dorren unea dator**

1
Giza-gazteluak plazetan gertu
zaintzeko herriak eta jendeak,
artea, kultura eta ohitura
gure ele minak biziraun dezan,
Ezpalak jatorki ekarri ditu
Iruñera legez Eibar aldera,
aniztasunaren printzak sustatuz
kontzientziak dir-dir erna daitezen,
bedatsea mardul lilitu dadin,
Euskal Herriaren amets ederra.
Giza-gazteluak hormak hausteko
pilpirak hedatuz mugak kentzeko,
eskutik helduta sendo daitezen
herrien arteko hartu-emanak,
estatu sorgorrek jakin dezaten
iraultza garela auzolanean,
demokraziaren alde gaudela
guk noizbait geroa ebatz dezagun,
armada faxistak deuseztatuta
munduan bakean bizi gaitezen.

2
Giza-gazteluen unean gaude
jasoko dituzte bost mailakoak,
katalanak zinez trebeak dira
dorreak zertzeko kantuz ta doinuz,
borrokan eurekin elkartzen gara
altxatzeko giza eskubideak,
Irlanda, Korsika, Eskozia... lez,
independentzia erdiesteko,
elkartasunaren lorategian
lurrinak musu-truk konpartitzeko.
Haur bana igo da tontorretara
"Els Segadors" grinaz abestu dugu,
bihotza erabat hunkitu zaigu,
kulturak uztartuz indartu gara,
giza-dorre biak desegin dira,
geure gogoetan betiko urtu,
desirak airean dasta daitezke,
pizkundea eta libertateak,
krabelinen mezu askatzaileak
gereziak beste mami daitezen.

*2018ko abuztuaren 12an*

*766*

**German (1955-1978) eta Josebari (1959-1978)**

1

Arraten bare geunden
gertatu zenean,
antolatu genuen
gazte egunean
poliziak tiroka
geure Iruñean,
sanferminak hausteko
hasi zirenean,
zezen-plazan presoen
aldeko unean.



---

*- German Rodriguez uztailaren 8an hil zuten.*
*- Joseba Barandiaran uztailaren 11an.*

2

Gero jakin genuen
German zendu zela,
bala burura nahita
jaurti ziotela,
amnistia zelako
xedeen label-a,
polizien oldarra
izan zen krudela,
eritu zuten jende
kopuru itzela.

3

Euskal Herrian ginen
haserre zutitu,
grebak oro zituen
kaleak goritu,
jazarraldia sakon
genuen sufritu,
Donostian Joseba
ziguten kalitu,
Astigarragan ziren
bihotzak hertsitu.

4

Berrogei urte joan
Baitira metatzen,
Ferminek (*) kantuz digu
drama gogoratzen.
Bi krimenak ditugu
aldiro salatzen,
Martin Villa has dadin
zigorra pagatzen,
egiaz direlako
zauriak osatzen.

(*) *Fermin Valencia*

5
Bien arimak dira
plazetan pausatu,
Astigarragan eta
Iruñean batu,
gazteak aurreskua
bikain du dantzatu,
hurkoek garbi dute
zuzentza eskatu,
ukabilak dituzte
zirraraz goratu.



6
German eta Joseba
zarete oraina,
beste krabelinak lez
denon atsegina,
sentimenduan zaigu
arindu samina,
blaitzen duzuelako
xedeen erpina,
zuekin goaz aska
gaitezen aitzina.

*2018ko uztailaren 12an*

767
**Aritz mardula maite zaitugu**
*Habanera*

1
Aritz jator diotsugu
“mardul hazten ari zara”,
Ama Lurrarena dela
ederra den zure kara,
aitxa eta amarentzat
zara jaiaren algara,
jaio zinenetik oro
biziguraren galdara,
zure barretsuak dira
hegan heldu ziegetara,
halaber sentimenduak
bihotzaren egoitzara,
nahiz zu hilero zatozen
Kordobako kartzelara,
libre ikusiko duzu
laster hamaika enara.

*- Aritz Portu Iraizoz.*

*2018ko uztailaren 20an*

*768*

**Auzolanak askatasuna dakar**

1

Arbasoek luzaro pairatu zituzten
ekaitzaren trumoiak eta oinaztuak,
iluntasun ustela hedatu zenean
zirudien behera zetorrela goia,
zarata ta txinparta haiekin zurtuta
han bakoitza beraren erara hasi zen.
Idealak beldurrez lurpetu zituzten
jendartea oinarri barik geratu zen,
ez zeukaten modurik baliorik gabe
partitzeko kemenez askatasunerantz.

2

"Nahaspila honekin bortitzak garaile,
bananduta gu gara izango galtzaile",
batasuna hobesten zutenek zioten
batzarrak bil zitezen herrien plazetan,
"auzolana" izan zen haien hitz bakarra
ortzadarra ortzian dir-dir ager zedin.
Ostarteak gerora ikusi zituzten,
goiztirian ekia oro suspertu zen,
helburuak etikaz zertzen direlako,
elkartasun zintzoa urrea delako.

*2018ko abuztuaren 19an*

*769*

**(2017.04.08) Armagabetzea oroituz**

1

Kolonbian zertu zen armagabetzea,
aspaldian Irlandak hori egin zuen,
trintxeratik plazara abia gaitezen,
elkarbizitzarekin ataka on dadin,
bakea hel dakigun xedeak ehunduz.
Ahalegin zail horrek zinez merezi du
zabaltzeko herrian gure balioak,
esateko gaudela ongiaren alde,
egiaz bat daitezen jendeak gurekin,
behin edo behin min barik erdiets ditzagun
krabelinen nahi onak oro mardotzea.

2
Nahiz ez zuten bat egin estatu bortitzek
bururatu genuen armagabetzea,
eurak bortxan eroso bizi direlako,
trabak jarri zituzten atxiloketekin,
ezkilak jo zituen Foro Sozialak
Erakunde senduna ausartu zenean.
Lurraldean berria aditu zenuten,
Bakearen Artisau onberen proklama,
gobernuen oldarrak amaitu zitezen,
goiz-argiak lokabe ezagut genitzan,
espetxean gerezi denbora hur dago
aktiboak zuekin han izan gaitezen.

*2018ko abuztuaren 19an*

*770*

**(1996.05.05)**

**Gure lehen txangoa oroitu dut**

1
Urteak daramatzat
zurekin amesten,
maitatzen zaitudala
goizero berresten,
aisian izadia
genuen goresten
gure bihotzek zuten
pilpiraz abesten.



2
Zigorraldian nabil
modu eskasean,
preso nagoelako
zoko narrasean,
nahiz harremana txartu
zaigun oinazean,
noizbait gozo etzango
gara belazean.

3
Gatazkak zigulako
arima ziztatu,
sentiera erabat
zitzaigun tristatu,
urruti gauden arren,
ez gara sikatu,
desioak naroro
gaitu elikatu.

4
Ja hemezortzi urte
ginela jelatu,
gure asmo xumeak
zirela pelatu,
artizarrak ongia
diezagun markatu,
bizigura dezagun
estu besarkatu.

5

Bi urte barru nahi dut
zurekin partitu,
barrutik at jatorki
dena konpartitu,
nahiz kinka latzak digun
zoria horitu,
esperantzak gogoak
dizkigu goritu.

6



Gaur da data txangoa
egin genuela,
gu gustura geundela
sentitu nuela,
espetxean ohi denez
bizitza txepela,
suspertzen naiz oroituz
laztanen epela.

7
Zahartu naizen arren
ez zait urtu grina,
zu zinez zarelako
adiskide mina,
aurki berriz dezagun
egindako zina,
mardul lora dakigun
ohiko atsegina.

8
Nik askatasuna maiz
dut irudikatzen,
ibiliko garela
alai paseatzen,
lehen lez barra-barra
euskaraz mintzatzen,
txakur polit batekin
Arrate dastatzen.

*2018ko abuztuaren 19an*

*771*

**Faxismo beltzaren kontra hamaika kolore**

1

Iragana Europan ahaztu dugunez
faxismoak diosku, berriz heldu dela,
orain bere etsaia migratzailea da,
lehen ziren juduak eta aurkariak,
hasieran gezurrak esanez lan dagi
prestatzeko giroa bortxa xaxatzeko,
estatuek gerora bat egin dezaten
hormak eta txarrantxak mugetan ezarriz.
Eskuindarrak zokotik atera direnez
euren kirats sarkorra hedatzen ari da,
politiko batzuen praktika eskasak
beldurraren mezua erraz sustatzen du,
gaur Le Penez, Lafagez, Casadoz, Salviniz...
arriskua lauhazka dator Europara,
ez garenez izua gerarazteko gai
diktadura diogu, pitz daitekeela.

2

Noizbait harro Afrikan sartu ginelako
afrikarrak geurera beharturik datoz,
hori bera diote, amerindiarrek,
Asiatik gerratik ihes datozenek,
solidaritatea sorgor eraitsita
faxismoak erabat azpira gaitzake,
ez dakigun betiko hil demokrazia
europarrok sarrerak ez ditzagun itxi.
Hondamena Europan maiz jasan dugunez
guk zer egin dakigu gerrak saihesteko,
auzolana munduan bihotzez bizkortu
arrazisten musua ziplo zurbil dadin,
hunkituta hamaika kolore batuta
adorez has gaitezen bakea sustraitzen,
hemen jaio zein urrun, bat dator desira,
"maitasunak herrari garai diezaiola".

*2018ko abuztuaren 26an*

*772*

**Labezomorroak eta gu**

1

Intsektuak kopuruz
ohi dira handiak,
labezomorroak lez,
kilkerrak, euliak...
maiz guregana datoz
izaki bitxiak,
ziegetan dastatzeko
asmoz hazkurriak.



2

Nahiz nik pentsatu dudan
"berriro txorroa",
ohetik ikusi dut
labezomorroa,
lardaskatzen zebilen
zakarren zorroa,
ezlekuan aditu
da nire orroa.

3
Labezomorroa dut
beldurrez hertsatu,
bart senak aginduta
zakar akabatu,
kontzientziak tinko dit
gero gogoratu,
“Ama Lurren fruituak
Itzazu ondratu”.

4
Ditiopteroa da
gauean higitzen,
“blatella germanica”
gurekin loditzen,
denon kontura baita
gustura bizitzen
janarien peskizan
ziega du lohitzen.

5
Intsektu honek ditu
antena luzeak,
gorputz obal gorrixka
ta hanka meheak,
oro har dira zoko
hezeen zaleak,
hondakin kirastuen
irensle trebeak.

6
Euren bizitza dute
pasatzen barruan,
ilunki ari dira
zigor esparruan,
nahiz labezomorroak
lo dauden neguan,
udan izurrite
dira ibilguan.

7
Gizakiok ez dugu
maite momorro hau,
asaben arbuioaz
bihurtu zen bilau,
gu zeratu aurretik
Lur planetan dirau,
gu galduko bagina
esango luke “brau”!

8
Labezomorroekin
ez gara moldatzen,
antzeman bezain azkar
baikara zoratzen,
eurekin baitezpada
garenez nazkatzen
saia gaitezen ziegak
txukunki lagatzen.

*2018ko abuztuaren 26an*

*773*

## Kartzelan Luis asko dago

1

Antsietateak estu hartuta
herrari oihu egin diozu,
ziegan luzaro airerik gabe
itolarria sentitu duzu,
leihotik hori esan didazu
zure boz arras lakarrarekin,
drogek zintuzten hona ekarri
paradisutik hormen zokora.
Noizbait zintuen bortxak sailkatu
lehen graduko lehen fasean,
eskubiderik gabe kartzelan
jipoi ugari jasan dituzu,
nahiz zu ez zaren hasi zimeltzen
gaztetasuna hegan joan zaizu,
itxaropenak ia galduta
zure so hitsak ez du dirdairik.

2

Zure izena Luis omen da
maitasun barik bizi baitzara,
kartzelan zara zenbaki hutsa
gobernu txarren ondorio bat,
gaur berba lasai egin duzunez
zurekin zinez poztu baikara,
enpatia zer den dakizunez
giroa ziplo hobetu duzu.
Askatasuna opa dizugu
etxera laster itzul zaitezen
ea zaizkizun mamuak joaten,
buruko izu horiek haizatzen,
Extremadura zuk zain daukazu
bizkitartean eutsi goiari,
bizitza zuzen goza dezazun,
irriak sena senda diezazun.

*2018ko irailaren 2an*

*774*
**(1999.09.19)**
**Santa Luzian "Lagun"-ekin egon ginen**

1
Artzain txakur argia burututa jarduna,
artzainaren alboan dago goiko larrean,
belardian ardiak murtxikatzen belarra,
izadian dezagun ikusmira eskertu.
Artilezko ehunak artzainentzat kuttunak,
bordan diren adina gazta eta kaikua,
antzinatik digunez nortasuna taxutu
artzaintzaren kultura grinaz babes dezagun,
ardi latxa mutur-beltz, euskal artzain txakurra,
bizirik nahi zaituztet altxorrak lez, distiraz.

2

Neolitikoaren estanpa maiz nekusan,
euskararen mendiak lehen legez lekuko,
ardiak ta txakurra ondareak direnez,
ez ditzagun artzainak izorratu aisian.
Euskal artzain txakurrak adi Santa Luzian,
artzainei begira aginduak zertzeko,
lehiaketa pozarren genekusan Oñatin
sentieran zitzaigun bizigura ernatzen,
ikuskizunarekin oro ginen hunkitzen,
ziegan “Lagun” oroituz hola nago laztana.

*2018ko irailaren 2an*

*775*
**Heriotza**

1
Heriotza nahitaez
azken taupada da,
berdin ahotik dudan
egingo ufada,
ea egun horretan
daukadan parada,
sentitzeko hurkoen
txerekin patxada.



2
Noizbait etorriko zait
bila heriotza,
ez zait iruditukо,
ordea, arrotza,
zoragarria izan
zelako jaiotza,
arren, izan dadila
agonia motza.

3
Gaur hemen nago, bihar
ez dakit, auskalo,
hil nadila xaloak
lez, txalo-pintxalo,
bizitza ez delako
soilik jan eta lo,
Basajaun izan nahi dut
eta ez Tartalo.

4
Hilgo naiz horrelaxe
delako bizitza,
zuzenki gozatu zen
asaben aditza,
nik lehenesten baitut
elkartasun hitza,
ongiak birrin dezan
gaizkiaren haitza.

5
Nahiz heriotza ez den
zure amets mina,
kontuan har ezazu
bizitza adina,
beldurtuta zu zara
izango muzina,
lasai jardunda, berriz,
oro atsegina.

6

Ezingo zara bizi
Balbe ukatuta,
zu betiko zarela
oker pentsatuta,
baina, ez zaitez jaiki
ilun tristatuta,
baizik ekiren printzak
alai prezatuta.

7
Zenduko zarelako
zain ezazu Lurra,
haurrak ez dezan sala
gure iruzurra,
naturarekin izan
zaitez txit samurra,
eta ez politiko
batzuk lez makurra.

8
Gu hunkituta gaude
izarrei beha,
irakiten hasi da
desiren eltzea,
nahiz iritsiko zaigun
hiltzeko unea,
ilusioz blai bizi
gaitezen maitea.

*2018ko irailaren 2an*

*776*

**Zoriontasuna eta espetxea**

1

Ohetik musika dantzudanean
zoriontasunak ferekatzen nau,
irakurtzen hasten naizen unetik
nire gogoa da libre hegatzen,
sentiera bikain elikatuta
bizigurak maiz dit arima blaitzen,
atsekabeari garaitzen diot,
neska lagunari pozarren deitzen,
batera gaudela ohartu dadin
musekin jolasten nabilenean.
Etxarteak ozen dioskulako
zuk adina dakit nik non nagoen,
begiak bilduta ziegan, ordea,
pena egiten zait irribarrea,
horregatik orain jator diotsut,
"zure pentsaera alda ezazu"
erraza delako liluratzea
hurkoak oroituz goiztirietan,
ametsen oholtzan maitea ta zu
bertsotan aritzen zaretenean.

2

Liburuekin ta musikarekin
zigorrari koska bat kentzen diot,
sorkuntzen munduan aterpetzen naiz,
herra sartu ezin den izadian,
zoragarria da abestiekin
irudikatzea Euskal Herria,
sumatzea ziplo bertan zaudela
zure akorduan dauden duinekin,
Ama-Lur taupaka goraipatzeko
poetek dotore dagiten legez.
Kideko aipatzen hasiko gara
elkarrekin bizi izandakoak,
nik maiteaz ditut konpartituko
mugarik gabeko paseoetan,
nahiz oraintxe hau den gure bizitza
egun ilunekin eta onekin,
noizbait kate barik joango garenez
"magia", esanez batuko gara,
deklamatu eta kanta ditzagun
askatzen gintuzten obra sorginak.

*2018ko irailaren 9an*

*777*

## (2006.07.21) Jose Manuel Balentziaga, hamabi urte zu gabe

1
Balentxi gogoan zaude
halaber ametsetan
zu niretzat eredua
izan zinen gaztetan,
genegitzan amnistia
zertzeko bileretan,
zuk zentzuz, “nire iritziz”,
zenioen berbetan.



2
Donostian jaio zinen
zu alde zaharrean,
diktaduran hazi gero
giro net zakarrean,
Franco botatzeko, jardun
zenuen labarrean,
argia ikus genezan
aberriko larrean.

3
Zu noizbait apaiztu zinen
etikaz hornituta,
Martutenen zeuden
espeak alaituta,
adinduak zenituen
artatzen hunkituta,
ama lez sentitzen zuten
arima lilituta.

4
Itsasoan huts eginda
bihotzak ezustean,
Kontxan umezurtz lagako
gintuzun tupustean,
tristerik geratu ginen
zu gabe anartean,
geroztik taupaka bizi
zara gure artean.

5
Bake zuzena pitz zedin
zu zinen borrokatu,
langabezia gaintzeko
langileekin batu,
DEEn zenuen drogen
kalte latza salatu,
etxe gabeko jendea
zintzoki anparatu.

6
Zu maiz igo zinen Hiru
Errege Mahaira,
oporretan izadia
izaten zen desira,
ekologistek merezi
zutenez zure mira,
zenegien euren alde
txirringaz mila bira.

7
Zure altxorrik behinena
zen “Bi Mila Herria...” (*)
eliza pobreak bertan
egin zuen habia,
manifetan zuk zenuen
saltzen aldizkaria,
irakurrita hobetu
zekigun kontzientzia.

8
Oi, Balentxi gaur dut zure
atsegina sumatzen,
gure sentierak ari
direlako mintzatzen,
Aieten hasi ginenez
lurraldea goldatzen,
zure xedeak kemenez
hasiko gara batzen.

*2018ko irailaren 9an*

(*) *Bi Mila Herria Eliza*

*778*
## Hau zen eta da xedea

1
Xedea nahi zenuela inposatu zioten
espainolak ta frantsesak nahitaez joan zitezen,
herritarren kontra jardun zenuela armekin
diktadura ezartzeko Kantauri partean.
Azkenetan zegoenez arbasoen haritza,
ihartuta hil ez zedin igo zinen mendira,
kinka latza konpontzea zuzenki zen asmoa

lurraldean pausa zedin egiazko bakea,
ongarriak hitza eta boz libreak baitziren,
denok giza eskubide denak goza genitzan.

2

Bakezale hipokritek bonbak saltzen dituzte,
armada ta polizia ahaltsuak dauzkate,
noizbait kendu zizkiguten askatasun zaharrak,
jarri arau genozidak ele mina gal zedin.
Estu lotu ohi gaituzte konstituzioekin,
ez gaitezen inoiz aska estatuen mendetik,
Francok gogor oratuta hola euki gintuen,
oinordeko zinikoek horrelaxe gauzkate,
guk zin-zinez zapalkuntza dezakegu ekidin
herriekin ehunduta solidaritatea.

3

Aurre tinko degiogu ez-demokraziari,
kate barik zer nahi dugun izan ebatz dezagun,
desioa denez zintzo konpartitu mundua,
ez ditugu ondasunak inon bortxaz ostuko.
Gezurrekin harremanak direlako pitzatzen
auzolana ezin dugu zertu behar bezala,
hartutako bideak du garrantzia, ordea,
iristeko irauteko gura dugun gunera,
jakobino nahi genuke bat etorri zurekin,
oasia izan dadin Euskal Herri morea.

4
Orain zazpi urte esan zenuen behin betiko,
Aieteko puntuei zuk men egin zenien,
herriari jator eman zenionez baietza,
armak laga eta gero Kanbon urtu baitzinen.
lubakiak bizitzea, ez zelako helmuga,
sortu zinen lurraldeko baitan zara sustraitu,
emandako urrats duina bizigura delako,
abagune egokia kemenez lant dezagun,
sentiera ezberdinak pilpiratu daitezen,
Benitoren “Loretxoa” kantatuta plazetan.

*2018ko irailaren 16an*

*779*

**Hiru kulturak eskua emanda**

1

Hiru kulturak daude
bizkarra emanda,
hegemoniak dio
erdara edanda,
beti bizi izan da
euskaratik landa,
frantsez ta gazteleraz
eroso etzanda,
garbi nahi dut aipatu
egia esanda,
zuzen osa dezagun
herriko baranda.

2

Guk zinez dazagugu
sorgorren kultura,
eurek deitzen diote
gureari “hura”,
euskara ez ohi denez
euren arrangura,
hurbil gaitezen senti
dezaten azkura,
zintzo jardunda ehun
dezagun onura,
aniztasunak izan
dezan hezurdura.

3

Tamalez guretzat da
kinka hau kaskarra,
kultura barik dugu
galduko iparra,
zubiak jasotzeko
daukagu beharra,
zeharkatu dezaten
auzotarrek marra,
eurekin bizi dadin
sorkuntzaren garra,
berdin dotore zertu
lurralde nabarra.

4
Kulturak eman dezan
bertako sagarra,
bat eginda elika
dezagun zuztarra,
denontzat izan dadin
gero deiadarra,
gozoro dastatzeko
sorkuntzen aparra,
dir-dir nahi dugulako
ikusi izarra,
osasuntsu aditu
euskara zaharra.

*2019ko irailaren 16an*

*780*

**Gure desio ederrak**

1

Zein den zure desira esan iezadazu,
zergatik mortuan ezkutatzen zaren,
arratsak nahi nituzke zurekin ikusi
txantxangorriekin esnatu gaitezen,
emaidazu eskua fereka dezadan,
begi ezti hitsak distira daitezen,
nirekin joan zaitezen motxila hartuta,

miresten genuen geure naturara.
Esperantza xumeak gauzatu daitezen
askatasunaren une magikoan,
bizigura zentzuz has gaitezen dastatzen,
gereziondoen zelai oparoan,
izartxoak ñirñirka noiz hasiko diren,
iretargiari galde diezaiogun,
guk hemendik aurrera bizitza dezagun
paleta moreaz dotore margotu.

2

Eguna da barruan oskarbi argitu,
zure presentzia mina sumatzen dut,
astero lez deitzera joateko zain nago,
boz zoragarriak pil-pil susper nazan.,
penak eta ajeak senda zakizkigun
herraren erpeak saihestu ditzagun,
iragana oroituz ta oraina landuz
biharko zoria prestatu dezagun.
Espetxeak agiri motzetan diosku,
beregaz dugula luze jarraituko,
lehenengo graduan sailkatuta gauzka
gu arriskutsuak omen garelako,
gure urrats zintzoak zuk dazaguzkizu,
ebatzi zuzenak bortxak gain ditzagun,
horregatik ziegatik zirraraz diotsut,
“herriak Eibarren elkartuko gaitu!”

*2018ko irailaren 23an*

*781*
**Iraia, Ugaitz, Nora eta Joni**

1
Gure ilobak aspaldi
izan ziren umeak,
ondo koskortu zirenez
orain dira gazteak,
eurak ikasleak beste
direnez langileak,
eraikitzen dizkidate
pozaren zutabeak.



2
Iloba minei zinez
zor diet maitasuna,
osaba baino gehiago
naizelako laguna,
gutxienez eurentzat naiz
batez ere kutuna,
noiztenka idazten dien
urrungo oihartzuna.

3
Urte asko egon barik
kalean elkarrekin,
hori gertatzen zait ere
maiteaz, Eibarrekin...,
borrokan aldiro nabil
gaizkiaren harrekin,
Arraten kantari jolas
gaitezen izarrekin.

4
Zirraraz hazten ikusi
zaituztet fotoetan,
sarri sorgintzen nauzue
barrezka ametsetan,
hauxe pentsatzen ari naiz
udako egunetan,
Ekiren printzek laztantzen
nautenean goizetan.

5
Tamalez, bizipen gutxi
ditugu konpartitu,
gaur, goiztiri oskarbian,
zuekin naiz oroitu,
arrats oskorriak zuen
xarma dit oparitu,
iretargiak ñirñirka
sentiera bizitu.

6
Zuen urrats dotoreak
grinaz ditut jarraitu,
espetxealdi garratza
didazue eztitu,
zuekin diot, dudala
mendekua gainditu,
berdin, ez zaidala inoiz
atsegina urritu.

7
Hemen egunak tantaka
joaten dira pasatzen,
zuekin nagoenean
zoria da mintzatzen,
askatasuna hasi naiz
desiraz blai prestatzen,
zuen pilpirak dastatuz
has nadin oneratzen.

8
Bizitza hitsa kolorez
didazue beztitzen,
zuei esker nik ez dut
etsipenik sufritzen,
euskara delako batzen
garenean arraitzen,
momentu eder horretan
bihotza zait guritzen.

*2018ko irailaren 23an*

*782*

**Euskal Herriak iraun dezan**

1

Paris eta Madrili irrikaz begira
herriño bat garela ezin dugu esan,
aukeratzen ditugun hedabideekin
utopia geurean ez da pausatuko,
esperantzak batera elika ditzagun,
gereziak mardulik lilitu daitezen.
Solidaritatea ez badugu lantzen,
ongiak ez du inoiz gerorik izango,
esan barik zintzoki, “baietz”, euskarari,
erdararen mendean txirotuko zaigu,
hobetzat har dezagun jendarte anitza
jasotzeko gizaki libreen etxea.

2

Ikusita emaitzak hauteskundeetan
pentsatzen dut gaudela kolonizatuta,
arrazoia ez dela gurea dirudi
bozkak zehatz zenbatzen hasten garenean,
lurraldea bihotzez konpartitu barik
nekez bizi gaitezke herrikide gisa.
Kontsumismo eskasa lurpetu dezagun,
auzolanak krakarik gabe iraun dezan,
gure esku nahi dugu ebazteko giltza,
muga barik zertzeko gure desioak,
txepetxak du orduan txioka esango,
“azal denok izara ehundu duzue”.

*2018ko irailaren 30ean*

*783*
**(2018.12.01 - 2018.12.10)**
**Mikel Laboari**

1
Zeure kantatzeko era maite nuen,
doinu sarkorrekin sorgintzen ninduzun,
Mikel, joan zinela jakin nuenean,
aitxa ikusteko aiduru nengoen,
Langraitzetik biok abiatu ginen
bazter miresgarri naturaletara.
Nahiz "Izarren hautsa", Leteren (*) obra den,
doinu kuttunaz zuk hobetu zenuen,
aitxa hil zenean gogoratu nuen,
"Info7"n ziegan malkoz entzun gero,
gurasoei nik maiz kantatzen diet,
iluntzetan alai batzen garenean.

(*) *Xabier Lete.*

2
Ni gurasoekin urruti bizi naiz,
Kordoban hain zuzen azken urteetan,
ez dut entzun zure ahotsa urtetan
deserrian zaila izaten delako,
baina bart “Lili bat” kantak suspertu nau,
gogoa erabat libre sentitu dut.
Sentierarekin jantzi zenituen
poeten eleak kantatu genitzan,
oi, “Txoria txori”z horixe dagigu
heltzeko zurekin askatasunera,
Mikel, bihotzetan bizi zarelako,
joan ziren minei kantatzen diezu.

*2018ko irailaren 30ean*

*784*

## Denon Euskal Herria izan nahi dut

1

Izan nintzenez, nahi dut
izan aberria,
baina botereak dit
estutzen gerria,
nahitaez jasan baitut
sarri deserria,
berdin behin eta berriz
kartzela zerria,
arren, etor dadila,
bedatse berria.

2
Ekia zidatenez
laga tapatuta,
zeruari begira
nago penatuta,
printza barik ametsak
dauzkat higatuta,
desioak geratu
zaizkit xehatuta,
muzin diot, “zergatik
darrait zanpatuta?”

3
Zorigaiztoa izan
delako sarria,
neure egoera da
erabat larria,
gorputza zatituta
dirudi mirria,
kateekin ahaztu
dut zer den irria
noiz ote nuen jaso
aurreko zirria.



4
Estatu zekenekin
nago mugatuta,
geroaren bidea
daukat jelatuta,
hurko minak etxean
sorgor sumatuta,
“amil ninteke”, diot
maiz ikaratuta
ez naiz biziko eta,
hola askatuta.

5
Galdu nuen oreka
nahi dut eskuratu,
zazpiak bat xedea
zuzen ainguratu,
eremua mugarik
gabe inguratu,
nortasun guztiekin
herria eratu,
euskara behin betiko
dadin aurreratu.

6
Bertan eta kanpoan
zaretenak sortu,
gaizkiari uztera
bortxa derrigortu,
ez diezadan bilaka
oasia mortu,
indartu auzolana
dadin orokortu,
ongian diezazkidan
sustraiak bizkortu.

*2018ko irailaren 30ean*

*785*
**Espainiaren bonbek Yemen birrindu dute**

1
Bonbak edo botoak tink esan zigunak,
bonba gaitzen salmenta ontzat ematen du,
PSOEri zimeldu zaio berriz hitza
etika sakonki lurperatu baitu,
eroslea ohi lez, da Saudi Arabia,
Yemen behartsuan sarri darabiltza,
hamaikatxo ume da leherketekin hil,
Espainia lez, baita mundua isildu,

xiiten ta suniten arteko liskarrak
gupidagabeak aberasten ditu.
Estatuek ekoizten dituztenez armak
miseria dute ankerki hedatzen,
nahiz horixe dagiten, ez dira lotsatzen,
eurentzat zilegi ei dela dirudi,
gaur ez datoz bat giza eskubideekin
negozio beltzak galtzeko beldurrez,
terrorea diote, “deitoratzen dugu”,
Yemenek hori du sentitzen, ordea,
Europatik bidali ordez bizigura,
eskaintzen diegu zeken heriotza.

2

Yemen goibel zaharra defenda dezagun
handikien bortxa geldiarazteko,
nahiz bere lur gehiena are nabarra den,
oraina bortizki idortu diote,
herrialde bitxia gaixotzen ari da,
izurriak bertan lauhazka dabiltza,
noizbait oro izan zen konkisten xedea
geografikoki urrea delako,
inperio guztien itua zelako
herritarrek dute larrutik ordaindu.
Gora bonbak, korbetak... lana direlako!
Langile gorriak ez dezala esan,
bakezale faltsuek ergelki diote,
presidenteak ta gobernuak beste,
psikopatak ohi dira bezero bakarrak,
krimenak munduan nonahi dagitzate,
utopiak gogoan ozenki diosku,
“kapitalismoak ez dauka bihotzik”,
“oasia lehen lez Yemen izan dadin
giza-izaera susper ezazue”.

*2018ko urriaren 7an*

*786*
## “EPA”, “HH” izan dadila

1
“EPA” izan dadila
“Helduen Hezkuntza”,
eta ez euskararik
bako eraikuntza,
migratzaileak uler
dezan gure funtsa,
dastatuta gustura
erronkaren zuntza,
euskal etxean gu lez
izan dadin huntza.

2
Zergatik soilik dute
Ikasten erdara?
Nork galarazten die
bertako algara?
Irakas dezatela
“EPA”n ja euskara,
edozein helduk senti
dezala zirrara,
esan diezaion senak
euskalduna zara.

3
“EPA” bihur dezagun
Eibarren anitza,
euskarak bermatuta
izan dezan hitza,
migratzaileek hobe
dezaten bizitza,
udaletxeak eskain
diezaiela ditxa,
izan daitezen euren
haurren gidaritza.



4
“EPA”k zergatik dio
sarrera zarratu?
Euskara ezin zaio
inori ukatu,
diglosiak ez gaitzan
gehiago zartatu,
ikasleak dezala
libre aukeratu,
Marik gozo diezaion
arima xarmatu.

5
Zuzen eska dezagun
“EPA” euskalduna,
ez dadin izan gaur lez,
guretzat iluna,
irakasle duinak
ken dezala lurruna,
irakats dezan denon
herriko tasuna,
ikasle finek jaso
dezaten fortuna.

6
“EPA”rekin euskara
dugu sendotuko,
oraingo muga barik
mardul umotuko,
migratzaileak dira
jatorki lotuko,
ikasita helduak
beste harrotuko,
gurekin mintzatuta
erraz girotuko.

*2018ko urriaren 7an*

*787*
**(2018.09.08) Gora Jaizkibel konpainia!!!**

1
Plastiko beltzari heldu diote
hesia zertzeko, jaia belzteko,
nabarmendu dira neska gazteak,
ustez ez dute nahi berdintasunik,
itua Jaizkibel konpainia da
zuzenki delako parekidea,
“gu gara betiko alardekoak”,
ozen diotsete, matxistak legez.
Zatituta dago Hondarribia,
hogeita bi urte gertatu zela,
Jaizkibel natural irten zelako
parte har zezaten emakumeek,
aspaldi hola da danborradetan
joaredunetan, maskaradetan....
“betiko”en muga ez da zilegi,
festak direlako askatasuna.

2
Irunen bezala, Hondarribian,
balore bat ei da tradizioa,
baina gal daiteke ezinbestean,
ez badute jator eguneratzen,
patriarkatuak nahi duelako
zartagina ohi lez euki helduta,
ezin du onartu, emakumeek
ken diezaiotela tronu zaharra.
Nahiz feminismoa plazaratu den,
matxismoak nonahi agintzen darrai,
tamalez, neskatxak nahastu dira
mugimendu oro atzerakoian,
xextra konpon dadin Hondarribian,
zentzua sakonki sustrai dadila,
herrian batera esan dezaten,
"ze ondo gaur baita irailak zortzi".

*2018ko urriaren 14an*

*788*

**Orain presoak diozuelako**

1

Kartzela da gure nahiak
izorratzeko biltzen,
subjektiboki dizkigu
eskaerak amiltzen,
arrazoi zuzenak ditu
gezurrekin zirtziltzen,
zaintzako epaileari
ohi dizkio isiltzen.



2

Ia denok gaude lehen
graduan sailkatuta,
horregatik ei daukagu
Zaballa ukatuta,
bestalde eskubideak
dauzkagu urrituta,
komunikazio denak
net interbenituta.

3
Lehen gradua omen da
espea gogaitzeko,
bere nortasuna eta
arima suntsitzeko,
oinez darraigu, ordea,
xedeak lilitzeko,
sentimenduak gerora
plazetan goritzeko.

4
Nahiz iaz euren arauak
genituen onartu,
zuzendaritzan dirudi
ez direla ohartu,
gure bihotzak pilpiraz
zirelako elkartu,
esperantzaren ortzia
dakigula izartu.

5
Barruan zintzo gabiltza
bolaluma hartuta,
abokatuekin gogoz
maratoian sartuta,
nahiz ataka latzak gauzkan
aldiro hertsatuta,
herrian biziko gara
egia sustatuta.



6
Mendekua eta herra
tinko ditzagun estu,
irainak, zitalkeriak...
atseginaz deuseztu,
dispertsioa betiko
nahi dugu ezereztu,
bidaia txarrak ditzaten
hurko minek saihestu.

7
Aktiboak izateko
ari gara prestatzen,
zigortzaileen segadak
adorez ezeztatzen,
elkartasuna dugunez
egunero dastatzen,
laster hasiko baikara
lurraldea haztatzen.

8
"Orain Presoak" esanez,
lehen lez ari gara,
iheslarien baitetan
leher dadin zirrara,
goazen ametsak zertzeko
ongiaren olara,
hel gaitezen kartzelarik
gabe amnistiara.

*2018ko urriaren 14an*

*789*

**Ez dadila gal urriaren 20a**

1

Ia trostan igaro dira zazpi urte,
ebatzia pozarren txalotu zenuen,
Erakunde sendunak garbi behin betiko
urriaren hogeian esan zuenean,
gaurko kinka txepela kitzika ezazu,
falta diren kuttunak bueltatu daitezen.
Gatazkaren sugarra ez denez itzali,
aitzakiak diotsut merkeak direla,
diostazu espeak lehen lez daudela,
baina hurbil ditzaten zuk zer egin duzu?
Izarrei begira egon beharrean
konpromiso gehiago erakuts ezazu
atseginez eskaini zure emaria,
Esperantza erreka ez dadin agortu,
une oro gurekin gogora dezazun,
ez garela biziko libre haiek gabe,
euren alde hamaika herritan batuta
jar dezagun abian euskal auzolana.

2

Aizu behar zaitugu ataka gainditzeko
behingoz bizi gaitezen bake zuzenean,
militatzen hasteko ez dizut eskatzen,
baizik jator ekimen denak babesteko,
deserrian urtetan dauden erkideak,
oro senti dezaten herriko epela.
Ezin gara zain egon arranguratuta,
gatazka guk konpondu gura dugulako
jaiki zaitez hasteko adorez bidean,
elkarretaratzeak gorpuztu plazetan,
zurekin da izango zinez errazago,
gurekin ez daudenak pil-pil laztantzea.
Gure Euskal Herriak zure lakoekin
onuraren aroa ezagut dezake,
tinko sinets ezazu borroka eginez,
joan zirenen xedeak zer daitezkeela,
ospatzeko eguna helduko denean,
sentierak esna zaitzan alegera.

*2018ko urriaren 21ean*

*790*
**Erretxinaren enegarren terapia**

1
Arrazoi barik bortitzak lez naiz,
bide onetik atera,
amorrua da zoroki heldu
burmuinaren azalera,
aizu, nik nola senda dezaket,
makurra den izaera?
Haizeak esan dit, “lasai zaitez
on dakizun biziera”,
“senti dezazun kide minekin
sentiera alegera”

2

Sarri diotsut, “barka nazazu”,
gaur berriz dizut eskatu,
zinez jenio txarra dudala
ezin dut inon ukatu,
“beza ezazu”, modu onean
zuk didazu aholkatu,
hurkoak beti jator tratatuz
nortasuna orekatu,
kirioak utz itzazu lotan
gizatasunez jokatu.

3

Nire xedea izan dadila
izatea atsegina,
eta ez zakar barreiatzea
zuen artean samina,
susper dakidan gizabidea
elkartasuna adina,
aldiro adi egon nadila
zertzeko ahalegina,
txit dezazuen zuek usaindu
giro onaren lurrina

4

Arnasa luze hartzea izan
baita lehen ebatzia,
astirik hola euki dezadan
esnatzeko enpatia,
konpreni ditzan kideak nire
hitz sendunak alegia,
esan dezagun zut dagoela
bion arteko zubia,
xaloki ehun dezakegula
behar dugun utopia.

5

“Ez naiz ergelak lez” esan diot,
berriro ernegatuko,
zure aurrean horren ordez dut
umorea sustatuko,
barru beltzean geure ideiak
ditugu partekatuko,
kalean gero solas bikainak
zirraraz gogoratuko,
oraingo musu muzinduan zait
zoriona hedatuko.

6
Kemenez hasi nintzenez txingar
erretxinak amatatzen,
azkenean da nire mingaina
hasi leunki dantzatzen,
ez dizkit orain senak lehen lez,
hitz zatarrak deitoratzen,
zuekin ari naiz oneratzen,
hartu-emanaz gozatzen,
zera gaiztoak lurpetuta nau
bizigurak ferekatzen.

*2018ko urriaren 21ean*

*791*
**(2018.09.21, 22 eta 23an)**
**Zubietan iraultza txikiak**

1
Lehen bizigura zen Zubietari,
AHT falta zaio gal dadin,
kartzelaz, kasernaz ta erraustegiaz
txori barik mortu hutsa bihurtzeko,
ongile xaloak bertan bildu dira,
jendartean maita dezagun Ama-Lur,
iraultza txikiak egin nahi dituzte,
orainak ez dezan geroa birrindu,
aginte zekenak sustatzen dituen
kutsadura eta porlana gaintzeko.

2

Hiru eguneko kanpaldi sanoan
harremanak bikain gorpuztu dituzte,
xederik behinena herri hobea da,
zapalkuntza barik hartzeko arnasa,
ingurugiroa kaltetu duenez,
"kapitalismoa utikan!!" diote,
euren aldarria "dena denontzat" da,
ongizatearen printzak dastatzeko,
gu izan gaitezen ebazten dugunak,
Euskal Herriaren izarño gorriak.

3

Utopia ehun dezakegulako
abian jarrita iraultza txikiak,
esan “bai”, garapen jasangarriari,
ez gaitzan garapen jasangaitzak erail,
klaserik gabeko herria hobetsi
elkartasunean aterpe gaitezen,
Zubietan hori desiratzen dute
batu diren bihotz eredugarriek,
jator ari dira ideiak trukatzen,
auzolana grinaz praktika dezagun.

4
Zubietan zutik egon zaretenez,
ziegan bat batean izkiriatu dut:
“Su txikiak bor-bor jartzen du eltzea,
ideal zuzenak adina gogoa”.
Barrutik kideok gaur diotsuegu,
hunkitu garela mezu argiekin,
kemena eskaini diguzuelako,
zer ditzakegula ametsak diogu,
zuen lurrin ona ailegatu zaigu,
feminismoaren zapore askea.

*2018ko urriaren 28an*

*792*

**Euskara batuari.**
**Txillardegiri**

1
Ia mende erdi oinez egin du
gure euskara batuak,
Baionan hasi ziren osatzen
euskaltzaleak kontuak,
Ermuan egin zuen bezala,
idazle talde prestuak.
“Jakin”ek noizbait hartu zituen
bide berri arautuak.
Euskaltzaindiak gero elkartu
Arantzazun adituak,
euskal kulturan hola onduko
zituzten euren ortuak.

2

Garbizaleek gidatu zuten
zentzugabeki liskarra,
“H”-ak ekar ziezaiokeen
euskarari zoritxarra,
ez zegoen hor nonbait beharrik
eraldatzeko izarra,
euskalkiak ei ziren eurentzat
salbaziorako garra,
baina nazio ikuspegirik
gabe hur zeukan labarra,
batuak zuen, ordea, maitez
gaztetu ele zaharra.

3

On Txillardegi batuarentzat
izan zen lagun baikorra,
berak zioen, "Euskal Herria
izan dadila alorra",
Mitxelenak lez "Jakin"ek zuen
gorpuztu xede jatorra,
eta ez zuten jasan ustezko
porrot hutsaren min sorra,
euskalkiak lez batua ez zen
geratu mutu ta gorra,
erein ditzagun alai, has dadin
kantuan urretxindorra.

4
Orain, hezkuntzan, zineman, prentsan...
eroso dabil euskara,
lanean aldiz, ez da aritzen
elurra lez, mara-mara,
gaur egun gaixo batena baita
hirietan duen kara,
lege zekenek diotelako
sitsekin txartu ganbara,
Euskaraldiak plazetan zinez
nahi du eragin zirrara,
zuk Txillardegi, entzun dezazun
euskaraz haurren algara.

*2018ko urriaren 28an*

*793*

**Organo emaileei.**
**Pedro Garma Quintana gogoan**

1

Oi, organo emaile eredugarria
“altruista zarela”, miraz diotsugu,
atsegina delako zure nortasuna,
zinez bihur gaitezke zurekin gizalde,
guk izan nahi genuke zu bezain zintzoak,
behingoz irits gaitezen berdintasunera.
Eskaintzea bizitza zoragarria da
esperantza piztea zendu zarenean,
“gu hobeak izango ginateke” diot,
“lagunduko bagenu mardultzen zimela”,
Izan zaitez herkide, musu-truk emaile,
sumatzeko eria poz dezakezula.

2

Emaileen urratsa elkartasuna da,
ematea arnasa zain zegoenari,
ospitale batean galdetu ezazu,
izateko bazkide zein ei den baldintza,
beharbada istripuz hil gaitezkeenez,
organoak gaixoak balia ditzala.
Ezagutzen zenuen joan zen emailea,
hitz dagizu goizero hartzaile batekin,
zuk dagoen premia txit dazaguzunez,
organoak eskaini bizitzaren alde,
herritarrak sendatuz gizatasun osoz
utopia hurbildu dezakegu ere.

*2018ko azaroaren 4an*

*794*

## Ez diegu Hitler pizten lagako

1

Otso beltzak gorrotoz
hil zuen bildotsa,
arrazistak, gaztea
zelako arrotza,
anker horrek zeukanez
labana zorrotza,
ziplo bihurtu digu
kafea mingotsa,
lurraldea penaz da
esnatu laiotza.

2

Ozen sala dezagun
faxisten jarrera,
ez daitezen harroki
irten ehizatzera,
bota ditzaten euren
mamuak labera,
lagunak direnez jin
direnak geurera,
goazen migratzaileak
zintzo babestera.

3
Ez dezaten erabat
jendartea sutu,
migratzaile xaloa
aldiro izutu,
ez gaitezen bortxaren
aurrean mututu,
faxista kaskamotzak
ditzagun estutu,
irmoki diezaiegun
kolera larrutu.



4
Faxismoa ari da
nonahi emendatzen,
Europa lehengora
trostan hurreratzen,
arrotzak gezurrekin
ditu seinalatzen
karriketan beldurra
hasteko xaxatzen,
batuta has gaitezen
faxistak haizatzen.

5
Prestatzen dabiltzanez
ohi lez erasoa,
Europan eskuindarrak
dira arazoa,
etorkinekin eman
dezagun pausoa,
faxistek ez dezaten
samindu auzoa,
“ongietorri” izan
dadin hitz osoa.

6
Ez delako etsaia
eta aurkaria,
ez den lez, kanpotik jin
den futbolaria,
trata dezagun hurko
lez, iheslaria,
esan dezan, herri hau
da zoragarria,
gizaki guztiontzat
eredugarria.

*2018ko azaroaren 4an*

*795*

## (2012.04.05) Iñigo Cabacas Lizeranzuri

1

Iñigo ia joan dira zazpi urte
ertzain makur batek hil zintuenetik,
aitxak eta amak, Athletic-zaleek,
lagunek... zuzentza eskatzen darraite,
epaiketa hasi da auzitegian,
lurraldean Bilbon beste adi gaude.
Gau hartan gertatu zena oroituta,
bihotza berriro dardaratu zaigu,
nahiz Ugarteko zen baseko burua,
juezak soilik deitu du lekuko gisa,
Ares [(1*)] zu ez zinen egoki portatu,
Urkullu [(2*)] gezurra babesten zabiltza.
Herriak egia zehatz jakin nahi du,
ertzaintza zergatik bortizki jardun zen,
gazteek ospatzen zihardutenean,
Athletic-ek lortu zuen garaipena,
Nork agindu zien “Sartu denarekin”
“Kirruli” tabernan itua jarrita.



---

(1*) *Rodolfo Ares. Orduko Jaurlaritzaren barne sailburua.*
(2*) *Iñigo Urkullu, gaurko Jaurlaritzaren Lehendakaria.*

2

Manu eta Fina kemena zarete,
atsegina Jone [(3*)] abokatua lez,
Maria Diaz de Haron zintzo gaude,
karrika itsuan Iñigo gogoan.
ertzainak orduan oldartu zirenez,
maiz elkartu gara hemen zirraraz blai.
Basatiki jaurti zuenak pilota,
erantzukizuna eraman dezala,
hur dadila suma dezan sentieran,
Iñigo datzala gure pilpiretan,
gurekin atzo lez orain bizi dela,
ez delako hiltzen maitatzen duzuna.
Gaur sakonki gara zurekin hunkitu,
zuen negargura geurea delako,
zuek gaurdaino zut egon zaretenez,
gure miresmena sentitzen duzue,
nahiz herrak semea lapurtu zizuen,
Manu eta Fina gu Iñigo gara.

*2018ko irailaren 11an*



[(3*)] *Jone Goirizelaia.*

*796*

**Espezainen greba orokorra**

1
Espezain harroputzak
dira matxinatu,
soldata gobernuak
diezaien goratu,
irmo dute pertsonal
gehiago eskatu,
babes barik daudela
haserre salatu.



2
Estatuak nahitaez
behar du otseina,
ongi egin diezaion
lan arras zikina,
espetxea ohi baita
biltegi samina,
espeak gordetzeko
bortxaren osina.

3
Espezainen kinka ei
delako gogorra,
azkar eratu dute
greba orokorra,
guk lez, senti dezaten
zer den tratu sorra,
poliziak bizkarra
diezaiela torra.

4
“Eskubideak”, garbi
dute oihukatu,
baina gureak ohi lez,
dituzte urratu,
enpatia nahi nuke
eurekin sustatu,
behingoz dezaten euren
herra menderatu.

5
Grebarekin gaituzte
laster aztoratu,
patioan ordu bat
beluago batu,
bisitak dizkigute
gero ezeztatu,
otorduak hor nonbait
behintzat, zerbitzatu.

6
Barrua omen denez
errepresioa,
espezainak direnez
liskarren zioa,
gizarteratzea da
soilik desioa,
ongiaz jin dadila
absoluzioa.

7
Espezain askotxo da
nahita gizatxarra,
bengantzak uzten die
zigortzeko barra,
espeak jasaten du
zartailu lakarra,
barruaren barrua
delako laharra.

8
Espezain latza izan
ez dadin ergela,
gizatasuna izan
dadila itzela,
horien grebari deitzen
diot nik ustela,
ez delako zilegi
espetxe krudela.

*2018ko azaroaren 11n*

*797*

**Eutanasia eskubidea izan dadin**

1

Ohean zaudela pentsa ezazu,
ezingo zarela berriro jaiki,
arnasa hartzeko estu lotuta
gorrotatzen duzun makina bati,
zeharo galduta itxaropena,
tristuraz pairatzen egun berri bat.
Amaitu delako garai sanoa
uzkur beha zaude etxekoei,
gorputza minduta zauriz beteta,
errauts bihurtzea zure nahia da,
azken hatsa eman gura zenuke
gozatuta hurko minen ferekak.
Eurak agurtzea da zuk nahi duzuna,
laster bizinahia senti dezaten,
bisita zaitzaten Ama-Lurrean,
asteroko pozak konpartitzeko,
bizipen ederrak gogoratuta,
euren bihotzetan bizi zaitezen.

2
“Sedazioa da eskubidea”,
gure kontzientziak ozen diosku,
gaixo terminalak hori behar du,
gugandik duintasun osoz joateko,
eliza auzian ez dadila sar,
lilia zimeltzen hasi denean.
Giza izaerak gida gaitzala,
medikuen eta gaixoen hitzak,
adieraz dezala hil behar denak,
zelan joan nahi duen hilurrenean,
legebiltzarrean biltzarkideek
aho batez onar diezaiotela.
Ondo bizitzea eta hiltzea
gura dugulako gure herrian
guk eutanasia eskatzen dugu,
ez dezagun luze iraun alferrik,
ametsetan barrez ikus gaitzaten,
gurekin pozarren esna daitezen.

*2018ko azaroaren 18an*

*798*

**Hemeretzigarrena datorrelako**

1

Mende osoa preso
daramat barruan,
garbi ikusten zaizkit
zimurrak larruan,
Puerton egon ta gero
luze amarruan,
Kordoban herrak nahita
nauka esparruan.



2

Hemezortzi zenbaki
zerotik aurrera,
eurekin osatu dut
nire biziera,
hamaika kiderekin
ontzen egoera,
oraina konpartitzen
zinez alegera.

3
“Hemeretzigarrena
ez da izarrena”
hori pentsatuta zait
ilundu barrena,
zorionez dakusat
hur hogeigarrena,
aspaldi laga nuen
maldarik txarrena.

4
Hemezortzi urtetan
idazten gutunak,
jasotzeko zirraraz
zuen erantzunak,
hola dastatzen ditut
gustura egunak,
bizigura eskaintzen
dit elkartasunak.

5
Itxaropena ez zait
inoiz beheititu,
ez naizenez ibili
solik, da goititu,
bisitetan ederki
nauzue beztitu,
zigorra didazue
maiteki eztitu.

6

Iraganetik noa
etorkizunera,
zuekin elkartzeko
askatasunera,
oro arnas dezagun
zoria batera,
laster igoko gara
oinez Arratera.

7
Ia bi hamarkada
ortzian hegatzen,
hurkoen argazkiak
aldiro behatzen,
laztan xaloarekin
astero mintzatzen,
harremana behin eta
berriz elikatzen.

8
Kide minekin libre
gura dut atera,
irits gaitezen denok
jatorki etxera,
joan zirenentzat izan
dadila harrera,
eurekin hunkituko
zaigu sentiera.

*2018ko azaroaren 18an*

*799*

**(2018.10.13)**

**Karabana San Pedro Suletik irten zen**

1

San Pedro Suletik goizik irten ziren,
Honduras uztea zuhur ebatzita,
arnasa hartzeko lazturatik kanpo,
atakari behingoz iskin egiteko,
Guatemalatik joan dira Mexikora,
helmuga Estatu Batuetan dago,
orain gutxi haiek zortzi mila dira,
karabana doa aurrerantz poliki,
euren sostengua elkartasuna da,
herritar xumeek eskaintzen diete.

Gudalajaran zain daukate mortua,
Tijuanako mugan Trumpen harresia,
ez dira, ordea, konkistatzaileak,
esku-hutsik doaz ametsaren bila,
eremua noizbait lapurtu zieten,
multinazionalek, militarrek, marek...,
nahitaez beharrez abiatu ziren,
noizbehinka sentitzen dute etsipena,
atsedenik gabe nekea metatuz,
belaxkatu eta gaixotu daitezke.

2

Patxamama maite dute jaiotzatik,
baina aspalditik kolonoena da,
bost mende diraute berekoien menpe,
irainak jasaten uzkur pobrezian,
ondasunak zeken banatzen zutenez,
ongizate barik txarto bizi ziren,
zorira heltzeko bidean darraite,
euren haurrek goza dezaten oraina,
batera mafiak saihestu dituzte,
orain mehatxuak Trump izena dauka.

Nahiz lan egitea jateko den nahia,
gizatasun barik ukatzen diete,
soldaduak daude txarrantxen ostean,
ziplo utz ditzaten sartzen diotsete.
Aizue zuek lez, gizakiak gara,
zuen arbasoak lez, migratzaileak,
arrazismoa gal dezagun batuta,
gain ditzagun gerrak eta goseteak,
berdintasunean iratzar gaitezen,
mugarik gabeko mundu oparoan.

*2018ko azaroaren 25ean*

*800*

**Urrezko hagin, hondatu zara**

1
Afanak dakarrenez
gaztetan samina,
eraman dezakezu
luze eragina,
ez dakizun irudi
musua orbaina,
ez zaitez mozkortuta
izan kaskarina.



2
Astindu ninduenez
idisko txatxuak,
muturra zakar zidan
laztandu zoruak,
erizain finak josi
zizkidan puntuak,
"hortz bat galdu du" esan
zuen medikuak.

3

Ustez adorez nintzen
zezen-plazan sartu,
idiskoen aurrean
zoroki ausartu,
egundoko kolpea
azkar nuen hartu,
suminduta piztiak
ninduen lokartu.

4

Nire muturra zerbait
zenean edertu,
urrezko hagin zinen
distiraz agertu,
tamalez zahartuta
zarenez okertu,
haginlariarekin
zu zara aihertu.

5
Lau hamarkada egon
gara elkarrekin
dotore iraun duzu
ahoan hortzekin,
kili-kolo zarenez
hasi ajeekin,
infektatu didazu
oia erroekin.

6

Urrezko, ezin izan
zaitut begiratu,
nahi eta nahi ez zara
kartzelan hondatu,
galera gura nuke
Eibarren osatu,
noizbait zure hutsune
itzela tapatu.

7
Zurekin bizitza da
izan zoritsua,
gure hartu-emana
oro adeitsua,
nahiz ebatzi jatorra
ez den segurua,
aurki izan zaitezke
nire lauburua.

8
Urrezko Hagin puska
ez zaude gogoan,
baizik libre ni legez
harreren aroan,
ederki bizi zara
nirekin papoan,
zintzilik kulunkatuz
pilpiren alboan.

*2018ko azaroaren 25ean*

*801*
## Maitasunak osasuna eskain diezagula

1
Zergatik joan ziren garai joriak?
Ilun gaudelako galdetzen dugu,
gaztaroa denez zoragarria
urrun genekusan zahartzaroa,
edonon zirraraz ibiltzen ginen
gozatzen bizitza osasunez blai.
Gazteak garela harro diogu,

udaberri mina datorrenean,
negua, ordea, heltzen denean,
ahultzen hasten da sendoa zena,
pizkundea nekez gerta daiteke,
gu ez ginelako jaio betiko.
Esperantza gure lanabesa da,
bizinahiak iraun dezan luzaro,
desirak ederki mardultzen dira,
zinez direnean gauzagarriak,
horregatik, diot, “jarrai dezagun
gure artekoa naro bazkatzen”.

2

Izadian geunden paradisuan
zu eta ni eta “Lagun” leiala,
txorien kantuak bare dastatzen
zuhaitzen bakean kezkarik gabe,
guk ez baikenuen gehiago behar
sentitzeko pil-pil samurtasuna.
Gaitzek indargetzen gaituztelako,
aldats gora jarri zaigu oraina,
kartzelan horretaz maiz oldozten dut,
ebakuntza egin zidatenetik,
gu lehen ginena ez garen arren,
lehen beste barre egin dezagun.
Arnasa hartzeko berriz zurekin
gaur tinko diotsut, “itzuliko naiz”,
atseginak grina pitz diezagula,
goiari txerekin euts diezaiogun,
sentierak oro gaztetan legez,
zoriontasuna opa diezagun.

*2018ko abenduaren 2an*

*802*
**(2018.12.03)**
**Ahobizi, Belarriprest eta Bihotzgoxo Euskaraldian**

1
Ahobiziri esan
diotelako bai,
Euskaraldian izan
dira batzeko gai,
Belarriprest adina
Bihotzgoxo arrai,
ekimen atseginaz
daude desiraz blai,
Korrikan lez, euskara
aupatzeko nonahi.

2

Abenduak hiru da
euskararen data,
ez dadila sugarra
sekula amata,
Ahobizik, diosku,
“ez laga botata”,
Belarriprestek, “osa
dezagun kantata”,
diglosiari leunki
kentzeko ezpata.

3

Ahobizi zu zara
izango giharra,
euskara mina entzun
dadin barra-barra,
zu Belarriprest, berriz
bagaren aparra,
ortuak behar duen
goizeko langarra,
eta zu Bihotzgoxo
biharko izarra.



4

Belarriprest hunkitu
da Euskaraldian,
euskara duelako
laztandu mihian,
gaur lasai hitz egin du
takian-potian,
Ahobizi xaloaz,
plazaren erdian,
Bihotzgoxo eurekin
dago harmonian.

5
Herriak ez duenez
negarrez etsitu,
“Euskaraldia” franko
ezagutu ditu,
baina nekez dezake
euskara bizitu,
Ahobizik hori du
ohean oroitu,
legea gure alde
dadila argitu.

6
Euskaraldia zinez
bikain da bukatu,
Belarriprest ez baita
euskaraz lotsatu,
Bihotzgoxo jatorki
dadin lerrokatu,
Ahobizik txerekin
nahi du kitzikatu,
pizkundea dezagun
sakon ainguratu.

*2018ko abenduaren 2an*

*803*

**Gerran bortxatzen dituzten emakumeei**

1

Soldadu matxistak gizaki ankerrak
bizigura nonahi mintzen ari dira,
lehen eta orain antzerako eran
amaren lakoen bizitzak hausteko,
patriarkatuak heziko zituen,
ez dena zilegi bortxaz egiteko,
sinesduna izan edo ez berdin da,
sutautsak harroa kraka bihurtzen du.
Jeneralak dena libre uzten die,
garaipen bortitza net ospa dezaten,
miserian bizi den emakumea,
kriminal likitsen ehizakia ohi da,
gerraren erpeak lurpera ditzagun,
matxisten zakilak, zitalen fusilak,
bortxatuek pil-pil sumatu dezaten
feministen giro solidarioa.

2

Kongon, Nigerian, Mexikon, Sirian...
izuaren oihu latzak dantzuzkite,
zelan har dezake ontzat jendarteak
emakumeei maiz degietena?
Nazio Batuen Erakunde sorra
nora beha dago ez ditzaten bortxa?
Boluntarioek artatzen dituzte,
baina ez da soilik eurena ardura.
Drama uxatzeko borroka gaitezen,
ez daitezen neskak ikaraz zimeldu,
samina gainditzen lagun diezaiegun,
giza izaeraz arima suspertzen,
bakearen zolan soldadurik gabe
atseginak laztan ditzan bortxatuak,
feminismoaren bidean sor dadin
xalo eta sano gizaki berria.

*2018ko abenduaren 9an*

*804*

**Urkulluren eskaera bati**

Habanera

1

Urkullu omen delako
etikaren meatzea,
txarto egon zen hiltzea
eskatzen du aipatzea,
ez denak, berriz, ebatzi
zuen armak lagatzea,
egoera hobetzeko
esperantza finkatzea,
asmoa denez gatazka
zuzenki bideratzea,
hobe genuke bortxaren
oinarria urratzea,
tamalez, kostatzen zaigu
konponketa osatzea,
sasidia segatzea,
zelaia ihinztatzea.

2

Lurraldean denok dugu
bortizkeria sufritu,
gertatu dena nahi dugu
kontatu eta oroitu,
arren, ez dezala inork
bere ardura eztitu,
ezta besteei ere
barkamena exijitu,
Erakundea denean
zolan urtuta sustraitu,
estatuek soilik dute
bengantza gogor bizitu,
Urkulluk bere xedeak
argitu beharko ditu,
behingoz batera dezagun
ataka ondo gainditu.

3

Bortxa ez dela zilegi
ezin du inork ukatu,
beraz erantzukizunak
zehatz ditzagun banatu,
gero beharko ditugu
praktika beltzak berdatu,
gatazkaren aje denak
demokraziaz haizatu,
estatu arrazoi gaitzak
ez ditzala arbuiatu,
herrien eskubideak
armekin berriz zanpatu,
horrela gintuen Francok
noizbait ia lurperatu,
horregatik zintzo ziren
euskaldun batzuk altxatu.

4
Urkulluren eskaera
izan da maltzur samarra,
gutarrena ez zelako
izan txinparta bakarra,
euregaz izan ohi zuen
jarrera erabat txarra,
boterearekin, aldiz,
indargetzen zaio garra,
urrun dauden minen alde
izan dadila indarra,
erauz dezagun errotik
mintzen gaituen laharra,
ortzian izeki dadin
amnistiaren izarra
zazpiak bat jos dezagun,
euskal jendarte nabarra.

*2018ko abenduaren 9an*

*805*
**Zaporeak eta Bizilagunak elkarteko kideei**

1
Chios eta Lesbosen hotz dagi,
hori bera diote Olinpo mendian,
basa astun hezea pairatzen dutenez
iheslari denak lez, migratzaileak blai,
kinka txarra delako kanpalekuetan,
Europa ertz horretan krudelkeria da,
haurrak eta zaharrak arriskuan daude,
andrazkoak matxista irritsuen mende,
gerran legez, bortxatzen dituztenez neskak,
gizatxarrek ez dute babesik merezi.

Zaporeak maiz doa Grezia urrira,
iheslari erkinak elika daitezen,
bere molde samurra elkartasuna da,
atseginez onura eskaintzen die,
zorigaitza murrizten zaielako hola,
bizinahiak noizbehinka besarkatzen ditu,
duinki janzten baitu arropekin ere,
Euskal Herri noblean bildu eta gero,
anker hutsak, horrez gain, salatzen ari da,
esparruan izua hedatzen dutenak.

2
Eskuindarrak Europan indartu direnez,
Zaporeak Grezian sarri lekuko da,
arrazistak, ordea isiltzen ohi ditu,
ondasunak aldiro banatzen musu-truk,
gorrotoa mundutik haiza genezake
gizakien arteko ezagutza landuz,
ez daitezen besteak aurkariak izan,
lañoki hur gaitezen irria musuan,
harresiak ederki lurtu ditzakegu,
egokiro gaindituta aurreiritziak.

Zaporeak antzera, tink Bizilagunak,
Euskal Herri anitza ehuntzen ari da,
bertan eta kanpoan jaiotako txontak
gure herri askotan jator batu dira,
familiak batera bazkaltzera doaz,
plazerez has daitezen bihotzak taupaka,
jendartea gaur eta bihar izan dadin
ghetto eta zokorik gabe zoriona,
iheslari zintzoek suma dezatela,
txit izango direla ongietorriak.

*2018ko abenduaren 16an*

*806*

**Hamargarren urteurrenean aitxari eta amari**

1
Abenduak hamar da
leunki ailegatu,
guraso xarmantak zait
soa distiratu,
ohi dudan legez ziegan
zaituztet ondratu,
bertso-sorta hau kantuz
dizuet opatu.



2
Guk nahitaez darraigu
Kordoban barruan,
azken lau urteetan
gu gaude mortuan
gogoa, berriz, dabil
asaben zoruan,
umetan lez ibili
gara Kalamuan.

3
Jadanik hamar urte
zinetela batu,
bihotzaren zelaian
emeki pausatu,
gure zirrara garbi
duzue sumatu,
biziguraren xarma
gozoro dastatu.

4
Zuekin pil-pil daude
ere senideak,
noizbait joan zitzaizkigun
hurko min maiteak,
maiz oroitzen ditugu
pozaren barreak,
xaloki geniozen
urrezko eleak.

5
Giza eskubideen
data ezaguna,
aukeratu zenuten
batzeko eguna,
nahiz dolua zitzaigun
egin eraztuna,
urteurrena orain
oro da kutuna.

6

“Aitxa hil da zu jaio
zinen egunean”
esan genuen ama,
biharamunean,
orain zuek zaudete
taupaden gunean,
laster biziko gara
askatasunean.

7
Zuen hutsunea da
sakon fisikoa,
presentzia ariman,
aldiz, magikoa,
prestatzen ari gara
zuekin geroa,
Eibarren izan dadin
harrera beroa.

8
Izadian daukagu
hegan sentiera,
zuek zertu zenuten
gure hasiera,
nahiz gogorra izan zen
zuen amaiera,
txukun dago bizipen
ederren kaiera.

*2018ko abenduaren 16an*

*807*

**San Andres elizari adeitasunez**

1

Zu San Andres eliza, zaharrena zara,
zure abaroan Eibar zertzen joan zen,
ohorea merezi duten arbasoek,
maitasun osoz eraiki zintuzten,
hormek berba kantuan egingo balute
euren biziera jakingo genuke.
Zuregandik hurrean jaio izan nintzen,

Bidebarrietan plazerez, hain zuzen,
inguratzen zintudan adiskideekin
umetan jolasten ta antxintxiketan,
gero zure barnean fedez sartu nintzen,
hamaika sinesle lez belaunikatu.
Gaztaroan zurekin maiz egoten ginen
euskara batua ikasteko asmoz,
abadeek egia kontatu ziguten,
Euskal Herria zer zen gezurrik gabe,
herri hobe batekin amesten genuen
diktadura barik ta eskubidez blai.

2

Bataiatu ninduten harrizko pontean,
gerora, ordea, baztertu zintudan,
zalantzetan murgiltzen hasi nintzenean,
zugandik poliki alde egin nuen,
nahiz geroztik salatu dudan hierarkia,
eliza pobrea oro prezatzen dut.
Batu ginen aitxaren hiletan berriro,
une tristea dut zirraraz oroitzen,
ferekekin zertxobait suspertu bainintzen,
zure Araozen erretaulak daki,
horri esker Puertora onik heldu nintzen
espetxez espetxe dolua gogoan.
Ezkilekin jaietan esnatzen ninduzun,
goizero ordua zehatz zeniostan,
elkar dugu bi urte barru ikusiko,
San Andres, adeitsu agurtuko zaitut,
bizipenen partaide izan zarelako,
zurekin koskortzen hasi nintzelako.

*2018ko abenduaren 23an*

*808*

**(2018.10.20)**

**Orain presoak eta iheslariak**

1
Urriaren hogeian jin
Antigua auzora,
Donostia bihur dadin
desioen agora,
ezerezean dezagun
mendekua zokora,
presoak nonahi ditzagun
maitasunez ohora.



2
Aniztasuna kalean
dagoenez batuta,
“orain presoak” diogu,
eskutik oratuta,
gaixoak, zaharrak... bizi
daitezen askatuta,
sakabanaketa laga
dezagun pitzatuta.

3
“Orain presoak” diosku,
garbiki aldarriak,
amnistiaren bidean
ken ditzagun harriak,
buka daitezen bidaia
bidegabe larriak,
krabelin gorriek ase
ditzaten egarriak.

4
“Orain presoak”, jakina,
eta iheslariak,
elkarbizitzaz ditzagun
erauz gaurko hesiak,
itzul daitezen herrira
osasuntsu elaiak,
bedatseak dirdiraraz
diezazkigun begiak.

5
Herritarrekin jatorki
landuta balioak,
ea gauzatzen ditugun
behingoz amets zintzoak,
orain ez daudenak izan
daitezen aktiboak,
erein ditzaten gurekin
utopien soroak.



6
Ez dauden minak ditugu
gure baitan sentitu,
ezlekuetan gu legez
oro dira hunkitu,
manifekin nahi ditugu
sentierak bizitu,
irrintziak harreretan
plazak ditzan goritu.

7
Donostian denok dugu
sumatu atsegina,
presoak egiten ari
diren ahalegina,
gaurkoa izan delako
enegarren lagina,
ondo legoke eurekin
gaur batuko bagina.

8
Orain, presoak ditugu
eskubidez blaituko,
ataka tamalgarria
diegu ongituko,
geure adorea ez da
sekula gutxituko,
kartzela barik zerua
zaigu oskorrituko.

*2018ko abenduaren 23an*

*809*

**Legioak ereserkia kantatzen duenean**

1

Legioak noizbait zertu zituzten
babesteko lur kolonialak,
bai Frantziak eta bai Espainiak
erruki barik zerabiltzaten,
Europa nahitaez bizi delako
goiko klaseen beharren mende,
gaurko Argelian eta Marokon
arrazismoa zer den dakite,
ezarri zieten ele arrotza
inposatzeko euren ordena,
herritarrek sarri pairatu zuten
kriminal hutsen hamaika bala.

Boterea berriz erkin ez zedin,
Rifen zorua odoldu zuten,
“Estatu kolpea”, piztu zenean,
Francoren alde aritu ziren,
terrorea azkar hedatuko zen
“gorri” xaloen lurraldeetan,
herritar xumeak erail zituzten,
diktaduraren normak zin egin,
ahuntza aurretik zihoan beti
garaipenaren desfileetan,
erakustaldiak matxistak ziren,
harrokeria eta sutautsa.

2

Herio beltzaren mutil-lagunak
ankerrak beste ergelak dira,
herri afrikarren zapaltzaileak
Jesukristoren zale faltsuak,
euren gorputzetan zakar dauzkate
tatuatuta hitz hipokritak,
Malagan adorez kantatzen dute,
Aste Santuan prozesioan,
ustez maitasuna den sinesmenak,
elizan armak onartzen ditu,
kristauek zirraraz entzuten dute
basati horien ereserkia.

Millan-Astray bortitz faxistarena
legioaren nortasuna da,
kulturarentzat zen etsai makurra,
bakearentzat arriskutsua,
Unamunok hori pentsatu zuen
Samalancan zut bere aurrean,
legionario bortxa baztertu,
laga ezazu herraren tropa,
lehenetsi giza eskubideak
gizatasuna hegalda dadin,
Herio zekenaz ezkondu ordez
elkartu zaitez Bizitzarekin.

*2018ko abenduaren 30ean*

*810*

**Dieta biguna osasuna da**

1
Kideok tentuz dugu
asetzen urdaila,
gulak hautsi ez gaitzan
orekaren gila,
askatasuna jingo
denez gure bila,
arren, bazter dezagun
gozokien pila.



2
Aizu, zaborra jaten
zara lodituko,
eta odola zaizu
oro gaizkituko,
gogoak diostana,
nik dut konplituko,
azukrea ta gatza
ditut urrituko.

3
Espetxetik ez nadin
atera erreta,
tripari jartzen ari
natzaio arreta,
gorputzak ez diezadan
egin errieta,
osasuna zaintzeko
eskatu dut dieta.

4
Fruta eta muesliaz
dieta dut osatzen,
koiperik gabe ohi naiz
kemenez esnatzen,
bihotzari nik diot
onura opatzen,
korrika hurko minak
ditut ohoratzen.

5

Ziegan geroa zentzuz
nabil antolatzen,
zigorraldia hola
dut aprobetxatzen,
dietaz hasi naizenez
ondo elikatzen,
gorputza ta burua
ditut gobernatzen.

6



Maitea, ez naizenez
jaten kaskarina,
orain nire itxura
ez baita erkina,
barnetik kanporatu
dudanez ozpina,
zu bezain xaloa naiz
izango sorgina.

7
Dieta lehenetsi dut
soa alaitzeko,
neurriz janda kezka
barik bizitzeko,
zurekin lili mina
penak gainditzeko
izadiaren xarma
berriz sentitzeko.

8
Koipeak ez diezadan
aorta trabatu,
elikagai sanoak
ditut aukeratu,
maite zaitudalako
dietan naiz pausatu,
zugaz nahi dudalako
sasoia ospatu.

*2018ko abenduaren 30ean*

*811*

**Ali omen den haurtxoari**

1

Yemenen haur asko hilzorian daude,
patriarkek gerra piztu zutelako,
izurriteekin, goseaz, bonbekin...
euren bizinahia zimeltzen ari da,
Sirian lez arma ekoizleak pozik,
bezero onenak saudiarrak dira.
Ali, argazkiak histuta laga nau,
zure gorpuzkera mirrina delako,
zu etzanda zaude terraia batean,
medikuak jarri zaitu pisatzeko,
negarrez diozu deitzen munduari,
izua musuan salatzen gaituzu.
Gaur 8n ataka latza antzeman dut,
jaio zaren arren, nekez bizi zara,
gurasoek legez, zirraraz diotsut,
bakarrik duzula bortxa ezagutu,
Ali, sentieran sartu zarelako
zuretzat ongia baino ez dut nahi.

2
Ali gizajoa, jaio zinenetik,
zurekin patua makurra izan da,
nahiz jaioterria zoragarria den,
herraren mamuak gogor mindu zaitu,
norberekeriak agintzen duenez,
zure ametsetan ez dago izarrik.
Zu lako haurtxoak ahaztu ditugu,
Europan zuekin txarto jardun gara,
zuen jostailuak urrun samar daude,
gerretan eurentzat ez dago lekurik,
galtzaileen zolan jaio zaretenez,
onura bortizki ostu dizuete.
Ali, entzun nire desio xumea
zure osasuna oro susper dadin:
Zentzuak bortxari garai diezaiola
armak eta gerrak bakean urtuta,
haurtxoek Yemenen jakin dezazuen
irriak jolasten ernatzen direla.

*2018ko urtarrilaren 6an*

*812*
**Mikeli.**
**Adiskideei**

1
Zu Mikel, etorri zinen
lagunen izenean,
negu gorrian izan zen
egunik hotzenean,
ez nauzuela ahaztu
esan zenidanean,

zurekin pausatu nintzen
zorien haranean.

2
Une zoragarri franko
ditugu konpartitu,
sanandresak gogoratuz
bihotza zait hunkitu,
ez naizelako zuekin
inon inoiz gogaitu,
zuen laguna izaten
zinez nahi dut segitu.

3
Ez direlako pilpirak
inoiz amatatuko,
zuen babes zintzoa dut
edonon goratuko,
ondo dakit bizipozez
gu garela batuko,
adiskidantza Untzagan
dugula ospatuko.

4
Zuekin beti dotore
dator elkartasuna,
oparitzen didazue
musu-truk maitasuna,
nahiz zigorraren aldapa
luzea den astuna,
zuei esker ez baita
nire kara ituna.

5
Zuk bisitatu ninduzun
kateak birrintzeko,
gogoan neuzkan zalantzak
irribarrez gaintzeko,
balio izan zitzaidan
iluna urdintzeko,
zigorraldiaren zama
zuzenki arintzeko.

6
Fotoen aurrean, diot,
ez garela zaharrak,
ez direlako agortu
gaztaroko aparrak,
oinez izan ez gaitezen
Kalamuan baldarrak,
nik zuek beste aldiro
lantzen ditut giharrak.

7
Mintzalekutik joan nintzen
zu jator agurtuta,
lagunen goraintziekin
musua elurtuta,
Arrate oroitzan pizten
denean loratuta,
zuekin zelai berdean
nago liluratuta.

8
Ziegan maiz batera gaude
desiren eremuan,
une dirdaitsu horietan
ez nago esparruan,
zuek agertzen zarete
nire sentimenduan,
argia goizean hasten
ari den momentuan.

*2019ko urtarrilaren 6an*

*813*

**Haur zaurgarrientzat Harrera-Etxeak**

1

Aitxa-ama batzuk gai ez direnez hezteko,
familia-harreren beharrean ei gaude,
hamaika haur zaurgarri ez dadin gal geurean,
makina bat arrazoi gordin dela medio,
gure bihotz gorriak baietz esan dezala,
etxe berri beroan arnasa har dezaten.
Jendartea ekinez dezakegu eztitu,

atsegina opatuz ederkiro hobetu,
deiadarrak kalean ongarritzen dihardu
bihoztien gogoak, utopien sustraiak,
egoismo petrala deuseztatu ahala
ongiaren taupadak sentituko ditugu.

2

Haurra jin da etxera, gure sendi txikira,
guk maitatu nahi dugu bizi dadin gustura,
gurasoen beharra daukala maiz diosku,
eurek zuten onartu proposamen gogorra,
hitzarmena jarraituz hilean behin dakuski,
sentiera egoki asebete dezaten.
Bere irri sanoak oro gaitu saritzen,
etxekotu zelako gurekin da koskortu,
neskatxa guk beste du ezagutu zoria,
desioak ikasten erdiesten ari da.
Atzo gure etxetik jator joan zen esanez:
“Orain dauzkat bi zeru, bi oasi, bi sendi”.

*2018ko urtarrilaren 13an*

*814*

**ETB Euskal Telebista izan dadin**

1

ETB izan zaitez
jatorki gutarra,
zazpi herrialdeen
ortziko izarra,
arren, ez iezaguzu
opatu txatarra,
baizik bertako eta
kanpoko zilarra.



2

“Gaur Egun”-ek ematen
duelako pena,
iraintzen berriekin
gure adimena,
zure pantaila izan
dadila gardena,
herrixka politaren
leihorik onena.

3
ETB, diotsugu,
“izan zaitez duina”,
ikusle euskaldunen
adiskide mina,
aniztasunak bezti
diezazula soina,
izan zaitezen gure
ametsen hargina.

4
Denona izan zaitez
Euskal Telebista,
txepela izan ordez
adorez tximista,
egoitzari euskara
iezaiozu zizta,
zentzuz kate denetan
dezazun mihizta.

5
ETB, zarelako
umeen txoria,
eurek sentitzen dute
zurekin loria,
opari iezaiezu
orain lez zoria,
izan dadin zaleen
erreka joria.

6
Udaberrian pizten
denez izadia,
txoritxo, hel dadila
zure loraldia,
gogoz erein ezazu
saioen zelaia,
behingoz izan zaitezen
ikusleen nahia.

7
Txoritxo, zintzo landu
arlo soziala,
gure desirek izan
dezaten ahala,
ez ezazu lehenets
botere petrala,
herriak “gu” zarela
sumatu dezala.

8
Txoritxo, zuk erleak
lez bere erlauntza,
gozo presta ezazu
gure oturuntza,
izan zaitez kirola
adina hezkuntza,
euskal kulturen horma
janzten duen huntza.

*2019ko urtarrilaren 13an*

*815*

## Oihanetako Robin Hoodi

1

Robin Hood-en mitoa unibertsala da,
hankaperatuentzat osten zuelako,
Sherlkwood-eko nobleak zekenak zirenez,
herritarrak denaren beharrean zeuden.
Egoistak gaur egun bankariak dira,
makina bat etxerik gabe laga dute,
boterea gaizkien zorua delako,
lapur banden mafiak geraraz ditzagun.
Robin Hood-ek betiro garaitzen zuenez,
zinemetan musuak alaitzen zituen,
zoritxarrez oraintxe preso egongo zen,
ez delako mundua ipuinen lakoa,
baina filma ikusten ari zarenean
uste duzu herria on dezakezula,
distopia geurean gainduko dugula
idealak adorez abian jarrita.

2

Robin Hood-en taldea iraultzailea zen
berdintasun joria xedea zelako,
sherif-aren jarduna ez zenez zilegi,
Marianek eurekin bat egin baitzuen.
Oihanean bakea pausatu nahi zuten,
ez zitzaten goikoek xumeak zanpatu,
“ondasunak”, zioten, “banatu ditzagun”,
bortxa eta maltzurrak ezerez zitezen.
“Itzul zaitez”, diotsut, Robin ametsetan,
egoera Europan makurra delako,
zorionez izarrak dir-dir hasten dira,
kontzientzia gorriak pizten direnean,
esperantza berdeaz grinaz dihardugu,
zentzuz berdin ditzagun klase sozialak,
Hood, zuk beste dakigu ondo bizitzeko,
solidaritatea lanabesa dela.

*2019ko urtarrilaren 20an*

*816*

**(1949 Arrigorriaga - 1978 Angelu)**

**Argalari**

1

Argala, zu gurekin
darraizu bizitzen,
jatorki dugu zure
izana oroitzen,
herria ari gara
zurekin ongitzen,
zazpiak bat xedea
zuzen eraikitzen.

2

Zu gabe, iraultza zen
ilundu Argala,
bizigura bihurtu
zitzaigun tamala,
bidean izan zinen
gutarren ahala,
militante itzela,
erkide apala.

3
Borrokan sartu zinen
Francoren aroan,
diktadura uzteko
Balberen zokoan,
Monzon eta hurkoak
hur zeuden alboan,
idealak zehazten
ideien arloan.

4
Madrilen zinen beste
kideekin batu,
Carreroren ekintza
zenuten gauzatu,
zuk, KAS alternatiba
zenuen sustatu,
eskubideak behingoz
genitzan eratu.

5
Erreforma zelako
frankisten faktura,
Txibertan bildu zinen
lortzeko haustura,
EAJ-k zuenez,
esan, “ez dut gura”,
sentitu genuen zuk
beste negargura.

6
Zuk, langile klasea
zenuen ondratu,
“sentimen horrek gaitu
ahizpatzen”, aipatu,
ezker jakobinoa,
ostera, salatu,
herrien kontra zeukan
norma borrokatu.

7
Nahiz Arrigorriagan
belztu ziren soak,
gogor gintuelako
mindu faxismoak,
hilketak zituenez
elkartu gogoak,
mardulik dirau zure
xarmaren erroak.

8
Jose Migel, pilpira
zara bihotzetan,
sentitzen dugu zure
kemena zainetan,
ortzian dir-dir zaude
gau izartsuetan,
deserriko minekin
amets gorrietan.

*2019ko urtarrilaren 20an*

*817*

**Osaba baten oldozpena kartzelan**

1

Nik izan ez dudanez seme-alabarik,
noizbehinka gai horretaz ziegan pentsatzen dut,
odolaren kontuak eta abizenak,
ez zeukaten niretzat zinez garrantzirik,
naturala delako aitxa izatea,
gaztaroan erabat desiratzen nuen,
iruditzen zitzaidan erarik onena
zentzatzeko burua, bizitza ontzeko.
Sentierak gogoan agintzen duenez,
etengabe, ziostan, “aitxa izan zaitez”,
bizitzaren kilika sentituko duzu,
haurtzaroa, halaber, garbi oroituko,
jaio den haur xarmanta leunki laztanduta,
sehaskaren alboan ametsak zainduta,
elikatuz, bainatuz, fardela jarrita,
algarekin aldiro hunkituko zara.

2

Sarri, diot ilobak maite ditudala
nire hurko xaloen haurrideak beste,
eurek gure ordeak direla dakite,
arbasoak geroan izango garela,
noizean behin Kordoban dakuskidan arren,
nik ederki dakizkit dagitzaten obrak,
guk bezala oraina gidatuko dute,
gogoratuz izana piztuko gaituzte.
Ilobei apalki esan gura diet,
maitasun hitz kutuna ez dadin lurrundu:
Solidaritatea susta dezatela,
arrazismo petrala tinko borrokatu,
mendekua ta herra haiza ditzatela,
bakearen kimuak atera daitezen,
elkarrekin euskaraz mintza daitezela,
gure herri zaharrak mardul iraun dezan.

*2019ko urtarrilaren 27an*

*818*

**Bizitza ona zain dugu**

1
Ailegatuko gara,
desiren bortura,
irriak ken diezagun
aise goibeldura,
gogoz edango dugu
iturriko ura,
osteratxoak izan
daitezen onura,
atsegina ariman
dezagun aingura.

2

Bengantza tinko ari
gara ekiditen,
ideal zuzenekin
bidea egiten,
zintzo darraigulako
herria ereiten,
goiztiriari ari
gatzaio itxoiten,
espetxe barik laga
gaitzan irakiten.

3
Bizitza ona nahi dut,
malkorik gabea,
barrutik at zurekin
oro lokabea,
maitasuna delako
gure zutabea,
bero mantendu dugu
taupaden labea,
ez baita eroriko
etxeko habea.



4
Ilusio berdea
ez baita horitu,
naturan bedatsea
delako berritu,
bizipenak ditugu
pozarren oroitu,
samurtasuna zaigu
erabat bizitu,
harremanean, berriz,
zoria sustraitu.

5
Guk urtetan ditugu
aldapak gainditu,
ametsak hitz egiten
zentzuz ongarritu,
esperantza horrela
mardul da goititu,
osasuna musuan
berriro lilitu,
bizinahia gogoan
nabarmen ongitu.

6
Arratek, “zorionak”
digu xuxurlatu,
arratsak oskorria
ederki opatu,
pagoen abaroan
nauzu besarkatu,
iretargi betea
gaitu liluratu,
askatasuna dugu
tamainan dastatu.

*2019ko urtarrilaren 27an*

*819*

**Ortzaizeko ausartei**

1

Zuek, diot, hauspoa izan zinetela,
uneak eskatzen zuen ausardia,
estatuek zelaia ez zezaten kalte,
txara mozteari ekin zenioten,
botereak amorruz hertsatu zintuzten,
ezin zenitzaten ezereztu armak.
Jazarpena abian laster jarri zuten,

trintxeran sartuta jarraitu genezan,
bidegabe atxilo eraman zintuzten,
ekiaren printzak ez zitezen ager,
zorionez ekaitza urrundu genuen,
auzolanaz herra arras indargetu.
Segalari gehiago etorriko ziren,
hasitako lana burutu genezan,
eragozpen ugari jasan eta gero
kemenak ortzira eraman gintuen,
baina ez da oraindik irria loratu,
guk "Orain presoak" atzo lez diogu.

2

Ortzaizeko hurkoak zuen eredua
ataka on zedin ederra izan zen,
errepresioari aurre egiteko
herritar zintzoek bat egingo zuten
esperantza jardunda ehun zeniguten,
bide atsegina babestu genezan.
Aizkoratik arbola mardul haziko zen,
fruituak nahi beste emango dizkigu
bedatsean xedeak elika ditzagun,
guk ebatz dezagun zer izan nahi dugun,
ez delako bakea hegoak haustea,
ez dadin txepetxa libre hegaldatu.
Erakunde zaharra herrian ur zedin,
Aietetik heldu ginen Arnagara,
ortzadarra Ortzaizen ernatzen hasi zen,
armagabetzea sostenga genezan,
Teresa, Jef, Xabier, Iñaki ta Grazi
zuen irrintziak hunkitu gintuen.

*2019ko otsailaren 3an*

*820*
**Erleak bizirik**

1
Erletegia omen da
jendarte perfektua,
erreginaz, eme antzuz
et(a) arrez osatua,
bakoitzak dauka berezko
ardura zehaztua,
abaraskan ekoizteko
mendetako fruitua.



2
Senperen hil dira apis
melifera ederrak,
erantzukizuna ei du
barro onddo txikerrak,
gure iritziak izan
ez daitezen alferrak,
bakean laga ditzagun
erlearen bazterrak.

3
Erletegian tamalez,
erleak zolan dautza,
erabat galdu da ere,
hamaikatxo arrautza,
orain nork eramango du
lorez lore lorautsa?
eta hola jendarte harroa
egin daiteke hautsa.

4
Nahiz dakigun nork dituen
erasotzen erleak,
haizeteak daramatza
salaketen eleak,
eurentzat zalantza barik
gu gara gaizkileak,
Asiako erle tzarrak
bezala hiltzaileak.

5
Kaltegarria delako
garapen jasangaitza,
nabarmen izorratu da
erlearen bizitza,
berekoien helburua
beti denez likitsa,
Basajaunek aspaldi du
bere musua hitsa.

6

Erlezainak etengabe
ari dira kexatzen,
erleei sena ari
zaielako aldatzen,
izadia dugulako
zekenki ustiatzen,
ez dute kutsaduraren
erruz nektarra batzen.

7
Burrunba entzun nahi nuke,
erleen erlaroa,
ez dadila honda gure
eraginez aroa,
desagertuko balira
agur lur oparoa,
nahitaez ezereztuko
baitzaigu abaroa.

8
Oi, erle langile mina!
Oi, erle emankorra!
Zu, ordaintzen ari zara
kapitalisten zorra,
jator borroka gaitezen
hobe dadin alorra,
ezti hutsa izan dadin
erlauntzaren altxorra.

*2019ko otsailaren 3an*

*821*

## Mariren aholkuak

1

Mariren kobaren atarian gaude,
heltzeko gorriak ikusi ditugu,
Anbotoko dama ez dagoen arren,
bere xarma sakon nabaritu dugu,
barrunbeetan hor nonbait egongo da
behor zuri baten itxura hartuta,
guk ondo dakigu magikoa dela
jentil naturalen sinesmen sanoa.
Eguna oskarbi argitu delako,
ikusmirak zinez kilikatu gaitu,
gure idazkiak laga dizkiogu,
joango garenean lasaiki lei ditzan,
amildegi latza berriz zain daukagu,
bertatik hamaika lagun amildu da,
mesedez, erantzun iezaguzu Mari,
herria ganoraz eratu dezagun.

2

Mari zeharkatzen goia dakusagu
sua jaurtiz lau zaldiko gurditik
Zabalaundin gaude beregaz batzeko,
aholku zuzenak jasotzeko asmoz,
zelai ederrean leunki pausatu da,
urdinez jantzita ortzia dirudi,
agurtu ondoren besarkatu gaitu,
begiak kliskatuz hauxe esan digu:
Euskaraz mintzatu, auzolana landu,
Ama-Lur maitatu apain iraun dezan,
klase sozialak zentzuz ezereztu
biztanle guztiak “gu” izan zaitezten.,
bakea hel dadin matxismoa galdu,
feminismoaren lurra ongarritu,
gereziak mardul lilitu daitezen,
espetxeak behingoz hustu itzazue.

*2019ko otsailaren 10ean*

*822*

**Udaberrian maitasunak laztan gaitzala**

1

Maitasuna kantuz datorrenean,
udaberria esnatzen da,
eguna poliki hazi ahala
sentimendua ontzen zaizu,
pizkundea nonahi sumatzen duzu
izadiaren barrenean,
ekiaren printzek suspertzen dute
belardi laiotz izoztua,
Ama-Lur onberak gozo, diozku,
"bizitza ari naiz berritzen".

Txorien txortxorrak ederki dira
baso sarrian sinfonia,
pagoen hostoak leun kulunkatuz
paradisua kerizpean,
erreka gardena trumilka dator
bazterrak blaituz emariaz,
zelai lurrintsura hegatzen doaz
erleak eta tximeletak,
haziak ernatzen ari baitira
janzteko larrain emankorra.

2

Negu gorriaren gau luzeetan
udaberria ametsa da,
borrokak onura ekar diezagun
esperantzaren goiztirian,
desioak noizbait berda daitezen
lurraldearen eremuan,
aldiro argia erregutzen dut
ez gaitezen gal ilunean,
euskal herrietan eskubideak
dasta ditzagun arratsean.

Isolamendura ez da iritsi
irrintziaren oihartzuna,
ekaitzaren mende luze darraigu,
ikusi barik ostadarra,
Bilbon ta Baionan batu zarete,
zuekin ziegan pitz gaitezen,
sentituz sakonki askatasuna,
"orain presoak" aldarria,
kemen horri esker udaberrian
samurtasunak laztan gaitzan.

*2019ko otsailaren 10ean*

*823*
**(2000.10.17 - 2020.10.11)**
**Sekulako une batzuk**

1
Urriak hamazazpi nire oroitzan zaude,
askatasuna zeken kendu zidatelako,
poliziak atxilo eraman baino lehen
izeba Felixaren etxean egon nintzen,
pattal zegoelako lantzean behin nekusan,
nik jakin barik azken laztana eman nion,
ohiko hitz alaiekin maitez agurtu nuen
tamalez sekula ez ikusteko berriro.
Gurasoen etxean polizien artean
amari lehenengo laztana eman nion,
amak lez egundoko pena sentitu nuen,
libre batu ezingo ginatekeelako,
gure aitxa zaharra ohean zegoenez,
ez zen une horretan egoeraz jabetu,
amaren abaildurak asaldatu ninduen,
torturen terrorea islatzen zuelako.

2

Egun mingarri latzak gogoan izateaz gain,
zigorraldia dakit amaitzen hasi dela,
etorkizuna zentzuz antolatzen dihardut,
nire zain daudenekin irteera prestatzen,
egun berezi hori maiz iruditzen baitut,
Eibarren askeago biziko naizelako,
nik nor dut lehenbizi atetik ikusiko?
Galdera noizean behin ohean pil-pil dagit.
Urriaren hamaikan urduri irtengo naiz,
aspalditik ziegetan lo egin dudalako,
begiak hunkituta nahita itxiko ditut,
ferekatzeko baitan joan ziren hurkoak,
urtetako malkoak zor dizkizuedanez,
irria loratuta zuekin batuko naiz,
atseginez fotoak atera bezain azkar,
ariman daudenekin herrira joango gara.

*2019ko otsailaren 17an*

*824*

**Alkoholari.**
**Drogarik hedatuenari**

1
Aizu edanean zaizu
gibela gaixotuko,
ibilera trakestuko,
burua erotuko,
etxean giroa oso
duzu izorratuko,

lagun minek nazkatuta
zaituzte ukatuko.

2
Traba itzela daukagu
alkohol latzarekin,
ezin da landu askapen
borroka ronarekin,
kide asko galdu dugu
keriaren garrekin,
gugandik gazte joan ziren
eritasun txarrekin.

3
Nahiz mozkortzen nintzenean
nik ez nuen laidotzen,
neure aurpegi sanoa
gorriz zen mozorrotzen,
gaztetan ia ez zara
atakaz konturatzen,
senak, ordea, ziostan
“txo, has zaitez zentzatzen”.

4
Maiz gaupasak egin eta
gero nintzen tristatzen,
egun eder bat ergelki
nuelako haizatzen,
gauero maiteminduta
bainintzen ateratzen,
tamalez, ez nuen inor
edanda kitzikatzen.

5
Zinez, diot, ez naizela
ardoaz kutsatuko,
duintasuna edan barik
dudala dastatuko,
horri esker kate barik
libre naiz hegatuko,
ajerik gabe zurekin
ohean esnatuko.

6
Zurekin pozarren nago
begirada ortzian,
ardoaren ordez ura
edan dut iturrian,
gustura gaude hiritik
hur gure oasian,
zu eta ni biziguraz
etzanda Akondian.

7
Astero pintxo-potean
gabiltza tabernetan,
alkohol barik hobea
dela, diot benetan,
biok sarri genegien
lehen eguaztenetan,
noizbait hasi ginenean
gu hartu-emanetan.

8
Gogoratzen naiz zer ginen
ni eta alkohola,
geurea zelako ziega
presoarentzat nola,
zuk hautsi zenidan neukan
irrikaren oskola,
orain zure zoriona
da zaidana axola.

*2019ko otsailaren 17an*

*825*

**Sebas Etxaniz eta Joseba Arregiri.**
**Kide zaharrei**

1

Sebas Elgoibartik tak joan zinenetik,
nahitaez gorriak ikusi dituzu,
Espainian herrak agintzen duenez,
zahartasunean barruan darraizu,
hamazazpi urte espezainen mende
bengantza usainduz eskubidetik at,

zaintzako epaile krudel hipokritak
autoetan nahita adarra jo zaitu.
Deserriko zoru goibel lehorrean
samurtasunaren zirria ihintza,
ataka itzelaz kideak galduta
goizero zirraraz oroitzen dituzu,
laztan kuttunaren ohiko presentziaz
ziega oasia iruditzen zaizu,
zapalkuntzak sarri banandu zaituzte,
maitasunak, berriz, pilpiraka batu.

2

Zu, Joseba legez eredu aratza,
goiari kemenez eutsi diozue,
herriaren alde zintzoki jardunda
ebatzi zuzena hobetsi duzue,
euskal herrietan hamaika desio,
Elgoibar, Oñati... ametsen itua,
ilargia kate barik miresteko
Karakate, Aloña... tontorretatik,
Gaztetan moduan bidean zaudete,
askatasunera tente iristeko,
aldapa pikoa ia zelaituta,
zuek lez, xedeak dir-dir zain dauzkagu,
gerora zuekin elkartu nahi nuke,
zuen duintasuna mintzatuz dastatu,
konpromisoaren muina zaretenez,
eremu librean ernatuko gara.

*2019ko otsailaren 24an*

*826*

**(2019.01.12)**

**“Orain Presoak” manifen eguna**

1

Urtarrilak hamabi enaren eguna
tximistaren pare ia igaro da,
ikustaldirik gabe hegan aritu naiz,
sorkuntzak ehuntzen, gutunak idazten,
arrastian giharrak gogoz landu ditut.
Baionan lez, Bilbo gertu nabarituz,
afaldu eta gero kirioak dantzan
kideei deitu diet mintzatzeko
Baionan eta Bilbon lurreratu gara,
gaurko desioez jabetu gaitezen,
gogoan izateaz gain, hurreko minak,
eurekin bizitzen segitzen duzue,
xedea euren nahiak obratzea baita,
jendarte hobea eraiki dezagun,
giza eskubideak zolan sustraituta
herrian zauriak orbaindu daitezen.

2

Telebistan ez dute Baiona aipatu,
Kordoban egonda halako hamaika,
igandean bederen emaitza jakin dut,
“manifa itzelak”, telefonoz entzun,
lo kuluxkan garbiki ikusi zaituztet,
gutar atseginak Bilbon ta Baionan,
iheslariak pozik iruditu ditut,
plazetan harrera zirraragarriak.
“Orain Presoak”, dio, pankarta txukunak,
nire oharmena berenganatu du,
beti legez kemenez aritu zarete,
gatazka dezagun demokratizatu,
gorrotoari galga ezar diezaiogun
indar metaketa sendo altxatuta,
gizatasuna naro blaituz bihotzetan
Taupadek herrira eraman gaitzaten.

*2019ko otsailaren 24an*

*827*

**Gara eta Berria gara**

1

Garzon epaileak Eginen sartuta
Aznarren asmo makurra bete zuen,
egoitza nahita galtzen laga zutenez,
ondarea ezereza baino ez da,
gero biek Gara zorpetuko zuten,
Egin-en zorra gezurrekin jarrita.
Izan edo ez izan gure auzia,

Gararik gabe nekez izango gara,
Eginen errautsetatik gorputztu zen,
akzionistek adoreari esker,
ez gintezen ito estatuen mende,
nortasun askatzaileak iraun zezan.
Euskaldunen Egunkaria orobat,
Aznarren erasoak hilduko zuen,
torturaren kiratsa hedatuko zen,
Berria herrian mardul hozituko,
“euskal prentsa tinko defenda dezagun!”,
orduko manifetako irrintzia.

2

Gararen bizitza ez dadin itzali
elkartasuna lehen adina bildu,
auzolanean jatorki uztartuta
aurre eginez faxisten bengantzari,
bortxaren kriminalek jakin dezaten,
Gara izango garela gaur lez bihar.
Gara eta Berriaz zoriontsuak
arima ederkiro elikatuta,
ziegan altxor preziatuenak mahaian
hurkoen postalak zein gutunak beste,
mundua erakusten digutelako,
zazpi herrialdeen aniztasuna.
Gara eta Berria gazteak gara,
konpromisoa eta zintzotasuna,
gazteen jakin-nahia asetzen dugu,
herritarren kontzientzia kitzikatzen,
gure xederik behinena pizkundea,
herri librean euskaraz bizitzea.

*2019ko martxoaren 3an*

*828*

**Ireneri.**
**Elkartasunari**

1
Irene, Mari bezain
naturala zara,
uda dakarkidazu
neguan ziegara,
zure irriak dauka
ihintzaren kara,

ahotsak, berriz, gure
kantuen zirrara.

2
Aspaldi ezagutu
zenuen kartzela,
kidekoek dizute
eskertu epela,
zuretzat maitatzea
ohi da erregela,
aise gaindu dezagun
ataka krudela.

3
Zurekin aurre egin
diot estresari,
hurkoekin adina
zigor demasari,
sarri pozik diotsot
zain dagoenari,
oro sentiera den
musa kuttunari.

4
Zoriona da zure
xarma arnastea,
geroa hola lasai
prestatzen hastea,
esperantza lortu dut
txukun marraztea,
zurekin hainbat damu
zikin araztea.

5
Leunki naramazunez
txortxorren ortura,
oinazea egiten
ohi zait bizigura,
zurekin infernutik
heldu naiz zerura,
esparrutik bertsotan
gure eremura.

6
Ataramiñe denez
haritzaren zura,
zuk beste asetu dut
gogoan azkura,
batera joan ginenez
sorkuntzen zorura
zeuri esker hasiko
nuen abentura.

7
Zure eguzkiak nau
goizero esnatzen,
ametsak dizkidazu
erruz elikatzen,
atsegina musu-truk
didazu opatzen,
habiara bueltatu
nadin hegaldatzen.

8
Lokabe pausatu naiz
zure oasian,
mortua ahazteko
arrats oskorrian,
Arraten gaude gutar
minekin zelaian,
kartzelarik gabeko
lehen ilargian.

*2019ko martxoaren 3an*

*829*

**(2019.01.05) Jesus Mariri;**
**(2019.01.26) Oierri... Josu gogoan**

1
Josuk, Jesus Marik, Oierrek... Kartzelak
hiltzen duela guk adina zekiten,
minbizia ez delako zoritxarra,
bizimodu gaitzaren emaitza baizik,
estresa gure etsai makurrena da,
esparruan noizean behingo zartada.
Osasun zainketa espezainen mende
hormak arauak izkiriatzen ditu,
ziegan nahitaez mamuekin borrokan,
etsipena eta herra sufrituta,
"Bengantza" irmoki begira daukazu
txarrantxaren arantzetan kokatuta.
Barruaren barruan arreta urriz
ohartzeke lur jota egon zaitezke,
ospitalera joateko ahal barik
denboraren ezpata buru gainean,
sentierak aldiro ozen, diosku,
"berehala kide gaixoak etxera".



*- Oier Gomez; Jesus Mari Maiezkurrena; Josu Retolaza Loidi.*

2

Enegarren gau luzea igarota,
eguna berriro ilun argituta,
kidekoen xarma nabaritzen duzu
euren adore itzela arnastuta,
tamalez sasidi latza ezagututa
goiari eusteak kimera dirudi.
Josu, Jesus Mari, Oier... zendu zineten
hurreko minen ferekak gozatuta,
ortzia ongarritu zenutelako,
zuen izarrak ñirñirka dakuskigu,
estatuen zutoina bortxa den arren,
txingorra ihintza bihurtuko dugu.
Aizue, kartzela geurean galduta,
plazetan ospatzeko batuko gara,
gurekin zaudetenez diotsuegu,
laminen errekatxoa zaretela,
bake zuzenarena izango dela,
zuekin dastatuko dugun zirrara

*2019ko martxoaren 10ean*

*830*

**Gure bertso-ontziaren bidaia**

1

Bertso-ontzi aspaldi
zinen abiatu,
barnean niezazun
sorkuntza pausatu,
nahiz zuk itsasbidea
zenuen hautatu,
kai baten zintuztenez
luze ainguratu,
Kordobara kostata
zara ailegatu.

2

Debatik hel dadila
Eibarra kresala,
hemen izan dezadan
sortzeko ahala,
bertso-ontzian gaindi
dezagun tamala,
mastan trebe jarriko
dut haize-oihala,
gure lurra delako
xede ideala.

3
Bertso-ontziarena
ideia zoroa,
musen arrantza izan
dadila naroa,
aurki dezala gure
artean giroa,
oro kai bakoitzean
harrera beroa,
pitz dadin utopia
galdu zen uroa.



4
Bertso-ontziak lema
dauka berdekara,
neurri kolosala
brankatik popara,
bertsotan hel gaitezen
kantari plazara,
zuzen gida dezagun
bengantzatik hara,
itsasoak entzungo
du gure algara.

5
Bertso-ontzia bare
itsaso handian,
ilargi betea ta
izarrak ortzian,
amets onenak daude
Kantauri bizian,
lurralde miresgarri
bezain pozgarrian,
txontak lez bizitzeko
oasi txikian.

6
Bertso-ontzia eror
daitezen murruak,
gorri diezazkigun
hegoak musuak,
hondartzan laga gaitzan
azken olatuak,
leunki senti ditzagun
hurkoen eskuak,
libre goza gauean
hontzaren uluak.

*2019ko martxoaren 10ean*

*831*

## Bi enaren historia polita

1

Enarak airean trebeki biraka
ezarri zizkieten eraztunekin,
arrak eta emeak inguru garbian
habia iaz legez atondu dute,
Monroviara urrian hegan joan ziren,
martxoan Afrikatik onik itzuli,
txori askorekin topo egin arren
harremanari bikain eutsi diote.
Zalantzarik gabe zentzu naturalak
bertan berriz batzeko gidatu ditu,
udaberriaren txera baitira,
arrasti epelen iragarpena,
Muxikan bi urtaro egongo dira
Etxebarrieta baserri sendoan,
gosea eltxoekin asetzen dute
txoko seguruan onura sumatzen.

2
Txorikumeek arrautzak kraskatuta
unerik magikoena gertatu da,
urteroko pizkunde zoragarriak
Urdaibaiko izadia suspertu du,
aurreko belaunaldiek bezalatsu,
espeziearen norma bete dute,
bikoteak ehizatzeari ekin dio,
habian dauden altxorrek jan dezaten.
Iraila helduta laster joango dira
Liberiako neguko aterpera,
arren, osasunez itzul daitezela,
bizinahia gogoan senti dezagun,
ingurugiroa ez dadin eskastu,
ikuskizun sorgina eskain diezaguten,
egun oskarbietan ikus ditzagun
harrera eskertuz ortzian dantzatzen.

*2019ko martxoaren 10ean*

*832*

**Mugak gainditu ditzagun**

1
Monarka harroputzek
gintuzten zanpatu,
banderak ezarrita
mugekin banatu,
liberalek geroa
ziguten ukatu,
arbasoen forua
bortxaz lurperatu.



2
Parisek ta Madrilek
gintuzten eskastu,
gerrate zikinetan
nahitaez nahastu,
nortasun naturala
ziguten kakaztu,
tamalez, ia dugu
zer ginen ahaztu.

3
Chauvinistek aiztoak
gintuen zatitu,
gure hartu-emanak
zituzten ahitu,
kulturaren haziak
ditzagun sustraitu,
eremuan fruituak
daitezen hozitu.

4
Euskaraz nahi ditugu
bideak garbitu,
estatuen mugarri
faltsuak gainditu,
solidaritatea
dezagun bizitu,
ongizateaz dadin
herria lilitu.

5
Estatuek dutenez
zigorra helduta,
erdibituta bizi
gara epelduta,
kinka gaitzak ez gaitzan
laga erdoilduta,
auzolana bizkortu
dezagun bilduta.

6
Mugak gura ditugu
jator gurutzatu,
mendetako galerak
kemenez osatu,
euskaldunok batera
dezagun kantatu,
aniztasun joria
bihotzez hedatu.

7
Aturri ta Ebroren
artean ortua,
diaspora zintzoak
bertan du lekua,
era dezagun zuzen
gure gobernua,
berdintasunaz zertu
oasi urtsua.

8
Zazpiak bat josteko
gara prestatuko,
Xahoren maitasunak
gaitu gidatuko,
ikurrina munduan
dugu finkatuko,
joan zirenen xedea
libre ospatuko.

*2019ko martxoaren 17an*

*833*

**(2019.03.22) Bruselan gertatu zen I**

1

Bruselan musulmanen auzoan jaio zelako,
jaioterrian nahitaez arrotz sentitzen,
lagunak legez, gaizkile bihurtu zen,
bere patua zinez erabat okertuko,
dirudienez gerora pentsatu zuen
zer egin bizitzari zentzua emateko.
Yihadista izateko hor nonbait prestatu zen

paradisua noizbait irabazteko asmoz,
gaur goizean gorputza zartarazi du
bere gorrotoa krudelki islatu,
Belgikako aireportuan gertatu da,
leherketak arima asko hil ditu.

2

Sekuritatea baino, hobe hezkuntza,
elkartasunaren zirria armen ordez,
gizatasun dirdaitsua estaltzeko iluna,
ez dadin inor izan, bestea herrian,
auzoetan musu-truk sustatuko dugu
kulturen arteko harreman sanoa.
Herrian giza eskubideak nahi ditugu,
munduan ondasunak zintzo trukatu,
ideologia eskasak gal daitezen
feminismoa naro erein dezagun,
Europan adina, Afrikan, Asian...
ongizatea paradisua izan dadin.

*2019ko martxoaren 24an*

*834*

**(2013.03.22) Bruselan gertatu zen II**

1

Belgika, Siria beste histu da,
Damasko urtetan legez, Brusela gaur,
bortizkeria han piztu genuen
kaltetuta giza eskubideak,
kapitalismoaren mesederako
lurraldea hondoratu diegu.
Estatu Islamiko ahistorikoa

izua nonahi ezartzen ari da,
bere sinesmena zigorra baita,
monoteisten infernu petrala
herra agintean dagoelako,
Ekialde Hurbila hil hurren dago.
Alderatu ez dugun nahi arren,
heriotza bakoitzak, samina dakar,
estatu batzuen harrapakeria
herritar arruntek ordaintzen dute,
feminismoak zabal diezagula
bakera heltzeko bide zuzena.

2
Gerrak gainditzeko elkartasuna,
mundua ontzeko ahizpatasuna,
ez ditzaten armek umeak erail
herrien arteko harreman zintzoa,
sistemak traba dagi, ordea,
yihadistak trintxera laga dezan.
Europan ez dezagun negarrik egin,
Siria paradisua izan dadin,
Nazio Batuen Erakundeak,
bortxari aurre egin diezaiola,
arma ekoizleak estu hartuta,
gerrateen zio faltsuak lurtuta.
Jaio nintzenetik ikusi ditut
munduan aldiro bonbak lehertzen,
txiroak ergelki txiroen kontra
bankuen fortunak emenda daitezen,
zendu aurretik ikusi nahi nuke
samurtasuna gerra ordezkatzen.

*2019ko martxoaren 24an*

*835*

**Eguzki amandrea feminista da**

1

Eguzki amandrea negarrez dago,
suzko malkoak isurtzen ari da,
Ama-Lurrak esan diolako,
"eskuindarrak beti legez, oldarka",
matxisten zeregin printzipala
feministak menderatzea dela,
zuzentza bortxaren alde egoteaz gain,
mundua berriz faxismorantz doala.
Bortxaketari epaile batzuek
harroki abusu deitu diote,
patriarkatza ahul ez dadin,
ez dezan gal aspaldiko boterea,
Ama-Lurrak izarrari eskatu dio,
matxismoa irendu dezala,
ez ditzan giza eskubideak erail,
berdintasunak jendartea berdin dezan.

2

Francok, Hitlerrek, Mussolinik...
ordezko basatiak dituzte,
Bolsonaro, Trump, Casado, Salvini...
ahoberoak beste izuaren zaldunak dira,
matxista homofoboak izateaz gain,
migratzaileen etsai ankerrenak,
historia maiz errepikatzen da
asaben bizipenak ahaztuta,
Eguzkiak armak urtuko ditu,
faxisten garun ustelak kiskaliko,
bakea behingoz dasta dezagun,
udaberrian bizi gaitezen,
guk elkartasuna sustatuko dugu,
auzolanean pobrezia gainduko,
patriarkatzak desager daitezen,
bizitza feminista izan dadin.

*2019ko martxoaren 24an*

*836*

**(2019.03.08)**

**Bigarren greba feminista**

1

Ama-Lurrak egin du
greba feminista,
edonon itzal dadin
faxisten tximista,
kemenez bezatzeko
kalean matxista,
eskolan erauzteko
hezkuntza sexista.

2

Greba iaz lez, denez,
txit aurrerakoia,
leku barik geratu
da atzerakoia,
matxisten botereak
gaur dirudi lohia,
norma patriarkalak
zio barik ohia.

3
Greba, behingoz lurrundu
dadin pobrezia,
emakumeak duen
jasaten gezia,
egunaren lurrina
denez gerezia,
matxistak sentitzen du
orain ahulezia.

4
Berdintasun sanoa
zinez da xedea,
elkartasun erabat
joria legea,
feminismoak dauka
gozoa elea,
sentimendu zintzoen
belardi hezea.

5
Lana izan dadila
auzolan leiala,
parekidetasunak
lor dezan ahala,
ekonomia izan
dadin naturala,
gizon ta emakume
lokabeen sala.

6
Greba feminista da
dotore amaitu,
plazetan oro dira
bihotzak hunkitu,
gizon zikinak krakak
ditzala garbitu,
matxismoak geurean
ditzagun gainditu.

7
Martxoaren zortzian
kolore morea,
emakumeak goza
dezan ohorea,
manifak izan dira
bagak ta marea,
feminismoak darrai
ehuntzen sarea.

8
Feminista gazte, ta
helduak batera,
amantal aratz duinak
balkoira atera,
arimak joan gaitezen
brau ongizatera,
matxista bortitz barik
masustak jatera.

*2019ko martxoaren 31an*

837
**Venezuela bolivartarrari**

1
Venezuela, Simon Bolivar eta harrera,
euskaldun askoren bigarren aberria,
klase diferentziak aspaldi sustatuta
lurralde aberatsa herritar txiroekin,
kapitalisten menpe hogeigarren mendean
Chavezekin ongizatea hasi zen arte.
Yankien mehatxua gerraren oihartzuna,

petrolio kupelak berekoien ituan,
Madurorena diktadura dela, diote,
Guaidoren errepika ekaitza lehertzeko,
Trump, Bolsonaro, Duque.... Sasi-demokratek,
titere hantustea inposatu nahi dute.
Venezuelari beha eskuma eta ezkerra
era ezberdinean adostasunik gabe,
eskuindarrak bortizkeria piztu gura du,
ezkertiarrak elkartasuna zintzo erein,
hainbat venezuelar geurean oldartu arren,
bolivartarren egia kontatzen ari gara.

2
Simon, gaizkia erauzteko borrokatu zen,
inperioa erpe barik laga zuen,
Maduro eredua praktikatzen ari da,
berdintasunak jendartea onera dezan,
auzolanaz bakea errotzeko munduan,
patriarken normak bidaltzeko pikutara.
Aurkariek estatu kolpea zertu dute,
ez dutela atsedenik hartuko dirudi,
gezurra, sator-lana... faxisten tresnak dira,
Ameriketan zoritxarrez ondo dakite,
Venezuela bertakoena izan dadila,
eskuzabala eta muga barik askea.
Uruguaik eta Mexikok berba egin dute
bitartekaritzaren makila eskaintzeko,
ez daitezen odolez blaitu auzo xumeak,
Trumpek ez dezan petrolioa harrapatu,
Venezuela pobreziarik gabe izan dadin
Orinoco ibaia bezain zoragarria.

*2019ko martxoaren 31an*

*838*

## Hil zen lagun bati

1

Burmuinean esnatu
zelako txirtxila,
zentzuak zirudien
tarteka girgila,
nahiz hartu-emanetan
zu zinen abila,
geroztik izan ziren
366 pilulak makila,
bizitza bilakatu
zitzaizun arraila.

2

Psikikoki ikusi
zintudan hondatzen,
gauak zintuelako
arras asaldatzen,
zure gaixotasuna
joan zen emendatzen,
lanean hasi ziren
zutaz mesfidatzen,
ez zenituelako
urratsak gidatzen.

3
Gu ohartzeke hasi
zinen zokoratzen,
poliki zure nian
sorgor barneratzen,
jendearen artean
bakarrik geratzen,
alkohola edanez
izarrak zenbatzen,
eldarnioak zizun
kordea trabatzen.



4
Ezin ginenez lagun
minak arduratu,
bakardadeak zizun
arima zartatu,
nahiz mamua eta zu,
maiz zinen mintzatu,
lilura nahi zenuen
gogotik uxatu,
tamalez minbiziak
zintuen kolpatu.

5
Gure bizitzak ziren
aspaldi banatu,
politikak denbora
zidan zurrupatu,
geroago barruan
ninduten giltzatu,
ordutik ametsetan
sarri gara batu,
gaztaroa batera
genuen dastatu.

6
Igandean nuen, hil
zarela aditu,
afaltzen zitzaizkidan
begiak gorritu,
sentimenduan zara
ederki lilitu,
Untzagan bihotzean
nahi zaitut sentitu,
nire irribarrean
zirraraz oroitu.

*2019ko apirilaren 7an*

*839*

## Maitea, amets hau zuretzat

1

Goiztiria zoragarriro hasita
eguzkiaren izpiak basoan,
urretxindorraren txorrotxioekin
natura harmonian iratzarri da,
leizetik eguterara hurbildu naiz
sentiera ihintzarekin ontzeko.
Zoriontasuna zurrupaka edanez
aintzirak gozoro laztanduko nau,
larrua grinaz eskainiko diot
biluzik murgilduta ur aratzean,
mendi berdeetan elurra urtuta,
udaberriaren aroa, pizkundea.
Ajeak ederkiro sendatuta
erriberan etzanda laket nago,
ekaitza gaitza ziplo lehertuta
paradisua ia negua egin da,
leizean berriz beharrez sartuta
ilunpea eskasa iruditu zait.

2

Gaua lez ilargia ostenduta,
trumoien ordez ostadar dotorea,
ez naizenez leizera itzuliko,
bizitza orain hobea iruditzen zait,
hegoaren epela sentituta,
bizigura ariman errotuta.
Txirtxilen kantuekin aztoratuta
espetxean ametsa lurrundu da,
atakan aspalditik nagoenez
une alai eta tristeen artean,
lantzean behin arrangura uxaten dut
irudimena ziegan baliatuta.
Zurekin oroitzen naizenean,
irudiak gozo kitzikatzen nau,
lainoek eguna zartatu dute,
zure begien distirek edertu,
maitea, aldiro ohoratzen zaitut
etorkizunaren argazkietan.

*2019ko apirilaren 7an*

*840*

**Korrikan klika egin dugu**

1

Gaztetan klika egin
nuen garunean,
euskara mordoilotzen
hasi nintzenean,
egun magiko horren
biharamunean,
pizkundea gertatu
zen sentimenean.



2

Hogeita batgarrena
baita klikarena,
behin betiko isildu
dakigun auhena,
Garesen eman dugu
urratsik onena,
Gasteiza eramango
gaituen lehena.

3
Garesek esan digu,
“egin zintzo klika”,
euskara ontzeko has
zaitezte korrika,
altxorra dezazuen
pilpiraz elika,
herrikide nagia
jatorki kilika.

4
Klika eta korrika
jaia dastatuta,
Gares zaharrak laga
gaitu xarmatuta,
eskuz-esku lekuko
mina pasatuta,
zazpi herrialdeak
oro ahizpatuta.

5
Klika esan du haurrak
adina helduak,
Korrikan garelako
bihurtzen prestuak,
ez dezan euskara gal
Chauvinisten suak,
tinko haiza ditzagun
herraren arauak.

6

Klika ozen dantzugu
gure kaleetan,
Korrika trostan doa
errepideetan,
euskara biziko da
teknologietan,
herriño anitzaren
arlo guztietan.

7
Korrika klikaka da
Gasteizen bukatu,
eguerdian tropela
alai ailegatu,
arimak ferekatuz
ditugu esnatu,
euskara mihietan
dezaten ondratu.

8
Izan Korrika beste
klikatuz euskara,
egiteko trebeki
xedeen otzara,
jendartean osatuz
zaleen ilara,
kantuz esan dezagun
euskaldunak gara.

*2019ko apirilaren 14an*

*841*

**Martxoak zortzi:**
**gizona feminista izan dadin**

1

Martxoak zortzi patriarkentzat izua,
kapitalismoarentzat ondoeza,
sinesmen monoteistentzat arratsa,
kontzientzia ilunentzat goiztiria,
matxistentzat zentzatzeko abagunea,
etxeko gizonentzat iratzargailua,
beharginentzat iraultzaren oinarria,
berdintasunarentzat urrats sendoa.
Munduan greba feminista hasi da,
Euskal Herrian kaleak mukuru,
enparantzetan eskuekin keinu indartsua,
ahizpatasunak samurtasuna dakar,
umeak, gazteak eta helduak bat eginda
gizon aurrerakoiak atzeko lerroetan,
eguzkia lainoen ostean dagoenez,
printza moreak tantanak egin dira.

2

Moreak eta ubelak jantziak,
feministen kolore atseginak,
aldarrikatzeko feminismoa,
salatzeko mendetako zapalkuntza,
ez delako inor jaio jopu izateko,
patriarken menpe lur jota bizitzeko,
matxisten makilakadak jasateko,
bortxatzaileen irainekin atsekabetzeko.
Historia zuzentzeko sasoia heldu da,
greba feministak bidea erakutsi digu,
gerraren ordez bakea ereiteko
giza eskubideen haziekin,
umeak sexismotik at hez ditzagun,
matxismoaren sustraiak ihar daitezen,
gizona feminismoan pausatuta
emakumearen kidea izan dadin.

*2019ko apirilaren 14an*

*842*

**Greta Thunberg gazteari**

1

Greta Thunbergek edonon dio,
“zaindu dezagun natura”.
plastiko poltsa egin delako
itsasoaren tristura,
ostiralero ailegatzen da
aholku ona mundura,
ez dezan ekar orain bezala,
haizetxoak kutsadura.



2

Gretak Suedian lurragaz zuen
konpromisoa hitzartu,
ikusten ari zen hondamena
ezin zelako onartu,
atsekabea erraz zitzaion
ekinez guztiz ihartu,
ekologia landuz bizitza
zoragarriro izartu.

3
Greta gazteak aldiro ditu
agintariak salatzen,
ingurugiro anitza ari
direlako izorratzen,
“zuek”, diotse, “etorkizuna
diguzue mehatxatzen”,
“diru zikina lehenetsita
bizipoza amatatzen”.

4
Gaztediari hitz egin zion,
greba egitera deitu,
kontsumismoa azkar dezagun
denon artean urritu,
Baionan deia ikasle askok
adorez zuten jarraitu,
Bilbon martxoak hamabost ez zen
modu berean konplitu.

5
Oi, Greta zure bi txirikordek
oro gaituzte xarmatu,
arima gazte apartak, berriz,
bikain gaitu animatu!,
zuk eztabaida unibertsoan
di-da duzunez sustatu,
mandatariak adina dira
bankariak ikaratu.

6
Jendartea nahi duzu irauli
gaurko ildoa aldatu,
gure izarbel urdin eria
zentzuarekin salbatu,
horretarako ekonomia
beharko dugu zentzatu,
zaborrak harro erraustu orde
banan-banan birziklatu.

7
Autista izan edo ez izan
goizero dirdira zara,
eguzkiak du sakon sentitzen
zure ekintzen dardara,
ikaskideak zurekin doaz
astero enparantzara,
borroka duinak erabat dauka
itxaropenaren kara.

8
Greta xaloa zure bizitza
izan dadila naroa,
noizbait osoro zertuta ikus
dezazula desioa,
nahiz Trumpentzat zu izango zaren
zalantza barik zozoa,
guretzat, berriz, zara iraultza
txikien sorgin-oiloa.

*2019ko apirilaren 21ean*

*843*

## Aberri eguna ezlekuan

1

Aberri Eguna isolamenduan
egun aproposa gutunak idazteko,
musekin sorkuntzak borobiltzeko
elkartasunari musu-truk eskaintzeko,
askatasunaren haize kirriarekin
esperantzan alegera kulunkatzeko,
maitearen argazkia miretsita
euskal aireak hunkituta txistukatzeko.
Desioak udaberrian berriztuta
herriaren pizkundea trostan abian,
Aberri Egunak oroimena dakar,
joan ziren kuttunen esentzia sarkorra,
gazte sentimentalak borrokan ari dira
kartzelarik gabeko sasoian pausatzeko,
herkideei "aurrera egin", diotset,
gerezi mardulen mamia dasta dezagun.

2

Aberri Eguna sentimendu sakona,
kateak hausten jarraitzeko aldarria,
asabak aspaldi zintzo saiatu ziren,
guk kemenez bide horretan darraigu,
euskara, kultura, zazpiak bat, ongizatea...
atzo eta oraingo xede behinenak,
plazetan eta etxean gure zain zaudete,
auzolanak zuekin elkartuko gaitu.
"Erabakitzearen alde lerrokatuta
utopia hurreratu dezakegu"
kontzientziak goizero printzekin diosku,
katalanei eta irlandarrei legez,
Aberri Egunaren ilunabarrean
izarňo gorriak ortzian ňirňirka,
mahaiaren erdian gure ikurriňa,
ezlekuan ere Euskal Herria gara.

*2019ko apirilaren 21ean*

*844*

**(1983.04.19) Felix Badiola eta Jose Antonio Garateri**

1
Felix ta Sua loreen
sasoian gara sartu,
zuekin zoriontsu naiz
arratsean elkartu,
sentiera sarritan lez,
didazue itzartu,

ez dadin sekula gure
harremana ihartu.

2
Hogeita hamasei urte
zuen nahiak sustatzen,
barrez oroitzen zaituztet
gaztaroa dastatzen,
tinko zenituztelako
kateak gorrotatzen,
herriaren alde hasi
zineten militatzen.

3
Gazteak zineten eta
oro idealistak,
Argala lez, abertzale
eta sozialistak,
zuek ez zenutelako
izan nahi egoistak,
orain gure taupadetan
zarete feministak

4
Kotxean lehergailua
zitzaizuen lehertu,
patuak bihurtu zuen
bizigura desertu,
Arrasaten ziren zuen
desioak ugertu,
gure bihotzetan, aldiz,
ondoezak atertu.

5
Zuen gorpuak eraman
zituzten Eibarrera,
Jose ta Agustin, berriz,
larri erietxera,
sentitu genuelako
sakon zuen galera,
Eibarren kemenez opa
genizuen plazera.

6
Zuen hileta izan zen
ohore ta sugarra,
hilerrian agurrean
begietan langarra,
gerora jasan genuen
poliziaren oldarra,
aizue, egingo dugu
zuentzat ostadarra.

7
Lokabe itzuliko naiz
espetxetik kalera,
Agustin ta Jose legez,
nolabait alegera,
zuek nigaz gogoz joango
zarete lur maitera,
amnistiaren bidean
lorpenak ospatzera.

8
Sua ta Felix, zinez,
zarete oskorria,
gaur lehen beste Arrate,
erreken etorria,
harkaitzean sendo duen
irauten elorria,
izar gorria, euskara,
haritzaren orria...

*2019ko apirilaren 28an*

## 845
## (1980.11.14) Espe Arana eta Jokin Alfonsori

1
Jokin eta Espe Caracasen txera opatzen
faxistek bizitza tiroka ostu arte,
ia lau hamarkada joan dira
estoldetan prestatutako krimenatik,
“Batallon Vasco Español”ak arrisku barik
ez-demokraten herrari bidea eman zion.
Venezuelan lanean oraina dastatzen

Euskal Herritik pozarren abiatuta,
zuen etxea askatasuna egin zen
iheslarientzat abaro kuttuna,
eurentzat elkartasuna zineten,
deserrian musu-truk irriñoa.
Espainiako zerbitzu sekretuek
zuen bularretan itua jarri zuten,
etxean gosariaren une atseginean
atarian ezustean tirokatu zintuzten,
Venezuelak ikerketa zokoratuta
hiltzaileak Madrilera lasai joan ziren.

2

Espe eta Jokin, izar gorriek dakite,
gorpuen harrera itzela izan zela,
Untzagan malkoak eta samurtasuna,
etxekoak eta lagunak maitez batuta,
Eibarren salaketa arimetan grabatuta,
sikarioen biktimak izan zinetelako.
Nahiz batzuentzat ez zineten existitu,
gure bihotzak betiko zuen habia,
konpromiso zoragarriari esker,
gogo zintzoetan ez zarete itzali,
euskal memoriaren zelaia loratuta
belaunaldi berriak egiaren jabe.
Jokin eta Espe laket Arrateko giroan
ama Mentxu eta hurkoekin goiz-argian,
ohorea eta mirespena merezita
gure desiretan hegan ari zarete,
Venezuelako lagunek lez, diotsuegu,
zuen ereduak askatuko gaituela.

*2019ko apirilaren 28an*

*846*

**Zatiketen ordez auzolana**

1

Presoak ziegan dio,
“gora auzolana!”,
“behera satorrena
ohi den azpijana!”,
ez dezan inork lurtu
gure iragana,
zer dezagun gatazka
gainditzeko plana.

2

Euskaldunak zergatik
gara egoskorrak?
oilarrek beste maite
ditugu gandorrak,
geurean jatorki zain
ditzagun alorrak,
ez daitezen bilaka
ur barik agorrak.

3
Aizu, laga ezazu
bidexka zaharra,
estatuen mendean
dagoen malkarra,
ez dadin egin bide
berria abarra,
Euskal Herrian goza
dezagun aparra.

4
Bide gogorra laga
dezagun batera,
min barik hel gaitezen
nahien larrainera,
denok baldin badugu
sentimendu bera,
ez ezazu aukera
bota bazterrera.

5
Kritikatzen diozu
hasi berriari,
denon alde ari den
alderdi duinari,
utz iezaziozu hazten
“Euskal bidea”ri
makila ken diezaion
botere gaitzari.

6

Guk ezin dugu jardun
Sisifok bezala,
harria igo nahian
urritzen ahala,
txukun manten dezagun
ametsen oihala,
lurraldean ondo hets
dadin arrakala.

7
Maldan alferrik egon
barik geratuta,
zentzuz egin dezagun
aurrerantz batuta,
gu askatuko gara
motxila hartuta,
teoria praktikan
zintzo uztartuta.

8
Arnasa behar dugu
lana bukatzeko,
urratsak bizitzeko,
bortxa urratzeko,
gutarren batasuna
berriz osatzeko,
pizkundea herria
libre brodatzeko.

*2019ko maiatzaren 5ean*

747
**(2019.03.15) Jacinda Andernen eredua**

1
Maorien lurralde zoragarrian
supremazista zuria armatuta,
Christchurch-en bi meskita tirokatuta
berrogeita hamar herritar zerraldo dautza,
Zeelanda Berrian arrazisten dogma,
“ordezkapen handia”, teoria gaitzesgarria.
Sinesmenen arteko harremanak gaiztotuta

kapitalismoa irabazle bakarra,
Londonek konkistatutako eremuan
hiltzaileak faxista batzuk omendu ditu,
musulmanen kontrako gerrak goraipatuta,
Brenton Tarrant gorrotoaren borreroa.
Ideologia gezurtiaren jopuak
oinazea harroxko barreiatu du,
harmonia anitzaren herrialdean
elkartasunak kaltetuak laztan ditzala,
“Haka” dantzak berdintasuna bizkortu dezala,
esperantza une tristean izeki.

2
Presidenteak armak debekatu ditu,
Jacinda Andernek malko garratzak konpartitu,
Al-Noorreko meskitara begirunez joan da,
“hijab”a jantzita doluminak ematera,
Zeelanda Berriko musulmanek eskertu dute,
bertakoak direla hunkituta sinetsi.
Geurean supremazistak zokotik aterata,
migratzaileari “bestea” deitu diote,
ez dakite Txabik, Argalak... esandakoa,
“euskal herritarra bertan lan dagiena da”,
ez gara arrazisten zingiran eroriko,
Jacindaren keinuak salbatuko gaitu.
Jacindaren eredu ederra lanabesa,
supremazismo zitala deuseztatzeko,
denon Euskal Herria eraikitzeko,
munduan ahizpatasuna errotzeko,
maoriera noizbait lez, euskara izango da
interkulturalitatearen ardatza.

*2019ko maiatzaren 5ean*

*848*

**(2016)**

**Udazkena, negua versus udaberria**

1

Donostian artea
dute zentsuratu,
euskal presoen uzta
zakar mespretxatu,
erakusketen sala
diete ukatu,
aitzakia biktimak
direla kexatu,
hitz egiten zioa
dugu arbuiatu,
espetxeetan zaie
gogoa tristatu.

2
Altsasuko herria
dute aztoratu,
biktimen gezurrekin
erabat zanpatu,
juezak gerora ditu
gazteak giltzatu,
Usurbilen egia
karpan da hegatu,
“kalera kalera” du
zirrarak kantatu,
udaberria dadin
denontzat esnatu.

3

Oraindik herrak dauka
hamaika aurpegi,
gizaki batzuk dira
erotzen gehiegi,
konponketa nahi dute
gaiztoki eskegi,
ez denez esperantza
haustea zilegi,
ez dezala bengantzan
AVTk segi,
plazak izan daitezen
berriro abegi.

4
Bakea pausa dadin
zintzo lan dagigu,
tamalez jendartean
neguan darraigu,
maleziaren bortxak
poza osten digu,
baina maiatzak berri
onak dakarzkigu,
Ama-Lurrak lurrinak
opatzen dizkigu,
ametsetan gutarrak
libre dakuskigu.

*2019ko maiatzaren 12an*

*849*

## Kilometro zero geroa da

1

Kilometro zero izan dadila
kontsumitzeko filosofia,
gure ekonomiaren ehuna
sendotuko duen hari berdea,
ingurugiroa babesteko urratsa,
langabezia gainditzeko bidea.
Praktika sendunarekin ezbai barik
herrian hobeto biziko gara,
beharra natural haziko delako
oletan eta baserrietan,
kaleetan suspertuko direlako
dendak, kultura eta tabernak.

2
Kilometro zero berdintasuna,
edonon hartu-eman justua,
saltzeko beste herriei ez daukatena,
erosteko eurei bertan ez daukaguna,
ahalmen gutxikoekin, berriz, izango gara
solidarioak beste lagunak.
Kontsumismoan amildu orde
gure mezua, “erosketak neurriz egin”,
Lurra ez delako infinitua,
ekologia lanabesik seguruena,
euskaldunok jator konpartituko dugu,
izadiak musu-truk eskaintzen diguna.

*2019ko maiatzaren 12an*

*850*

**Eibarko Euskal Jaixa kilometro zeroaren alde**

1

Euskal Jaixak auzolana indartu du,
kilometro zero ekimena babestu,
otorduak ederkiro osatuta
baserrietako ekoizkin osasuntsuekin,
ondo egindako beharrari esker
Untzagako karpa biziguraren lekuko.
Tomateak, barazkiak, gazta, ogia...
Eibarren eta Elgoibarren erosita,
oiloak eta behia natural bazkatuta,
antzinako moldean hazita,
urdailek gozamena eskertuko dute,
arimek zoriona sentituko.

2

Baserritarrak jator sostengatzeaz gain,
janari freskoak dastatzeko aukera,
herriko elkarteetan musu-truk prestatuta
mahaietan atseginez zerbitzatzeko,
dantzan eta kantuan gero aritzeko
gure herriaren kulturak iraun dezan.
Eibarren lehen sektorea sustatuta
jendarte hobea izango dugu,
ingurugiroari kemenez "bai" esanda,
garapen jasangaitzari "ez", diotsogu,
nortasunaren muina ferekatuta
arbaso menditarrak omendu ditugu.

*2019ko maiatzaren 12an*

*851*

**Itzuruni. Mariani**

1
Marian hona hemen
zure oparia,
Itzuruni buruzko
nire sorkaria,
zuretzat San Telmo lez
delako zoria,
kantaurik blaitzen duen
hondartza joria.



2
Gure Itzurun, zaude
hormaren aurrean,
ikusten ari naizen
foto ederrean,
kresala pausa dadin
larru lehorrean,
etzanda egon nahi dut
zure hondarrean.

3
Itzurun, dauzkazunez
hur itsaslabarrak,
maiz diozu, “horiek bai
direla zaharrak”,
maite dituzu baga
bareen aparrak,
izutzen zaitu, berriz,
galerna zakarrak.

4
Talaiatik itzela
duzu ikusmira,
Bizkaiko kostaldera
baitzaude begira,
iluntze oskorritik
goiztiri garbira,
zure itsasoak du
islatzen dirdira.

5
Itzurun, hegoa da
zuretzat onura,
mendebalak, ostera,
dakar arrangura,
Zumaiako haurrentzat
zarenez lilura,
udan apropos duzu
hobetzen itxura.

6

Zuk, eremuan duzu
aditzen euskara,
antzinako asaben
eleen zirrara,
gauak eskaintzen dizu
ortziko izara,
egunak, herritarren
barreen algara.

7
Itzurun, Eibarretik
joango naiz zugana,
espetxea lagata,
herraren porlana,
kuttunagaz lehen lez
egingo dut plana,
Sakonetatik gara
helduko laztana.

8
Nahiz iruditzen zaigun
zarela hauskorra,
zurekin berehala
suspertzen da sorra,
jaso ezazu gure
diosal jatorra,
zarelako hamaika
ametsen altxorra.

*2019ko maiatzaren 18an*

852
**(Tarbes 2001.07.21)**
**Jose Luis Arrieta Zubimendiri**

1
Azkoitti, leku kuttunean bizi zara
Kalamua eta Garagoitxiren artean,
Eibartik abiatuta jai egunean,
gaztetan bizipoza bertan sentitzen zenuen,
txabolan lagunekin ametsak aletuta,
arbasoen sentimendua arnastuta.

Kalean diktaduraren mende itota,
mendian gogoa kate barik hegatzen zen,
herriaren ataka sakon ezagututa,
konpromisoaren beharra onartuta,
garai jorian ospa egin zenuen
polizia frankistari izkin egiteko.
Arima herriari zentzuz eskainita
sasian borrokan kemenez hasi zinen,
Argala, Txomin, Josu... eta beste hamaika
zure kideak Euskadi askatzeko,
errepresioa aldiro jasan arren,
aurre egin zenion enbatari.

2

Lapurdin familia ederki osatuta,
Eibarkoarekin hartu-emana mantenduta,
zure jarduna bikain orekatu zenuen
borroka eta maitasunaren artean,
tamalez, etsaien oldarra handitu ahala,
bihotz samurra gaixotzen joan zitzaizun.
Tarbesko ospitalean ingresatuta,
zeurea ez zen izen batekin zendu zinen,
errautsak ikurrinarekin zabalduta,
trintxeren zelaian atseden hartu zenuen,
oroitarria guardia zibilek erauzi arren,
gure oroitzan atzo lez ñirñirka dirauzu.
Azkoitti, zure nahiak lortu bezain azkar
zurekin Akondiara igoko gara,
gurekin, joan zirenak etorriko dira,
zu legez, gure bizitzaren partaideak,
Euskal Herriari hunkituta kantatzeko
Ilunabar oskorria libre dastatzeko.

*2019ko maiatzaren 19an*

*853*

**Gauak ez dezala borroka gal**

1

Nire bizitzarekin
nazkatuta nago,
ez dut nahi izorratu
gibela gehiago,
baina tamalez beti
diot, “geroago”,
horrela nago gero
eta goibelago,
zahartzean izango
delako zailago.

2

“Militantzia” diot,
“nauka nekatuta”,
baina egia nik dut
laga giltzatuta,
gauetako ohitura
txarrak aldatuta,
arima lehen legez
txukun lisatuta,
izan dezaket gaurko
mina xehatuta.

3
Aritu beharrean
tikili-takala
mozkortuta bizitza
delako hutsala,
tente ibiliko naiz
kideak bezala,
burua goititzeko
plazan berehala,
gainditzeko sentitzen
ohi dudan tamala.



4
Borroka edo gaupasa
behar dut hautatu,
sen onak diezadala
kemena goratu,
modu sanoa zein den
dezaket somatu,
izaeratik behingoz
gaizkia uxatu,
bizitza zirt edo zart
ongiaz gidatu.

5
Ez du inork urduri
haritzik landatzen,
lasaiki, berriz, baitu
xedea gauzatzen,
kideekin bilerak
egoki eratzen,
aisia ta borroka
zehatz tartekatzen,
ederki arituko
naiz ni militatzen.

6
Garaiz oheratuta
pozik naiz altxatu,
ez naizelako aje
barik aztoratu,
jendartea dezadan
zuekin ondratu,
borrokatzeko grina
zuzen zait ernatu,
atzo nituelako
hurkoak maitatu.

*2019ko maiatzaren 26an*

*854*

**(2016.09.10)**

**Ibon, kontatu zenidan**

1

Mirentxin furgoneta asaltatu dute,
armekin mehatxatuz izua zabaldu,
Ibon, mintzalekuan hori esan didazu,
Kordobako kartzelan goizeko hamarretan,
igarotako amesgaizto itzela
zure hitzekin irudikatu dut,
kideekin gertaerataz hitz egin eta gero,
sentimenduak, “zerbait idatz ezazu”, esan dit.
Pistolekin zuen buruak destatuta,
gidariak batik bat txarto tratatuta,
harroxkoen irainekin asaldatuta,
gau ilunean gorriak ikusi zenituzten,
desenkusak gerora etorriko ziren
kalez jantzitako basatien aldetik,
estutasun luzea barrezka uxatu nahian,
gertakaria txantxa bihurtu zuten.

2
Senideak, lagunak eta gidariak,
guardia zibilen mende zaurgarriak zarete,
“sakabanaketa politika amai dadila”,
zuen eta erkideen eskaera larria,
jada hiru hamarkada ataka pairatzen,
errepidean astero arriskuei aurre egiten,
estatuak konponketaren alde has daitezen
auzolana tresnarik eraginkorrena.
Armatuen gehiegikeriak gerarazteko,
agintarien agindu makurrak lurruntzeko,
ez gertatzeko berriro halakorik,
guardia zibilak salatu dituzue,
elkartasunak bidaiatzen segi dezan,
gu euskal herriratzeko beharra berresteko,
Ebro eta Aturriren artean libre bizi gaitezen,
zuekin, gaurko kateekin lauburuak egin ditzagun.

*2019ko maiatzaren 26an*

*855*

**(2019.05.05) Besarkaden eguna**

1
Europan maiatzak bost da
izango da ezaguna,
adeitasunez diotsut,
migratzaile laguna,
arrazistak jakingo du
garela batasuna,
herra barik ernatuko
dela ahizpatasuna.



2
“Ongietorri”, esanda
hona heldu denari,
lurraldean diotsogu,
“bai”, gizatasunari,
ondra opatzen diogu
besarkada duinari,
“Hamaika kolore”k legez,
ekitaldi onari.

3
Arrazisten sasidia
geurean erauzia,
besarkada izango da
ongiaren hazia,
migratzaileak gain dezan
laztanen eskasia,
jendartea izan dadin
denontzat oasia.

4
Samurtasuna delako
besarkada zintzoa,
era berean taupaka
bihotzaren mintzoa,
migratzaileak sumatu
dezala abaroa,
gure besoen artean
harrera oparoa.

5
Xenofobiaren kontra
besarkada baikara,
migratzaileak gurekin
joan daitezen plazara,
larruan senti dezaten
ferekaren zirrara,
batera irits gaitezen
noizbait utopiara.

6

Donibane Lohizunen zein
Hazparnen oratuta,
Durangon zein Biarritzen
gogoz besarkatuta,
migratzailea gurekin
erabat xarmatuta,
orain bizitza dakusa
ederki osatuta.

7
Eskua emanda hasten
ohi da hartu-emana
“bestea” besarkatuta,
berriz, galtzen sakana,
arras makurra delako
supremazisten plana,
ekintzarekin diegu
hondoratu afana.

8
Migrazio politikak
direlako kaskarrak,
Europan ilunki daude
banderaren izarrak,
“giza eskubide denak”,
dioenez oharrak,
migratzaile atseginak
egin dira gutarrak.

*2019ko ekainaren 2an*

*856*

## Gure irrintzi zoliari

1

Irrintzia behorraren oihu zolia,
berdin zaldiarena eta moxalarena,
Ekaineko arbasoentzat dei zirraragarria
adierazteko hamaika sentimendu,
Ibañetan garrantzitsua izan omen zen
Karlomagnoren armadaren atzealdea zartatzeko,
faxistek piztutako guda odoltsuan,
gudariak aldats gora kemendu zituen.
Irrintzia geurean entzun dezakegu,
munduko herri zaharretan antzeko oihua ere,
gizakien artean komunikatzeko modu bitxia
izadia bizitzaren erdigunea zenean,
mendien tontorretan zoragarria da,
pottokaren garrasi naturala dirudi,
antzinako ohiturak iraun dezan
euskal kultura ez dadila zimeldu.

2

Irrintzi, herrian kuttuna zara,
hileta, jaiotza, agurra, harrera...
ariman sustraituta, eztarrian loratuta,
zure oihartzun magikoa bizitza da,
artzainekin eremuan jarraitu zenuen
belaunaldiz-belaunaldi isildu barik,
gaur egun zaila dirudien arren,
pizkundeak ederkiro suspertuko zaitu.
Oi, umearoko irrintzi bizi luzea!,
nire gogoan aldiro oroitzen zaitut,
Euskal Jaixan zure oihua entzunda
kontzientzia euskaldundu zenidan,
kide irrintzilariei esker,
data berezietan hunkitzen nauzu,
askatasunaren egunean zurekin joango naiz,
enarak legez, airetik Euskal Herrira.

*2019ko ekainaren 2an*

857

**(1987.05.19) Josu Retolaza Loidiri**

1

“Herrera de la Mancha” espetxe makurra,
Alemaniak asmatutako zigorra,
Josu bertan izorratuko zen
sendagileak etika barik artatuta,
bizkarrean zuen kartzinomari garatxo deituta,
metastasia larruan zabaldu zitzaion.
Kirruli [1*] kidea ziegan zendu zen,
 ez ziotelako diagnostikatu birikeria,
pilulekin ezin osatuta eritasun gaitza,

---

[1*] *Joseba Asensio gazte bilbotarra.*

birikak erabat txikitu zitzaizkion,
medizina bengantza bihurtuta
euskal espeek gorriak dakuskite.
Kide gehienak Herreran elkartu zituzten,
joan zen mendearen larogeigarren hamarkadan,
giza eskubideak kemenez eskatu zituztelako,
Enrique Mugicak [2*] sakabanaketa abian jarri zuen,
barruetan euskaldunak fisikoki ahultzeko,
esparruetan psikikoki suntsitzeko.



---

[2*] *Enrique Mugica Herzog, Felipe Gonzalezen gobernuaren sailburua.*

2

Josu, poliziak etxean atxilotuta
egun horretan ez zinen Alfara joan,
komisaldegian izua jasanda
espetxeak zerua zirudien,
Madriletik Herrerara eramandakoan
minbiziak gorputza erasaten hasi zitzaizun.
Gaixotasuna dela medio, Eibarrera libre itzulita,
zuretzat oro harreran samurtasuna,
Kantauri itsasoaren kresala arnastuta,

Deban azken hatsa eman zenuen,
jada hogeita hamabi urte agurtu zintugula,
Untzagan etxekoei maitasuna ihinztatuta.
Josu, Elgetan, Lepo [3*] eta arbasoekin atseden hartuta
Intxortak xaloki babesten zaituzte,
aitxak legez, oroitzan dir-dir dirauzulako,
irri ederra gure ametsetan loratzen da,
zure desioak ernatzen hasiko dira
aurreskuen eta besarkaden aroan.

2019ko ekainaren 9an



[3*] *Aranzeta elgetarra.*

*858*

**Isiltasuna versus zarata**

1

Haserre daude zarata
eta isiltasuna,
batak besteari deitzen
diolako astuna,
euren arteko oreka
oro dago urguna,
ezin direlako batu

argia ta iluna.

2

Tantanak larri dantzuzkit
leotzaren barnean,
konketan glu-glu dagite
lo hartzeko unean,
madarikazio hutsa
dirudi aurrenean,
kartzela soilik delako
hori azken finean.

3
Euri jasa burrunba da
zoko goibel estuan,
dena eztanda dirudi
harresien mortuan,
elaiak, ordea, dira
baltsamoak zeruan,
kurloiak, kantuz hasten lez,
direnean koruan.

4
Hots asko entzuten dira
oihuak esparruan,
batez ere, lo kuluxka
egiteko orduan,
espezainen aginduak
ozen bozgorailuan,
Manoloren esku-zarta
ergelak inguruan.

5
Esparruak ez direnez
ia inoiz lasaiak,
jai izaten du espeen
arteko harmoniak,
nahiz batzuk izaten diren
erabat basatiak,
noizbehinka ahal ditugu
erdietsi meniak.

6
Irratiekin hasten da
mementorik txarrena,
drogatuta jartzen dute
topera bolumena,
“Radio Ole”ren klaskak
dirudi ezkilena,
erotzekoa ohi baita
trumoi horren orena.

7
Isiltasuna hedatzen
denean galerian,
gogoa pausatzen ohi zait
emeki izadian,
leun barneratzen naiz giro
ezti zoragarrian,
maitearekin etzatzen
desiren hariztian.

8
Kalean iskin egingo
diot harrabotsari,
harrera, ostera, euskal
musika bikainari,
oi, laztana "bai" esango
diogu zoriari,
kideak aska ditzala
gure jendarteari.

*2019ko ekainaren 9an*

*859*

## “Aita Mari”ko marinelei

1

“Juan Carlos Lehena” eta “Aita Mari”,
bata Getxon, eta bestea Bilbon,
hegazkin-ontzia itsasadarreko kaian,
arrainontzian Euskaldunakoan,
errege ohia Francoren oinordeko,
arrantzalea naufragoen sorosle,
Juan Carlosen bizitza lizuna izan da,
Mari, Kantaurian lagundu nahian ito zen.
Getxora, jendetza irrikaz hurreratu da
miresteko gerrako ontzi erraldoia,
Bilbon herritar bihoztunak ilaran
maitasuna baino ez den ikurra laztantzeko,
euskaldun zintzoentzat zein den hobea,
monarken zaleek jakin dezatela,
militar zekenen txatarra arbuiatuta,
elkartasunaren eredua ezbai barik.

2
“Juan Carlos Lehena”, itsasoan nonahi dabil
bere ahalmen bortitza erakusten,
herritarren ataka mespretxatuta
eraikitzeko dirutza gastatu zuten,
“Aita Mari”, Getarian preso eduki dute
bere asmo duinak ezin bete barik,
orain, Lesbosen eta Chiosen ari da
kanpalekuetan beharrak asetzen.
Zuen altruismo itzel hau amaituko da,
Europako ateak zabalduko ditugunean,
bien bitartean Zaporeak bezala,
utopia ehuntzen jarraituko duzue,
aizue, “Aita Mari”ko herkide prestuak
migratzaileek ohoratzen zaituztete,
itsaslamiek berriz, bihotzez diotsuete,
“marinel minak gure kanten musak zarete”

*2019ko ekainaren 16an*

*860*

**(1970.12.08) 21 urte zituen Robertori. Alicia eta Miro gogoan**

1
Roberto Perez Jauregi
zure deiturak oroitza,
San Andresen anaia lez,
zinen nahiaren emaitza,
komunismoa zuretzat
zen utopiaren hitza,
ederki goza genezan
berdintasunaren ditxa,
diktadura herriaren
egunean zenez sitsa,
kanporatu nahi zenuen
Francisco Franco zimitza,
borrokan zeniharduen
erdiesteko garaitza,
mardulik lilitu zedin
eskubideen hurritza.

2

Zuk, lan zenegien AYA
fabrikaren lantegian,
armagintza txit zelako
zilarra ibar txikian,
soldata uzten zenuen
sukaldearen mahaian,
zu, anaia, aitxa eta
ama, pozarren habian,
Eibarren beste gazteak
legez, gustura aisian,
kale xarmantetan beste
hur zegoen izadian,
Burgosko prozesua zen
sartu zure kontzientzian,
zeudelako militante
batzuk arrisku larrian.

3
Heriotz(a)-zigorren kontra
zu zinen mobilizatu,
manifan parte hartzeko
Untzagan kemenez batu,
herrak armagaz zintuen
Karmen kalean destatu,
guardia zibil ankerrak
bidegabeki hondatu,
zure erailketak zuen
lurraldea aztoratu,

Eibarren zituzten zeure
etxekoak ferekatu,
nahiz elkartasuna zuten
hilerrian mehatxatu,
Burgosen euskal presoek
jator zintuzten ondratu.

4
Bihotzean hunkituta
egin genizun harrera,
gurasoak heldu dira
mende honetan aterpera,
eurak esanda dakigu
zu zinela sentibera,
eta neurri berean
hurkoekin alegera,
Roberto, xedeen alde
zurekin gaude batera,
Euskal Herrian jendarte
hobea dezagun era,
auzolanak eramango
gaitu askatasunera,
gurekin igoko zara
ospatzeko Arratera.

*2019ko ekainaren 16an*

861
**Josu Urrutikoetxeari.**
**Iheslariei**

1
Beteranoa poliziek antzeman zuten,
kazetari makurrek kidea zukutu,
Bakearen Artisauek egintza deitoratu,
Euskal Elkargoko arduradunek legez,
ziegan gertaera luzaro hausnartu dut,
Chauvinistek gerra baino ez dutelako nahi.

Espainiak eta Frantziak ehizatuta iheslaria,
Casadok, Riverak, Abascalek... ospatu dute,
gatazka ez dadin inoiz demokratizatu,
Euskal Herria Europan existitu,
eskuindarrak politikoki herra direnez,
Ugaon, ertzaintzak babestuta iraindu gaituzte.
Atxiloketak, erailketak, bahiketak....
gurean sarritan gertatu dira,
borroka armatuak segi zezan,
konponketaren mahaiak ahanzturan iraun,
estoldetako gizatxar miserableek
lehen lez, orain, gauza bera lortu nahi dute.

2
Josu, Argalaren ezaguna izatetik,
hurko mina izatera igaroko zen,
halabeharrez ihes egin ondoren,
herkide asko lez, klandestinoak egin ziren,
Francoren diktadura zimeldu bezain azkar,
euren ametsa guztion askatasuna zelako,
Arrigorriagakoa Angelun hil zuten,
Ugaokoak jazarpena aldiro jasan du,
bere sentiera betidanik herria izanda
kideekin urratsik zintzoena eman zuen,
herritarren nahiarekin bat egiteko,
Erakundea Ama-Lurrean urtu zedin.
Josu, kemena ez zaizulako agortu,
zure arima aberrian hegan dabil,
ostadarraren eguna xede delako,
Ugao maitea ikus dezazun, bi desira:
"Ilargi amandreak loa zain diezazula,
Eguzki amandreak larrua laztandu".

*2019ko ekainaren 23an*

*862*
**Amazon dendarien etsaia**

1
Amazon harrapari
eta bizkarroia,
kapitalismoaren
eredu salbaia,
dendarientzat denez
ezinezko lehia,
merkatuaren zolda
dezagun arbuia.



2
Jeff Bezosen ametsa
zen amerikarra,
gurasoek prestatu
zioten zilarra,
gainbalioarekin
egin da izarra,
beharginen soldata
delako txatxarra.

3
Jeff Bezos aberasten
delako hilero,
atzo, gaurko bizitza
ez zuen espero,
Amazonek daukanez
hamaika bezero,
bere urrezko “Visa”
beti dago bero.

4
Bezos, Forbes zerrendan
da dirudunena,
iritsi du, ordea,
delako zekena,
nahiz uste duen dela
patroirik onena,
beharginentzat baita
kirten alaena!!

5
Bezosek dolar asko
ta morroi ugari,
Amazon kontsumismo
gaitzaren emari,
lagundu beharrean
denden orainari,
kentzen dio arnasa
euren geroari.

6
Amazonen latza da
behar egitea,
estresak eraginda
handia kaltea,
beharginak ohi dauka
lepoan katea,
biltegian jardunda
bizitza tristea.

7
Gure ekonomia
ez dadin okertu,
Amazon behar dugu
geurean aspertu,
ez daitezen bilaka
herriak desertu,
bere urre distira
dezagun baztertu.

8
Senak diotsu, “kasu
egin iezadazu”,
“arren, Amazon tinko
ezezta ezazu”,
ez denez kilometro
zero enbarazu,
bertako produktuak
eskura itzazu.

*2019ko ekainaren 23an*

# Aurkibidea
ZER-NON

SENTIPENAK

GOGOETAK

## G I Z A R T E A



## P R E S O A K

## PERTSONAIAK

## EUSKAL HERRIA



## EUSKARA

## E I B A R



## E K I N E Z

MUNDUARI BEGIRA



ANIMALIAK



**Ametsen txokoan bizi naiz**
**[1-162]**
ATARAMIÑE. *2011.*



**Ainarak herrira itzuliko dira**
**[163-308]**
ATARAMIÑE. *2014.*



**Bidean gaude, aurrera goaz, joan zirenekin**
**[309-450]**
ATARAMIÑE. *2016.*



**Udaberrian biziko gara**
**[451-580]**
ATARAMIÑE. *2017.*



**Hamaika desio utopiarako**
**[581-721]**
ATARAMIÑE. *2018.*

# **atara**miñe

**El silencio del infierno**
Fernando Alonso. *2003.*

**Gosea lagun, laguna**
Segapoto kolektiboa. *2004.*

**Kartzelako leihotik**
Joseba Arregi. *2004.*

**Seineri aurrez aurre kontaturiko ipuina**
Joxe Blanco. *2004.*

**Lunaren Goiztiri**
Juan Luis Mugertza. *2005.*

**Azeri gosetia**
Kepa Etxebarria. *2005.*

**Ataramiñe kantuz**
CD. Hainbaten artean. *2006.*

**Claude Gueux**
Victor Hugo (itzulpena: Zorion Zamakola). *2007.*

**Zimaren abenturak**
Belen Gonzalez / Kepa Etxebarria. *2007.*

**Kartzelako neurriak**
Urtzi Zubizarreta. *2008.*

**Mendian gora, mendian behera, Euskal Herrian zehar**
Mahai-jokoa. Zorion Zamakola. *2008.*

**Penumbras de un ayer**
Iñaki Ojeda. *2009.*

**Preso nago**
Mikel Orbegozo. *2010.*

**Bakarmortuko kronikak**
MIKEL ANTZA. *2011.*

**Espetxetik at**
BORXA URBERUAGA. *2011.*

**Ametsen txokoan bizi naiz**
IBON MUÑOA. *2011.*

**Ametsen txokoan**
CD. HAINBATEN ARTEAN. *2012.*

**Kandela bat pizteko behar dena**
MIKEL ANTZA / IKER MORENO. *2012.*

**Fakin xokona**
OIER GOITIA. *2012.*

**Sasian barna**
XABIER MAKAZAGA. *2012.*

**Preso nago 2**
MIKEL ORBEGOZO. *2013.*

**$Z^2$**
MIKEL ANTZA. *2013.*

**Agurra eta ohorea**
JOKIN URAIN. *2013.*

**Ainarak herrira itzuliko dira**
IBON MUÑOA. *2014.*

**Urte ilunak**
NELSON MANDELA (ITZULPENA: EKAITZ SIRVENT). *2014.*

**Ilargiraino!**
MIKEL ORBEGOZO. *2015.*

**Burdin elorri arantzetan**
Joseba Arregi. *2015.*

**Haizea eta Lizar Magikoa**
Kepa Etxeberria eta Xabier Ugarte. *2016.*

**Kuku erlojua**
Kepa Etxeberria eta Xabier Ugarte. *2016.*

**Haizea**
Hainbat egile. *2016.*

**Bidean gaude, aurrera goaz, joan zirenekin**
Ibon Muñoa. *2016.*

**Kartzelako kronikak**
Jexuxmari Zalakain, *2016.*

**Axelko eta Otsoko bertsotan**
Kepa Etxebarria. *2017.*

**Udaberrian biziko gara**
Ibon Muñoa *2017.*

**Errezel berdeak**
Jexuxmari Zalakain. *2017.*

**Txori mezulariak**
Joseba Erostegi 'Eltzikorta' / Lorea Erostegi Fernandez. *2018.*

**Hamaika desio utopiarako**
Ibon Muñoa. *2018.*

**Egia baten egunerokoa**
Oier Goitia. *2018.*

**Gure memoria, gure historia**
Ibon Muñoa. *2019.*

**Basatza**
Hodei Ijurko Irotz. *2019.*

**Amonaren ipuin magikoak**
Joseba Erostegi / Lorea Erostegi. *2019.*



**Ibon Muñoa Arizmendiarrieta**
1958.05.18
Eibar

*Gure memoria, gure historia* Ibon Muñoaren seigarren liburua dugu. Aurretik argitaratuak ditu:
*Ametsen txokoan bizi naiz* (2011),
*Ainarak herrira itzuliko dira* (2014),
*Bidean gaude, aurrera goaz, joan zirenekin* (2016),
*Udaberrian biziko gara* (2017),
*eta Hamaika desio utopiarako* (2018).
Haien ildoari eta orden kronologikoari jarraitzen diete liburu honetako bertsoek ere.

Hartara, lehen bertsoak 722. zenbakia darama; azkenak, 862.a. Guztira, 141 bertso berri, 2018ko apirilaren 1etik 2019ko ekainaren 23ra artean Kordobako espetxean idatziak.



**atara**miñe
**www.literaturakoadernoak.org**